## Aurkibidea



**Teresa Toda Iglesia**
1950
Porto Alegre (Brasil)

Espetxean: 2007.12.01.



C.P. Cordoba
Carretera Sevilla-Madrid, km. 391
Apdo. 479
14.015 Alcolea
Cordoba

## Hitzaurrea

### *Sormen Kolektiboa*

Euskal preso politikook, izandakoak zein gaur egun oraindik hormatzarren artean dihardugunok, ondo baino hobeto dakigu sormena eta irudimena kartzelari aurre egiteko tresna baliotsuak direla, bai barnean daramaguna lantzeko, baita ere kanpoan ditugun pertsona maitatuekin harremanak sendotzeko, estimatzen ditugula erakusteko.

Sormen horren emaitzak forma ezberdinetakoak dira. Ideiak esaldi eder bihurtuta, ipuinak eta eleberriak sortzen dira; koloreekin jolastuz, naturak, lagunek, Euskal Herriko ezaugarriek margoetan bizia hartzen dute; marrazki artistikoak edo komiki gisakoak ere bai lantzen dira. Joste-lan piloa dago, arropa asmatzen, apaintzen; gurutze-puntukoak...; aproposak diren material xumeekin, apaingarri paregabeak egiten dira; eta, toki batzuetan, buztina, zura edo larrua lantzeko aukerak daude. Halaber, fundamentuzko materialik ez dagoenean, edozein gai birziklatzeko sekulako kapazitatea du EPPKk!

Ekoizpen hauen fruitu gehienak, politenak ia beti, ez dira inoiz publikoak, baizik eta senide zein lagunentzat bereziki sortuak. Hartzaileek pozez janzten edo erabiltzen dituzten heinean, hurkoengana iristen dira, baina, funtsean, gure harreman pertsonalaren erakusleak dira. Gure eskulanek, kartzelak kanpokoekin lotzen ditugun maitasunezko hariak moztea lortu ez duenaren mezua daramate, kartzelero askoren amorraziorako.

Hala ere, esan genezake idazlanak nagusiak direla gure artean. Bai? Ba, bai. Zenbat gutun ateratzen dira astero-astero Estatu espainoleko zein frantziarreko espetxeetatik? Ez al dira hauexek, hain zuzen ere, presoen idazlan mimatuenak? Eremu pribatuan geratzen dira, baina zenbat gogo, ahalegin, sentimendu, denbora... eskaintzen diegu! Bihotzetik isurtzen zaizkigu.

Gutunak gurasoentzat, askotan espetxeko egoera xamurtuz, gehiegi kezka ez daitezen. Seme-alabentzat, ipuin edota tradizioak transmititzen, jostalari, hain oztopatuta dagoen aita-amatasuna ureztatuz. Amodiozko izkribuak, goxoak, pikaroak, konplizeak, alaiak; baita, aldizka, tristeak ere. Laguntzako gutunak, agian, familiari esaten ez diona zaiona kontatzen, edo gure bizipen arruntak barregarri bihurtzen. Moduluz modulu eta kartzelen arteko gutunak, lagunek, kideek, elkarren berri ematen.

Giza altxorra da Euskal Herriko hainbeste etxeetan urtez urte aberasten doan orri multzo izugarri hori. Gutun haietan, baita eskulanetan ere, EPPKren historia borrokalaria zein presoen kalitate humanoa ehunduta dago.

Dena dela, idazlan batzuek salto egin dute argitara. Liburu dezente loratu dira burdinen artean. Baita Ataramiñek azken urteetan zehar bere orrietan bildutako kolektiboaren harribitxi txikiak ere.

Ezin dut sarrera hau bukatu idazten ari naizen bitartean Josu Uribetxeberria eta beste 13 kide gaixoek bizi duten egoera latza aipatu gabe. Dispertsio eta espetxe politika mendekatzailearen adierazle garratza da! Besarkada handia zuentzat!

*Kordobako espetxetik*



**Aratz Estonba Iturriza**
1979
Donostia

2001-2005 artean izan zuten kartzelan.
Oraingoan, 2009ko urrutik hona daukate preso.



C.P. Ocaña II
Mártires de Ocaña 6
45300 Ocaña
Toledo

## Telebistari begira

Telebistari begira nago, barrotearen itzalak zeharkatzen du pantaila
irudiek erakusten dute nola poliziak jendea jipoitzen duen han eta hemen
terrorismoa da ezabatu beharreko gaitza
indarrez, beldurra hedatuz,
biolentziaren monopolioa, boterea
beti boterea
giltzarria entzuten da atearen beste aldean
funtzionarioa izango da kontakatilu lanetan
atxiloketa gehiago izango dira Barne Ministroaren esanetan
ez dakigu non, ez dakigu nor, ez dakigu zergatik
baina atxiloketa gehiago izango dira
komisaldegi eta epaitegietako kalabozoetako hormetan irakur daiteke
"eutsi", "lasai, dena bukatu da"
eta kaleetan panfletoak barreiatzen dira
"ez beldurrik izan, ez hitz egin"
"de prisión a prisión" lagunaren gutuna
"intervención de comunicaciones"
bortxaketa, autozentsura
hilabete jasotzen dudanerako
inoiz baino preso gehiago dago Espainian
inon baino preso gehiago dago Espainian
"La Roja" txapeldun
arma, tiro, gol
preso naukate Espainian / preso gauzkate Espainian
hortzak estuturik preso naukate Espainian /
hortzak estuturik preso gauzkate Espainian
amorruz gaindi preso naukate Espainian /
amorruz gaindi preso gauzkate Espainian
barrotearen itzalak gora egiten du telebistako pantailan
ordulariko orratzen moduan.

## Hutsunea

Albora begiratu dudanean
nire begirada hormaraino iritsi da
zurekin talka egin beharrean.
Kalean genituen elkarrizketak izan nahian
monologoak baino ez ditut lortzen.
Nire ezpainek ezin dute zure haragiaren goxotasuna sentitu,
muturra zimurtu besterik ez dut egiten.
Larrua jotzea ere
imajinazioz jositako joko lizun bakartia da.
Ohean nagoela besoa luzatzen dudanean
zu besarkatu nahian, erori egiten naiz
ohea bera txikiegia delako biontzat.

## Erraietatik

Hormek oihu egiten segituko dute
nire odolak bor-bor dirauena
amorrua jaurtiko baitut
eta espraiaren tanta bakoitza
nire hautsitako ametsen puska zorrotza izango da
haien amets goxoak zartatzen eta gaiztotzen
maite zaitudala deiadar egiten dudan moduan
erraietatik.

*Ocaña II espetxetik*



**Alfontso Etxegarai Atxirika**
1958
Plentzia

1985ean, Quitora (Ekuador) deportatua. 1986an, Sao Tomera (Afrika).
Argitaratuak ditu *Regresar a Sara: testimonio de un deportado vasco* (Txalaparta, 1995) eta *Hitzezko txalupak* -Josu Martinezekin batean- (Elkar, 2011).



CX postal 328
Sao Tome
R.D.S.T.P.
Afrika
etxe@cstome.net

## Los hijos de la arcilla

Pasaban las canoas, bien a lo lejos, con hombres y mujeres en pie, un poco inclinados hacia adelante, como sombras de nariz alargada hurgando en el horizonte. Vistas desde lejos, parecía que volasen. Iban hacia el sur, sin amanecer del todo. Iban por los siglos de los siglos, como si fuera un destino. Y los sueños también iban, aunque para algunos sabios, sabios sabios, no fueran más que quimeras. Cuando cambiaba la estación, con frío o con sol, volvían por el otro lado, como si hubieran dado la vuelta al mundo, algunas veces con gloria, otras con pena. En la playa esperaba la aldea, con fogatas para orientar el regreso a casa, a la tierra. Bajaban de las canoas y entregaban las armas al pueblo, que las guardaban en las grutas secretas. Las armas eran del pueblo en esta aldea. Las sombras de nariz alargada mudaban sus trajes y se volvían pescadores. Hasta bien avanzada la madrugada, relataban sus viajes, siempre con pasión. La aldea los escribía en telas, no había otra manera de guardar la memoria. Estaban prohibidas otro tipo de escrituras, así como estaban prohibidos los libros que contaban su pasado. Relataban y relataban diciendo que lo mas valioso era el camino; que se tuviera en cuenta el camino y no la necesidad, a veces urgente, de llegar al final del viaje. Ese camino no era sólo elegir una opción o la otra, ni calificar un momento de la vida de un pueblo que lucha con palabras seductoras. Se trataba de la dignidad y el sentido histórico, la solidaridad y la solución colectiva como camino. En ese camino no se negociaba la libertad ni el derecho a la resistencia!

En tierra firme, junto a la fortificación que sirvió de defensa en las guerras de unos y de otros, un mundo de diversas estatuas de

piedra, acompañadas por viejos y roñosos cañones, comenzaba a sacudirse el relente. Eran las primeras en avistar las canoas, desde que las guerras existían. Quién sabe si alguna de ellas no fue algún día sombra de nariz alargada? Kilómetros más allá, en las casas y en los hoteles, las pantallas de televisión por satélite esculpían la vida cotidiana repitiendo noticias, sin preocuparse de si los consumidores de tragedias se habían sentado ya a tomar el café de la mañana. Siempre los mismos temas. Les parecía imprescindible que Grecia siguiera en el euro, tan imprescindible que, de lo contrario, estaban dispuestos a enviarles ejércitos de *economistas*, *troikas* , *fondos*... si era para hacer callar a los griegos. A nadie, en el bando de los jefes europeos, o sea en su sano juicio, se le había ocurrido decir que era el euro que necesitaba quedarse en Grecia, que de lo contrario se les desmoronaba su invento político, su ya no tan seductor invento político. Las pantallas cambiaban la imagen, volvían con las guerras sagradas, las bendecidas, esas guerras que sólo tenían muertos con derecho a bandera y funerales si eran del buen bando, del suyo, y que todos los días nos salpicaban con decenas y decenas de muertos en países lejanos...

El sol ya calentaba. Los turistas comenzaban a desembarcar para visitar la fortaleza, pasando por entre las estatuas de piedra. Todos se paraban frente a la que más atraía, la más grande, la más impresionante... Una estatua con uniforme, probablemente un soldado, fardado y pertrechado de todas las correas y de todas las armas. Fusil de asalto con visión nocturna, especial para el ataque y destrucción; bazucas con capacidad de atravesar los más espesos hormigones; aviones miniatura para espiar y *drons* asesinos que nunca vieron la cara de quien mataban... Todas las armas de la guerra moderna estaban esculpidas en

aquel soldado enorme, las nucleares, las biológicas. Su nombre era Galio, así estaba escrito, y era tan alto que parecía llegar al cielo.

Casi enfrente de Galio, a una decena de pasos, había otra estatua, pequeña, a la que los visitantes no prestaban mucha atención. Sus pies desnudos, fuertes, parecían surgir del propio suelo, de la hojarasca y el polvo que el viento había depositado en la explanada durante el atardecer del día anterior. Tenia la altura de un humano. Observándola mucho, con cuidado, parecía una estatua que no era estatua, como si sus ojos tuvieran vida, pero era muy fea, eso si, muy fea. No tenia nombre esculpido, los visitantes o las propias autoridades de la fortaleza lo habían volatilizado. Era conocido por Birratz.

Galio, en cambio, se encontraba sobre un bloque de piedra de granito, un cubo enorme de granito que lo hacia mas monumental. En una de las caras de este cubo estaban esculpidas letras doradas, muchas letras. Se podían leer nombres de grandes ciudades del mundo -Bagdad, Estalingrado, Hiroshima....- muy nombradas, asi como guerras famosas -Balkanes, Argelia, la de Cien Años... . Al final de todas las letras y de todas las lineas, el epitafio decía: "A la memoria de Galio, el soldado que participó en todas las guerras de intervención...". Alguien había martillado la última palabra, aunque uno podía imaginar que se trataba de la palabra "humanitaria".

"Pero tú no eres estatua... Has tomado esa postura de estatua y los demás a aguantarla. Es refugio fácil", se decía a si mismo Birratz. Qué tipo de estatua podría ser él, una estatua victoriosa, una estatua triste y con pinta de víctima?

**Galio**: Tú nunca serás una estatua como yo, victoriosa. Tú eres fea, horrible... un monstruo terrorista. Tú no tienes guerra, ni ejercito... Tú eres malo, a secas!

**Birratz**: Es cierto que no seré una estatua tan imponente como tú, ni tan poderosa, ni tan reconocida mundialmente. A veces hasta no sé si soy un invento de tus dueños, pura propaganda de ellos. Tampoco me gustaría que me dijeran todo el tiempo que soy estatua, como te dicen a ti, que tienes hasta pedestal. Por supuesto que tampoco quiero ser soldado profesional; matar sin pensar, participar en guerras donde "Se dejan huesos de miles y miles de personas en forma de cruz", o guerras en las que no se permite el entierro de los enemigos muertos.

**Galio**: A mi me reconocen por las guerras heroicas, siempre he ganado. Me condecoran por llevar la democracia y la paz. Soy un gran soldado de la paz, está escrito ahí!

**Birratz**: Es verdad que está escrito, sí. También es verdad que fuisteis misión civilizadora, injerencia humanitaria y otras buenas cosas más. Pero, como diría Neruda, desolasteis las islas y rompisteis la sonrisa de los hijos de la arcilla con vuestras grandes armas..., para librarles, claro, pero no para reconocerles su libertad y su emancipación. Y yo aquí estoy, estatua o no, feo como el jorobado de Notre Dame porque así me habéis esculpido en vuestros años de contubernio. No, no has sido tú, tú eres un glorioso soldado que hasta tiene derecho de practicar torturas y matar por error, a mujeres y niños, repetidamente, y recibir todavía condecoraciones. No has sido tú, porque no piensas, eres soldado profesional. Son tus dueños, algunos de ellos me llamaban antes "antifascista", luego pasaron a "independentista" y ahora "mierda de terrorista". Esa es la estatua donde me habéis envuelto.

**Galio**: Todo eso que dices es basura, propaganda terrorista! A mi los turistas me admiran, acarician con sus manos las letras doradas donde se cuentan mis actos heroicos. Qué has hecho tú, no has ganado ninguna guerra; estas ahí, derrotado, sin gloria, estatua sin ser estatua, groseramente tallado.

**Birratz**: No me admiran, por lo menos no pomposamente. Es verdad que no he llegado a la libertad, a la emancipación, es verdad. Pero la realidad es que soy hijo de la arcilla, moldeable, y siento las caricias de las gaviotas cuando se posan en mi joroba terrorista. No soy como tú, estatua Galio, pero yo también conocí la guerra, desde el otro lado. Para mi, como cuentan los antiguos que desembarcan en la playa de la aldea y entregan sus armas al pueblo: "Lo valioso no es ganar, sino merecer ganar".

En la playa de la aldea los chavales corrían detrás de un balón de trapos... las canoas descansaban sobre troncos.

*La Isla*
*São Tomé, 8 de Octubre 2012*



**Mikel Antza**
1961
Donostia

2004. urtetik daukate preso. Literaturgintzan ugari jardundako idazlea dugu. Liburu hauek argitaratu ditu: *Suzko gezi bat bezala* (GAK, 1983), *Lehen bilduma 82-84* (Susa, 1985), *Beteluko balnearioko mirakulua* (Susa, 1985), *Odolaren usaina* (Susa, 1987), *Ospitalekoak* (Susa, 2010), *Bakarmortuko kronikak* (Ataramiñe, 2011), *Atzerri* (Susa, 2012).



Albisu Iriarte, Mikel (5 508)
Maison d'arrêt de Lyon-Corbas
40 boulevard des Nations
BP 351
69 962 Corbas Cedex
Frantzia

## Invictus (Garaiezina)

**- Mandelak kartzelako une zailetan errezitatzen zuen poema -**

Hondogabeko amildegia bezain beltz
biltzen nauen gau honetatik harago,
jainkorik balego, hari eskerrak,
nire arima menderakaitzagatik.

Halabeharraren atzapar arriskutsuetan,
ez dut intziri egin, ez dut negar egin.
Zorigaitzaren kolpeen pean,
Burua odoletan dut, baina zut.

Kolera eta lantuzko eremu,
Itzal Izugarriaren egoitza honetatik harago,
ez nau beldurtzen urteen mehatxuak,
ezta beldurtuko ere.

Ez du jada axola atakaren estuak,
ezta zigor-epaiaren zamak,
etorkizunaren jabe naiz,
nire arimaren lemazain.

*William Ernest Henley 1849-1903*

## Kandela pizteko behar dena

*Amaiur eta Ametsi*

Urteak aurrera doaz.

Presoak ez du gogoan noiz ikusi zuen iloba azken aldiz. Ez du gogoan non ikusi zuen ere. Dakien bakarra da aspaldi izan zela, beste espetxe batean.

Haurrak lau urte zituen kartzelako lokutorioan izeba-ilobak elkar ezagutu zutenean. Orain, hamar ditu.

Bitarte horretan, haurrak amets asko egin ditu. Eta urtero-urtero, inori ezer esan gabe, jasoko ez duen oparia eskatu dio Olentzerori: izeba etxera ekartzea.

Oroimena lausotzen ari zaio izebari. Hasieran, egunak eta asteak arazorik gabe bereizten zituen, datak oroitzen, gose-greba egunen kopurua eta zigor-ziegan pasatakoena ere gogoan zituen. Dagoeneko ordea, egunak, asteak, hilabeteak eta urteak nahasten ari zaizkio. Espetxeak bere garro likitsekin irenstear daukala sentitzen du, gauean oheratzen denean bezala goizeko zenbaketa baino lehen jaikitzean. Kilometro-mugarririk eta bide-marrarik gabeko errepidean aurrera doa. Lehen urtetan malkartsu zen paisaia, lau bihurtu da bere inguruan. Indarrik ere ez du ia egin behar egunak egunari jarraiki dakion.

Ikustaldi-kabinara iritsi aurretik ikusi du presoak ilobatxoa, leihotxotik begira, atezuan, bera noiz iritsiko zain. Ilobak, zaindariak izeba haztatzen ikusi du, nola agindu dion poltsikoak husteko. Kristalaren ostetik, izebak irribarre bihurria egin dio neskatilari,

begi bat kliskatuz. Izeba ikustaldi-kabinan sartu, besarkatu eta elkarri muxu goxo bana eman eta izebak gordelekutik gozokiak atera dituenean ulertu du neskatilak irribarrearen arrazoia.

Urteak aurrera doaz, bai. Norberaren zimurretan eta ileen urdintzean baino haurren aldaketan neurtzen du denbora presoak. Besoetan altxatzean ohartu da zenbat koxkortu den neskatila. Oraingoan ez du azken aldian bezala airean ibiliko.

Helduen elkarrizketaren aterrune batean, ikastolan bezala hatza altxatuta hitz egiteko baimena eskatu du neskatilak:

– Izeba, esan dio, zuk ba al dakizu zer behar den kandela pizteko?

Ikustaldi bakoitzean asmakizun bat ekartzen dio.

Hausnarrean aritzearen plantak egin eta eman dio erantzuna izebak:

– Sua!

– Ez!-, poztu da neskatila.

Urte batzuen buruan, itxuraldatuta bada ere, ilobak oroituko du kartzela urrun batera joaten zela izeba ikustera, gaua bidaian ematen zutela, nekatuta iristen zirela, kartzelako sarreran estu eta larri ibiltzen zirela, hainbeste miaketa eta segurtasun neurrirekin. Eta oroituko ditu izebaren hitzak, ahotsaren doinu lasaia, alaia, kartzelari buruz zituen beldur eta mamuak uxatzen zizkiona.

Antzera, presoaren bizitzan, murru hauskara eta zeru griseko paisaia histuaren erdian, adabaki koloretsuz jositako jantzia osatzen dute ikustaldiek. Ohean etzanda, begiak itxita, lokutorioan pasatako uneak birbizitzen dituenean, berriro ere gehiegi hitz egin duela eta betiko kontuez aritu zaiela egingo dio errieta bere buruari: kanpoko mundukoek ulertzeko gaitzak diren kartzelako xelebrekeria eta miseriez aritu dela ohi bezala. Kalean, munduan gertatzen denaz duen jakin-mina asegabe gelditu dela, berriro ere.

– Esan bada!-, tematu zaio ilobatxoa, izebari erantzuna asmatzeko beste aukera bat emanez.

– Nire burua ematen dut!-, etsi du izebak.

– Kandela pizteko, behar dena da itzalita egotea!-, eman dio erantzuna neskatilak heldu bati zerbait irakasteak eman dion alaitasunez.

Denek egin dute barre.

Izebak altxorra bezala ekarri du asmakizuna gaurko ikustalditik. Miaketa zorrotza egin dioten bitartean eta gero korridorean barrena ziegarako bidean, etxekoek ekarri dioten arropa garbituen poltsa eskuan, buruan ibili du, irribarre batekin. Iluntzean, leihoko hitzorduan jarriko die asmakizuna kideei; ziur dago ez dutela asmatuko.

Zerbait pizteko… itzalita egon behar!

Baina, eta piztuta dagoen suak indar gehiago har dezan zer hauspo mota erabili behar ote da?, bururatu zaio bat-batean. Ez zaio erantzunik etorri gogora.

Aldiz, noiz eta non izango ote den ez dakien hurrengo ikustaldian ilobatxoari jarriko dion asmakizuna bururatu zaio:

Zer behar da kartzelatik ateratzeko?

Ia ziurtzat ematen du erantzuna asmatuko duela.

Zabaldu du arropen poltsa eta ziegako hormei darien zoko usaina desagerrarazi duten urrinez bete zaizkio sudurrak. Begiak itxi ditu. Izarak aire librean esekita irudikatu ditu, eguzkitan dantzan, itsasotik heltzen den brisaren fereka gordeko dute tolesduretan oraindik. Aurpegira eraman du artilezko jertse goxoa, ardiak entzutea iruditu zaio bat-batean, ezinezko dela dakien arren begiak zabaldu ditu, hormetan belaze berdeak, pinpilinpauxak, bitxi-loreak eta izen ezezaguneko hegazti eta animaliak agertu zaizkio. Badaki ezinezkoa dela, baina laket du etxekoen azken fereka horren magian murgiltzea, erritu txiki bat da, bere sekretua, ametsaren mundurako bere ate ezkutua, hor kanpoan oraindik bizitza badela bere buruari oroitarazteko eta etsipenean ez erortzeko erabiltzen duen makulutxoetako bat.

Banan-banan eta kontu handiz tolestu ditu zaindariek beren latexezko eskularruekin miatu eta nahasi dituzten arropak. Beti bezala, lehendabizi ohe gainean egingo ditu multzoak, sailkatuz, gero apaletan kokatzeko.

Eskua poltsan sartu duen batean, eskua izoztu egin zaio. Zer da arropen artean ukitu duena baina?

Izutu da. Zerbait gogor eta hotza da. Bere buruak istant batzuk behar izan ditu eskuekin ukitu duenaren eta ilobatxoak asmakizuna jartzerakoan egiten zituen barretxo enigmatikoen artean lotura egiteko:

Kandela bat! Hori bai magia! Nola utzi dute pasatzen kandela bat arropen artean?

Ez dago ametsetan ordea. Kandela bat da arropen poltsa barrutik atera duena. Erretzerakoan lurrin goxoa hedatzen duen kandela horietako bat.

Zer behar da kandela pizteko? Alprojatxoa halakoa!

Itzalita egotea!

Ilobatxoa irudikatzen du, haren irritxo goxoak kandela bere ziegaraino iritsi dela esango dionean; bera bai dela mago handia esango dionean.

Itzalita egon behar da, bai, piztu behar den kandela.

Sua ere behar da ordea kandela pizteko. Eta berak aspaldi erretzeari utzi zionez, ez du supiztekorik, ez pospolo triste bat ere ziegan.

Kideei eskatu beharko die, leihotik leihora helaraz diezaioten.

Orduan, presoak esku batekin barrotea helduz eta bestearekin kandela kanpora ateraz, alboko ziegetako kideek ispiluaren bidez ikus dezaten, oihuz eskatu die:

E! kideak, nork emango dit kandela hau pizteko sua?



**Fernando Alonso Abad**
1961
Sestao

1996. urtean atxilotu zuten. Harrez gero, espetxean, hainbat liburu argitaratu ditu: *El repartidos de sueños* (Txalaparta, 2000), *El silencio del infierno* (Ataramiñe, 2003), *¿Por qué luchamos los vascos?* (Txalaparta, 2007), *Una flor en el juzgado* (Hiru, 2009).



C.P. A Lama
Monte Racelo, s/n
36830 A Lama
Pontevedra

## Séptimo día del séptimo mes

Es la cuarta vez en lo que va de noche que se tropiezan en la barra de un bar llamando la atención del camarero para que les haga caso. Esta coincidencia que no sería para nada extraordinaria en un pueblo con tres tabernas sí que lo es en una Iruñea en plena vorágine sanferminera. Por eso se han cruzado ya algunas sonrisas cómplices y neblinosas por el alcohol, que va dejando lentamente su huella de brillo turbio en las miradas.

Avanzar hacia la barra es más complicado que moverse por los manlares en medio de una tormenta tropical, aun así, alguien tiene que hacerlo porque de lo contrario no hay bebida; en el paraíso festivo el maná no cae del cielo, hacen falta héroes. Las últimas incursiones han sido particularmente encarnizadas porque en los locales ya no cabe ni la luz, y abrirse paso entre decenas de cuerpos sudorosos en frenético movimiento es una tarea de titanes que no hay más remedio que afrontar. La mano que mueve esas mareas lúdico-festivas ha provocado que una y otra vez la deriva de ambos les haya hecho recalar en la misma ensenada de la barra. El ruido es ensordecedor, mucho más si el personal conoce la letra de la canción que suena y también la vocea, lo que ocurre con más frecuencia de la imaginable.

Uno junto al otro pero cada uno por su lado hacen gestos a los camareros para que alguien les atienda. Aunque físicamente pegados, se les ve ajenos, y más preocupados de la misión encomendada que del cuerpo que les roza. No obstante, aprovechando movimientos circunstanciales sí que se han tasado mutuamente con inspección furtiva al descuido del otro. Son muchos más quienes también acosan a los camareros y éstos

no dan abasto. Uno trae las consumiciones a una zona muy próxima y eso provoca que ambos se aprieten hacia ese lado tratando de colocarse en mejor posición. Imposible; el camarero acude a otra llamada y vuelve a alejarse. Ellos dos se miran, ahora ya abiertamente.

– Yo creía que colocándome junto a una chica tan guapa los camareros me atenderían antes -dice él, abriendo la boca en exceso como si con ello su voz fuera más inteligible por encima del combinado de música y ruido ambiente.

– Si quieres empezar con buen pié, arranca de nuevo porque la chorrada que acabas de decir es de cuarentón cutre -responde ella sin dejar de mirarle directamente a los ojos. La distancia entre ambas bocas da casi como para beber del mismo katxi.

– Vaya hostia que hemos hecho entonces, ¿no? -dice él tratando de solventar el apuro con simpatía pero sin encontrar recursos como para salir del atolladero.

Hay un instante en punto muerto.

– ¿Acaso me sigues? -pregunta ella, pero por el tono y la expresividad de su rostro resulta evidente que la pretensión no es romper la comunicación iniciada-. Digo, porque te encuentro en todos los sitios.

– Eh, que yo no te sigo -lo acompaña con un movimiento de cabeza un tanto adolescente-. Además, aquí yo he llegado primero, tú venías detrás.

– Entonces será casualidad, porque desde luego que yo no te estoy siguiendo -concluye ella. Le da la espalda mientras vuelve a hacer gestos a otro camarero que se aproxima pero que pasa de largo. Nueva tentativa frustrada.

Ella regresa a su posición inicial y de nuevo está cara a cara con él, que ha tenido unos segundos para pensar en algo pretendidamente inteligente y recuperar el contacto verbal.

– Un refrán japonés dice que incluso el encuentro más casual está predestinado -dice él, finalmente, justo en el momento en el que un camarero se coloca frente a ella y escucha su pedido. Piensa que para una buena frase que se le ocurre y ella no lo ha oído. Jodida casualidad que en ese preciso momento llegara el puto barrero. En fin, así es la vida.

El camarero se lanza con rapidez y diligencia hacia los grandes envases de plástico y ella retorna la atención hacia él.

– Así que incluso el encuentro más casual está predestinado -dice con una sonrisa que propaga un cierto destello de chica mala.

– Sí, así es. Creía que no me habías oído.

– Sois los tíos los que no sabéis hacer dos cosas al mismo tiempo -se ríe-. ¿Así que casualidad predestinada?

– Si.

– ¿Es eso lo que dices a todas las que sigues?

Nada más terminar la pregunta se gira hacia el camarero, que llegaba en ese momento con el katxi de cerveza. Le da el importe exacto en un billete, coge el envase y se da la vuelta encarando la puerta de salida del bar. Lo hace con cuidado para no derramar nada del contenido y en la maniobra queda cuerpo a cuerpo con él.

– Si volvemos a tropezarnos en el siguiente -dice ella mirándolo casi hacia atrás para poder tenerle de frente- podemos charlar sobre eso de la casualidad predestinada. Pero no me sigas, ¿eh?, que si no, no vale- se ríe.

No le da tiempo a él a decir nada porque en una fracción de segundo son ya varios cuerpos los que se interponen entre ellos. Se limita a verla marchar. Luego vuelve la mirada a la barra y comienza a llamar al camarero con particular vehemencia. Piensa que si sale rápido igual puede ver hacia dónde se dirige la muchacha y ayudad, así, un poquito a la casualidad.

Ha tenido suerte y sus plegarias han sido atendidas, pues ha logrado que le sirvan inmediatamente. Así que coge el katxi y sale a empellones siguiendo el presunto rastro dejado entre el personal. Nada, ni tan siguiera la huella de su aroma ha quedado tras ella. En verdad, hay demasiadas fragancias corporales como para seguir una pista así. Alcanza el exterior pensando que tal vez se la encuentre allá besándose con su chico o con su chica; y entonces le regalará una sonrisa malévola de bruja de cuento para adultos.

No está ahí afuera. Entrega el katxi a sus amigos.

– ¡Habéis visto la chica que ha salido algo antes que yo? -les pregunta.

– Si no das más pistas...

* * *

En el tiempo inmemorial en el que regían los dioses de nuestros antepasados, Ortzi, el Señor del Firmamento, controlaba desde la cúpula celeste las fuerzas de la Naturaleza aérea. El rayo, el trueno, las tormentas; todo ello estaba en sus manos, así como las nubes, los vientos o la lluvia. La Abuela Sol, Eguzki Amandrea, hija de la Madre Tierra, Amalur, lo cubría todo con su abrazo de cálida luz.

En los confines de Ortzi, al este de la Vía Láctea, vivía su hija Argine, que tejía las nubes con hilos de luz y humedad y les daba las formas caprichosas de sus sueños. También cantaba con la brisa hermosas canciones que tranquilizaban a las ovejas mientras pastaban.

Sobre Amalur, al oeste de las sombras, Zelai, hijo de Basajaun, cuidaba sus rebaños. En las lánguidas horas de su tarea observaba la evolución de las nubes en el cielo y dejaba que su joven y febril imaginación se desatara al amparo de las formas que adoptaban. Esas formas le contaban historias. Zelai era feliz en sus fabulaciones porque le proporcionaban alas para un universo en el que no había límite alguno, ni principio ni fin; igual que en el firmamento de Ortzi.

Creando historias sobre las evocaciones que le provocaban las formas de las nubes ere inevitable que un día se pusiera a pensar cómo sería la hija de Ortzi que, al este de la Vía Láctea, las tejía. Sabía porque así se lo había contado su padre, Basajaun, que la misma hija de Ortzi que tejía las nubes era también quien con su canto quietaba las ovejas. Su voz le arrobaba.

Una tarde de abril en que la brisa entonaba una melodía de particular belleza trató de buscar el rostro de Argine en las formas de las nubes del horizonte crepuscular. Lucían particularmente hermosas, recortándose su blancura irreal contra un cielo de malva y melocotón que según el punto cardinal evolucionaba hacia el celeste o hacia el azul profundo de cobalto.

Cuando Eguzki Amandrea se acostaba sobre Amalur, y por circunstancias de esas que únicamente tienen lugar en los universos mágicos, resultó que Argine y Zelai se descubrieron mutuamente.

Desde entonces, Argine y Zelai se amaban cada atardecer en el indefinido espacio en el que se funden las luces oblicuas del sol crepuscular con las alargadas sobras que extienden sobre Amalur su púrpura manto onírico.

* * *

Ha pasado cerca de una hora y no ha vuelto a verla ni junto a barra alguna ni entre la barahúnda desmadrada que ocupa las calles de Iruñea. También es cierto que si al principio puso cier-

to interés en tratar de descubrirla entre el follón festivo, al final se le acabó pasando la fiebre.

Se abre un hueco una vez más para conquistar la enésima colina tabernaria de la noche, esta vez en una txosna. Un cheque con el hombro, un empujón y un salpicón de cerveza engalana su camisa a la altura del pecho. Parkatu. Lasai. Se vuelve para afrontar el par de metros que le separan de la barra y nomás esquiva una pareja que vuelve a toparse ante la chica perdida.

– ¿Otra vez la casualidad? -pregunta ella y su aliento tan próximo le turba.

– Será eso, porque te aseguro que ya no me acordaba de ti -se hace el indiferente.

– Entonces, adio -se gira y sigue adelante abriéndose paso.

– Eh, espera, que ése no era el trato -la sigue a empellones contra el personal circundante.

– ¿Trato? ¿Qué trato? -se ha parado porque está ya pegada a la barra. Sin esperar respuesta, comienza a llamar la atención del camarero.

– Dijiste que si volvíamos a encontrarnos pensaríamos qué significa esa casualidad -el movimiento de la gente hace que sus cuerpos estén en más que un interesante contacto íntimo.

– ¿Sí? ¿Y qué significa? -pregunta ella dejando de mirar durante un momento hacia el interior de la barra.

– No sé, habrá que pensarlo, ¿no?

– ¿Y dónde lo pensamos? -lo dice dándole la espalda mientras le pide la consumición al camarero prácticamente al oído porque la música atruena. Quizás es algo punk lo que suena.

Cuando retorna a él, éste continúa:

– Mejor lo hablamos en un lugar más tranquilo.

– Supongo que eso, como lo del refrán ese de la casualidad, es lo que le dices a todas -coge el katxi, deja el dinero sobre la barra y se enfila hacia el exterior -. Eres tan previsible que estropeas el encanto de la casualidad.

– ¿Cómo lo hago entonces? -lo dice gritando porque ella está ya lejos.

– Déjate llevar.

Hay tanto ruido que no llegan a él los sonidos de las palabras pero las lee perfectamente en sus labios. Casualidades del flujo de las mareas, se ha abierto sorpresivamente un hueco entre dos cuadrillas que bailan y por ese intersticio alcanza a verla por primera vez en cuerpo entero mientras se aleja. Lleva unos vaqueros desgastados que podrían parecer un par de tallas más de las precisas de no ser porque dibujan a la perfección con sutiles trazos magistrales su magnífica arquitectura posterior. La camiseta blanca de tirantes es bastante ajustada y deja patente una espalda recia coronada por el pañuelito rojo de San Fermín con el nuco ladeado.

Otro movimiento de las mareas y se le frustra la contemplación. Nuevamente contrariado, se centra en la heroica misión de conseguir bebida para la cuadrilla. Ya había empezado mal la noche cuando se jugaron a los chinos quién llevaba el bote y le tocó a él la china.

* * *

La relación iniciada aquel atardecer entre Argine y Zalai llegó a tal punto de amartelamiento que la muchacha comenzó a descuidar su labor de tejedora de nubes y, por el contrario, cada vez era más apasionado su canto con la brisa. Zelai la escuchaba embelesado durante el día mientras cuidaba su rebaño, y aunque cambió su talante a mucho más alegre y animado no le contó a Basajaun nada sobre su relación con Argine.

El abandono de la tarea al este de la Vía Láctea acabó siendo tan notorio que acabó llamando la atención del propio Ortzi. Habló de ello con su hija en varias ocasiones pero no llegó a conclusión alguna que no fuera la certeza de que Argiñe le estaba ocultando algo importante.

Una tarde en la que Ortzi organizaba el majestuoso ceremonial de una tormenta de verano y ordenaba la confección de pesadas nubes negras observó que el telar de su hija Argine se encontraba vacío. Convencido de que podía descubrir el secreto que la joven tan celosamente guardaba, salió en su busca. Y así fue que en la obertura de una tormenta estival Ortzi encontró a la pareja amándose al amparo de la blanquecina luz solar que

se filtraba entre los espesos nubarrones marengo. Miríadas de sorgiñas revoloteaban alegres en esa inquietante luminosidad que en algunos tratados sobre la materia denominan de brujas. Todos los elementos esperaban la tormenta y permanecían ajenos a los amoríos de Argine y Zelai. Pero no así el Señor del Firmamento.

El enfado fue épico, y aquella tarde tronó el cielo como nunca y cayeron rayos hasta cifras que no reconocían más números.

* * *

Para poder beber tanto hay que miccionar como es debido. Se separa de sus amigos en busca de un wáter portátil, por aquello del civismo y de no enguarrar las calles de la capital de Euskal Herria más de lo debido. Está colocado ante una de las cabinas para esperar a que salta quien se encuentra en su interior, pero lleva a un par de minutos ahí parado y comienza a dudar si va a poder aguantar. Mira a los lados buscando un emplazamiento alternativo para aliviarse y cuando está a punto de dirigirse hacia un lugar que le ha parecido suficientemente adecuado y próximo escucha el ruido del pasador y se abre la puerta.

Aparece la muchacha.

–Te juro que no te sigo. Me estoy meando -le dice, sorprendido al verla de nuevo. Resulta evidente que no se lo esperaba.

El se queda clavado, sin decidirse a entrar.

– ¿No decías que no aguantabas? -ella se ríe.

– Así es, pero...

– Sigues con el asunto de las casualidades predestinadas.

– No me jodas, llevamos toda la noche tropezándonos.

– ¿Y?

– Pues que algo querrá decir.

– Casualidad, sin más.

– ¿Eso es todo? Es una casualidad, y adiós -gesticula de forma un tanto patética.

– ¿Qué más, pues?

– No sé.

– ¿Tú no te estabas meando? - sigue sin soltar la puerta. Casualidad o no pero en esos momentos no hay nadie más requiriendo los servicios del urinario público. Extraño, pero así es.

– Sí, pero...

– Pasa y luego sigues -le hace un gesto con la mano libre.

– En cuanto se cierre la puerta te irás.

– Quién sabe.

Entre la imperiosa necesidad de evacuar y los vapores etílicos acumulados en la parte superior de la cabeza, no se encuentra en su mejor momento para razonar. Así que pasa al mingitorio deseando que otra feliz casualidad vuelva a ponerla en su camino.

Antes de salir del urinario mira el reloj. Piensa que no tiene pinta de ser de las chicas que duermen tiradas en cualquier esquina, que más bien es de las que racionalizan el desfase y duermen en lugar decente con cama y ducha. Siendo así, es ya demasiado tarde para seguir jugando a las casualidades.

Abre la puerta y allá afuera no está. Era lo esperable, piensa. Ahora tendrá que ponerse a buscar a sus amigos porque se ha separado del grupo sin decir nada. Como ya no queda ni un céntimo en el bote seguro que ni le han echado en falta. Cuadrilla de ingratos.

– Aizak!

Alguien le llama desde un banco próximo. Vuelve a ser ella. Se aproxima con una sonrisa un tanto tonta dejando el váter portátil a su espalda.

– ¿Creías que me había ido? -pregunta sin levantarse del banco, y lo hace con malicia.

– Pues sí.

– Pues no.

– Pues ya lo veo.

– Claro, es evidente.

Se abre un silencio en el que se recorren con la mirada.

– ¿Tomamos algo? -dice él, utilizando una fórmula habitual en estos casos.

– No, ya he bebido demasiado.

En verdad, ésa no es la respuesta correspondiente en relación a la pregunta formulada. Lo que suele ocurrir en estos casos es que cuando alguien dice lo de ¿tomamos algo? la otra parte acepta la invitación aunque luego no tome nada y así arranca el protocolo. Pero ella ha dicho directamente que no quiere tomar nada y, encima, no ha propuesto alternativa alguna. ¿Qué hacer en una situación así?

Ella extiende el brazo y toma la mano de él.

– ¿Por qué no te sientas aquí? -la voz es sugerente.

No puede eludir la invitación, y sin soltar su mano toma asiento junto a ella. El tacto le transmite una emoción desconocida.

* * *

Más que amores furtivos, lo que a Ortzi le enojó fue que Argiñe descuidara su tarea de tejedora de nubes. En el universo de las fuerzas mágicas de la Naturaleza todo está en perfecto equilibrio. No hay tarea más importante que otra porque todas actúan en una única armonía fabulosa que mantiene infinito el ciclo de la vida y de la muerte de la que vuelve a brotar vida. Es el giro del lauburu que hace eterna Euskal Herria. Por eso, quien hace nubes debe de hacer nubes, le explicaba Ortzi a su hija Argine para recordarle la responsabilidad de su trabajo.

El Señor del Firmamento consideró que la irresponsabilidad cometida por los jóvenes debía de tener un escarmiento. Consultó con Amalur y con las amandres Ilargi y Eguzki. Entre todos resolvieron que no hay amor que deba ser prohibido o castigado porque ese sentimiento transciende incluso a los principios de bien y mal. Sin embargo, como el abandono de una responsabilidad debía entrañar algún tipo de pena, fallaron que Argiñe y Zelai únicamente podrían ayuntarse durante el séptimo día del séptimo mes.

Y así es que por la facultad que les otorga el formar parte del universo mágico de nuestros antepasados, Argine y Zelai se reencuentran cada año en el séptimo día del séptimo mes y dan rienda suelta en absoluta libertad a todos sus deseos.

* * *

Está amaneciendo y el cielo se ve limpio, con el pálido azulón de un día radiante que se despereza. Aunque por los alrededores, a bastante distancia, eso sí, se ven cuerpos arrojados al suelo por la fiesta en posturas bastante deplorables, la imagen de ellos dos ovillados resulta enternecedora. Para nada ofrecen el aspecto de dos desconocidos a quienes la casualidad haya juntado algunas horas antes. Es más, parecen envueltos en un aura de particular belleza. Se antoja imposible poder alcanzar semejantes conclusiones de la simple escena de una pareja tumbada sobre la hierba. Y será así, pero resulta evidente que de ellos dos emana un halo de magia inefable.

Lentamente, ella abre los ojos. Sin mover la cabeza observa los alrededores en lo que la perspectiva de la postura se lo permite. Siente una luz cálida humedeciendo amorosamente su interior. Sonríe desde lo más profundo de su intimidad. Junto a sus labios dormitan los de él. Los besa con la misma ternura de la niebla baja. Se separa ligeramente y aplica igual caricia en la suave cúpula de los párpados cerrados del muchacho. Es como un sutil banco de neblina húmeda sobre las plácidas aguas de un arroyuelo.

Tratando de no despertarle, se despega de su cuerpo y se incorpora. La camiseta blanca tiene el verdoso velo de la hierba. Adecenta como puede su ropa y coloca debidamente el pañuelito rojo de sanfermín. Le mira por última vez, y en la atmósfera que les rodea coloca un beso extático. Entonces él abre los ojos. Se miran sin decir nada compartiendo durante unos segundos el fascinante universo en el que no existen las palabras.

Luego, ella se da la vuelta.

– ¿Te vas? -pregunta él.

– Sí, tengo que regresar -responde ella, girándose para mirarle.

– No sé ni cómo te llamas.

– Argine

Se va. No sabe porqué pero él es consciente de que debe de ser así.

## Epílogo:

En la leyenda japonesa de Tanabata, Kengyû es una estrella hija del Señor del Cielo que vive al este de la Vía Láctea y que se dedica a tejer. Shokuyo es pastor y reside al oeste de la Vía Láctea.

Por esas circunstancias del universo mágico, Kengyû y Shokujo se conocen y se enamoran. Pero la relación entre ambos es tan apasionada que existen tan sólo el uno para el otro y descuidan sus responsabilidades.

Así las cosas, el Señor del Cielo condena a los amantes a verse tan sólo una vez al año, y fija ese día como el séptimo del séptimo mes.

Es lo que cuenta la leyenda de Tanabata sobre las estrellas Kengyû y Shokujo. En ese día de fiesta se escriben deseos en una tira de papel.



**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**
1958
Eibar

2000. urtetik hona daukate espetxean.
Liburu bat argitaratua dauka:
"*Ametsen txokoan bizi naiz*". 2011. Ataramiñe.
.



C.P. Puerto I
Ctra. Jerez-Rota, km. 6,4
Apdo. 555
11500 Puerto de Santa Maria
Cadiz

## Hogeita hamar urte espea

1
Hogeita hamar urtetan
zigortuta karteletan, (BIS)
etxea ametsetan
datorkizu gauetan,
sukaldearen usaia
sendiko giro alaia.

2
Jausi zinen sarekadan
etsaien atzaparkadan, (BIS)
egunen errenkadan
torturen adarkadan,
eutsi zenion goiari
erronka mingarriari.

3
Kartzelan goibel gaztetan
garai jorien kaltetan, (BIS)
larri hastapenetan
itota aienetan,
kideen babesarekin
sendoki zenuen ekin.

4
Sakabanaketarena
krudelkeria alaena, (BIS)
zure amaren pena
eta herritarrena,
gutunak dira arnasa
bisitak pozaren nasa.

5
Maitea pentsamenduan
dabil isolamenduan, (BIS)
zirraraen munduan
hurbil sentimenduan,
etortzen den bakoitzean
lo hartzen du bihotzean.

6
Espetxearen aroa
igaro da gaztaroa, (BIS)
bizipenez naroa
dakusazu geroa,
sasoia baliatzeko
izadia gozatzeko.

7
Gaur zure azken eguna
kalera zoaz laguna, (BIS)
bizimodu zurruna
bihurtu da lurruna,
zain duzu Euskal Herria
asetzeko egarria.

8
Kartzelako atarian
lagun minak agerian, (BIS)
herriko aldirian
malkoak ezarian,
lehenengo aurreskua
bukatu da mendekua.

9
"Kaixo jolasen ibaia
goiko mendiko talaia", (BIS)
piztu zaizu bisaia,
zirt berpiztu kuraia,
irainak lurperatzeko
aberrian uztartzeko.

10
Zurekin maitez aurrean
gutarrak gorazarrean, (BIS)
dardara bularrean
kilimak paparrean,
"euskaldunaren indarra
amnistiaren pindarra".

*2011ko apirilaren 17an*

## Joan zaizkigun kide gaixoei maitez

1
Kartzelak utzi zaitu
zurbil, hebaindua,
larri gaixotu zara
zabiltza hildua,
maite duzu bizitza
herri zapaldua,
uxatu nahi zenuke
gogotik gandua,
onduta ikusteko
aberri mindua.

2
Lurrari eskainita
tinko gaztaroa,
urrun izan zenuen
goxo abaroa,
sarean jausi zinen
kaltetu geroa,
pairatzen ari zara
mendeku eroa,
sentitu nahi zenuke
etxeko beroa.

3
Kartzelak zurekiko
arreta eskasa,
mina arindu duzu
sarri zure kasa,
gaixoen egoera
makur eta basa,
sendagile batzuen
jarrera jolasa,
osasun arloa da
erabat narrasa.

4
Espetxean gaixorik
bikoitza zigorra,
gaua minez igaro
zinez da gogorra,
zure hitz jarioa
dago lar agorra,
justizia zurekin
itsu eta gorra,
esperantzen zelaian
dihardu txingorra.

5
Aske utzi zaituzte
hutsak estaltzeko,
herritarren oihuak
zerbait isiltzeko,
aurkitzen zaren arren
herren ibiltzeko,
iritsi zara garaiz
sendia gurtzeko,
presoen lagunei
maitez eskertzeko.

6
Zirimiriak gaitu
busti barra-barra,
zure ilunaldean
ari du negarra,
etorriko da galant
gure ostadarra,
histura bihur dadin
bihar irrifarra,
amnistiarantz zoaz
taupaden ifarra.

*2011ko apirilaren 23an*

## Puertorako autobusa

1
Hor dator abegikor
Puertorako busa,
astero dezakegu
erosoki usa,
ideia zoragarri
ugariren musa,
euskal presoentzat da
gaitzen errefusa,
berari esker zaie
urtzen malerusa.

2
Autobusean gara
Gasteiztik atera,
maitagarriak dauden
kartzelen aldera,
harantz doa bihotza
guztiz alegera,
goratzeko beraien
jarrera onbera,
konpartitzeko amets
ederrak batera.

3
Bidaiaren xedea
euren kontaketa,
presoei ekarri
gure arnasketa,
autobusak eskaintzen
digu hurbilketa,
gozoro senideen
arteko hizketa,
esperantzak hazteko
arimen gehiketa.

4
Autobusean doa
espearen ama,
umorez uxatzen du
tristuraren zama,
semeak deitzen dio
Anbotoko Dama,
dakarkio herriko
kaleen arrama,
bidean jasotako
koloreen gama.

5
Haurrak penintsula dau
lotan zeharkatu,
autobusa ohitura
zaio bilakatu,
ohi duen eran dio
aitxari eskatu,
"kartzelan gura nuke
ama musukatu,
bere larru leuna
goxo ferekatu".

6
Neguan eta udan
gertu aisietan,
autobus barrenean
ordu luzeetan,
politika kriminal
baten erpeetan,
txalaparta zarete
ziega urrunetan,
goizeko zohardia
une ilunetan.

*2011ko maiatzaren 29an*

## Kirola kartzelan

1
Kartzela eta kirola
hemen hitz ezagunak,
tamalez euren arteko
harremanak aizunak,
porlanak lagatzen ditu
giharrak net zurrunak,
janariaren koipeak
gorputzak lar astunak

2
Kirolaren helburu bat
erre umore txarrak,
atzean utzi lasterka
pentsamendu kaskarrak,
biraka zabiltzanean
gogoan herritarrak,
itzuliko dira noizbait
antzinako aparrak.

3
Izerdiarekin doaz
etsipen sakonenak,
estresak eragindako
ondoez larri denak,
kirolak urtzen dizkigu
aise kezka gehienak,
zuekin egin ditzagun
amets atseginenak.

4
Bihotza eroso dabil
arnasa neurtuta,
hobeto doaz zangoak
taupadekin batuta,
saioa bukatuko dut
pixka bat nekatuta,
berehala suspertzeko
maitea oroituta.

5
Kiroldegian pilotan
dihardugu hormetan
besoak eta gerriak
astinduz partidetan,
herria sentitzen dugu
hurbil halakoetan,
hauspotzen zaigu punpaka
nortasuna zainetan.

6
Gorputz ariketak dira
guztiz beharrezkoak,
giltzadurak gozatzeko
zinez egundokoak,
kartzelak baldar nahi gaitu
harri antzerakoak,
aberriak aldiz malgu
ihi tankerakoak.

7
Kirola dagigu gogoz
osoro bizitzeko,
osasuna zaintzen dugu
geroa laztantzeko,
askatasunaren nahia
naro elikatzeko,
Euskal Herria zugana
ganoraz itzultzeko.

8
Egun handian ditugu
ateak birrinduko,
ziegako mamu zitalak
betiko aldenduko,
espetxetik lerden gara
korrika urrunduko,
arrats gorrian garaile
besoetan bilduko.

*2011ko ekainaren 26an*

## 111000O111

1
Zenbaki bat zarenean
kartzelaren barrenean
soa duzu porlanean,
murru grisean ezerezean
diziplinaren menean,
zabiltza hits aienean
lur jota etsipenean
likurik narrasenean.

2
Ez bat baizik eta hamar
digitu edo atzamar
bilaka zaitezen zamar,
zu erabiltzen ari direnez
bizi zara sorgor samar,
esan kartzelari marmar,
“nire grazia da Aimar
eta baserria Zumar”.

3
Kartzela oro da putza
burmuinarentzat bisutsa,
sute txar baten errautsa,
pot zaudenean belztura latza,
galernak dakarren hautsa,
zabaldu iraultzen kutxa
zuzendu trebe barautsa,
pitzatu zenbaki hutsa.

4
Zenbaki bat da kartzela,
horixe ziren Mandela
eta bere zigor-gela,
hamar digitu ditu zeureak
gogoratzeko zarela
zikoinen zolan igela,
zurtz galduta urmaela,
kateen mende mengela.

5
Zenbakia da kodea
zu zapaltzeko moldea,
deituren izenordea,
espe bihurtu zinen urtea
gizentzeko artaldea,
Mandelak zuen ordea
militanteen fedea,
Hegoafrikan xedea.

6
Behatu xalo zerua,
sendatu zure burua
baztertuz estakurua,
kendu gogotik zenbaki hotza
eta bere ingurua,
aldatu gaur asturua
ukitzeko helburua,
askatasunen zorua.

7
Izan zinena oroitu
ziegan amestuz berritu,
hola kartzela gainditu,
zenbakiari ertzak higatuz
mamu gaiztoa garaitu,
kideen kantak aditu,
euren babesa sentitu
esperantzak konpartitu.

8
Bisaian dabil irria,
maiteminaren zirria
osatzeko gaitz larria,
zuk ere duzu sostengu on bat
deitzen da Euskal Herria,
larrua eta harria,
geroaren oinarria,
arimaren pizgarria.

*2011ko abuztuaren 21ean*

## Ero espetxean

1
Itxaropenik gabe
preso eta ero,
jaio behin izateko
jendartean zero,
urtetan daude zulo
hauetan bezero,
txit argi dakiela
adimena gero.

2
Burmuina irakiten
kartzela hotzean,
mamuekin borrokan
ziega tzar hitsean,
drogek dituzte laga
trokaren ertzean,
epai bidegabeek
ezerez hutsean.

3
Egunero dabiltza
zoramen honetan,
gurekin nahasita
patio grisetan,
Lurrean baino soa
dute zeruetan,
gorputzak abailduta
dautza bazterretan.

4
Psikiatriko bat da
gaur egun kartzela,
gaixoak dira hemen
kopuru itzela,
karranka doa euren
bizitza txepela,
pilulen eraginez
oraina tunela.

5
Gaixo psikiko franko
dago kartzeletan,
psikopatak ordea
daude kasernetan,
hor ari dira ero
guda koldarretan,
txiroen kontra maltzur
mila liskarretan.

6
Ospitalean daude
zoro gutxiago,
kartzelan giltzapetzen
dituzte gehiago,
estatuarentzat da
askoz merkeago,
gaixo gizajoentzat
aldiz krudelago.

7
Zoroak espetxean
ez dira osatzen,
porlanak gogor die
osasuna txartzen,
gaitz ditu diziplina
itsuak zigortzen,
bizimoldea zaie
horrela iluntzen.

8
Aukera bat nahi dute
sena zuzentzeko,
kalearen giroan
berriro sartzeko,
etxekoen zirriak
bero sentitzeko,
ekiaren izpiak
aske gozatzeko.

*2012ko urtarrilaren 15ean*

## Euskal Preso Politikoak

1
Marlaska eta bere kideak
dantzuzkigu zirikatzen,
sugegorriak lez ari dira
edena maltzur ziztatzen,
horiek baina oker dabiltza
gure larruak hozkatzen,
irmo darraigu zintzo batuta
etorkizuna garatzen.

2
"Ez dago preso politikorik"
esan du petral jujeak,
burua dio gogor astindu
Urte-Berriko ajeak,
egia dabil egurtu nahian
gezurren asmatzaileak,
Euskal Herria minduta daukan
gatazkaren babesleak.

3
"Argazkirik ez" esan du zakar
Auzitegi nazionalak,
gorrotoaren erabakiak
izaten dira tamalak,
presoen alde jendez mukuru
daude karrika zabalak,
bisai duinetan daramatzate
heien irrifar apalak.

4
Epaileak du esan harroki
eragiteko sumina,
amnistiaren xedea dela
guztiz bideraezina,
gure presoek merezi dute
bihotzen ahalegina,
nahiak gehituta lortuko dugu
dirudiena ezina.

5
Ziegan dagoen lagun jatorra
ez da ustel aberastu,
ezta ere txar irabazpide
ilunen zolan nahastu,
bere gogoa dauka txokoan,
ez hori inoiz ahaztu,
zuzen konpondu nahi du liskarra
denon bizitza erraztu.

6
Politikoak dira espeak
hala zen euren borroka,
garai berria nahi dute zertu
askatu hitzari soka,
beleari bost zaio axola
gustura dabil mokoka,
ken diezagula euskal bidetik
lege gaiztoen arroka.

7
Urtarrilaren zazpia dago
presoen oroimenean,
zirrara eta ufa ugari
porlanaren barrenean,
ilusioa indartu zaigu
nabaritu dugunean,
kartzeletako giro alaia
Eki altxatu denean.

8
Gurekin behar ditugulako
euskal presoak etxera,
gau beltz batean galdu zituzten
sustrai sakonen aldera,
kemenak jaso du esperantza
kabian dugu ostera,
udaberrian gerta dadila
enararen itzulera.

*2012ko otsailaren 5ean*

## Kideak garelako

1
Kontzientziak garbiki dit
esaldia diktatu,
berehala ohar nadin
hitz apalez aitatu,
"sakon behar zenituzke
kide denak maitatu,
eskua bero luzatuz
bizipoza sustatu".

2
Zu zinen nire mitoa
ustezko eredua,
elkar ezagutu dugu
erori zait mundua,
izaera zakarrak dit
mindu sentimendua,
aldatu egin da goibel
nire pentsamendua.

3
Kide jator jardun, arren,
gertuko lagunekin,
ez izan jarrera txarrik
erkide fidelekin,
sarritan beharko duzu
aritu beraiekin,
ondu nahi duzuelako
herria ekintzekin.

4
Begirunez har ezazu
zure ingurukoa,
askatasunaren alde
ari den kidekoa,
musu-truk dabil zintzoki
nortasun onekoa,
bere bihotz onberak du
taupada herrikoa.

4
Ideiak eta praktikak
erabili batuta,
edonon izan itzazu
gozoro uztartuta,
iparrorratzak duen lez
iparra markatuta,
eduki ezazu beti
atsegina piztuta.

6
Gorrotoaren azpian
ez dago iraultzarik,
ezingo duzu horrela
zertu utopiarik,
jenio zitala utzi
urruti ostendurik,
izan zaitez iraultzaile
xextrak indargeturik.

7
Euskal zelaia nahi nuke
pozarren elikatu,
gure alde bizitzeko
behazuna ukatu,
gu gutarrak garelako
ozen aldarrikatu,
ezinikusia baino
hobe dela barkatu.

8
Goiz-argian hitz polit bat
akabo haserrea,
aurpegietan hasi da
zoragarri barrea,
atzean geratu zaigu
eguraldi arrea,
eguzkiak gozatu du
harremanen larrea.

*2012ko martxoaren 25ean*

## Anaien (arreben, ahizpen, neben) elkartasuna

1
Anaien elkartasuna
kartzelan da osasuna,
ziegan dabil oihartzuna,
pozarren diot "Eskerrik asko"
oro dira ontasuna,
uxatzeko histasuna
dakarte alaitasuna,
behar dudan maitasuna.

2
Urteak dira metatzen
kartzelan latz kiribiltzen,
ahaztura dute zertzen,
eurak ordea nirekin daude
nekeak maitez baztertzen,
hilero naut laztantzen,
zoriona oparitzen,
xaloki ditut agurtzen.

3
Anaiak eta kideak,
elkartu gaitu oldeak,
urtetan errepideak,
ez dugulako urruntzerik nahi
batu ditugu bideak,
gure atzoko aldeak
irauli ditu kordeak
hurbilduz bihotz gordeak.

4
Gurasoen akordua
anaien sentimendua,
bete dute agindua,
babesten naute irrien truke
ontzeko bizimodua,
etzi dugu hitzordua,
jasoko dut ukendua
arin joango zait gandua.

5
Zenbat gauza esateko,
oroimena ereiteko,
gerokoa marrazteko,
gogoa beti dago irrikaz
anaiekin egoteko,
berri onak entzuteko,
fin erroei eusteko,
gurasoak goresteko.

6
Bero anaien giroan
desio bat dut eroan,
gerta dadila geroan,
gaurko arnasa nahi nuke jator
itzuli txit luzaroan,
goxo euren abaroan
nago horren esperoan
konponketaren aroan.

7
Juezari diot esana
alferrik dela afana
hausteko gure izana,
etorkizuna dirdai dakusat
hola dabil harremana,
zain dut Debako harana,
bihar kartzelen porlana
anaiontzat iragana.

8
Kartzelan dugu pindarra
euskal arimen indarra,
laister dator goizabarra,
Iñigo eta Paul zoragarri
dakarkidazue garra,
moztu duzue laharra
haz dadin aske belarra,
esperantzaren zuztarra.

*2012ko apirilaren 8an*

## Ilargia kartzelan

1
Bero dagi ohean
gaurik motzenean,
aurten sargori dator
uda porlanean,
ilargia dotore
ametsen unean,
zirrara eragin dit
taupaden gunean.

2
Iretargi zuria
izaren barnean,
bere distira daukat
dirdirka soinean,
bizipoza hazi zait
naro garunean,
askatasuna dantzut
deika gauminean.

3
Udan galanta dugu
ilargi betea,
edertzen du osoro
gaueko tartea,
berarekin urrun dut
sentitzen katea,
gogoan zaudelako
irritsu maitea.

4
Ilbehera dakusat
polit iluntzean,
mihise txit morea
duela atzean,
Artizarra du gertu
izarren pentzean,
gure arimak dira
pozten behatzean.

5
Ilargia ortzian
ostentzen denean,
begiak ixten zaizkit
hits belztasunean,
argia bilatzen dut
ziega ilunean,
zurekin oroitzetan
batzen naizenean.

6
Ilgorarekin sarri
dardara ugari,
kirioak ei dira
jartzen lar dantzari,
loa dio laburtzen
kezkatzen denari,
kartzelan maitearen
zain dagoenari.

7
Goizean esnatu naiz
ilargirik gabe,
orain eguzkia da
larruaren jabe,
etorriko zait gero
ia oharkabe,
bizi nahi nuke bihotz
zurekin lokabe.

8
Ilargi borobila
otsoen lur mina,
musa agortezina,
maitaleen grina,
emakume haurdunen
goiko emagina,
gatibuen desiren
izpi atsegina.

*2012ko uztailaren 29an*



**Zigor Garro Perez**
1975
Orereta

Atxilotze data: 2006ko azaroak 29.



Fresnes - Maison d´arrêt
3, Allée des Thuyas
94261 Fesnes Cédex
Frantzia

## Dagbok

Hondartza bat. Oihalezko aulkitxo batean jarrita nago, oinak uretan, paisaia margotzen, itsasoko brisak azala laztantzen didala. Hodei zirpildu bakan batzuk zeru urdinean, tximeleta zuriak nire gainean hegaldi nahasian. Kresala sentitzen da airean, eta, nire gibelean haurren barreak, katilu eta plateren txilin hotsak.

Neska beltzaran bat, artilezko soineko zuri eta estu batez jantzia, itsas ertzera ematen duten harrizko eskaileretan behera. Grazia dario. Nire aurrean belaunikatu da, eta hizketan hasi zait. Begi marroi handiak ditu, ile gaztainkarak, aurpegi borobila, ezpain mamitsuak. Ile-xerlo batek begia estaltzen dio. Burua nire bularrean jarri du eta besarkatu egin dut. Hagitz ongi sentitzen naiz, bare.

Eskuekin aurpegia hartu diot neskari, eta ezpainen ertzean musukatu dut. «Zu ikustera etortzen naizenean aztoratua sentitzen naiz, amets batean bezala pasatzen dut arratsaldea», esan dit, eta gero: «Ez diot etortzeari utziko».

Umeen oihuak gerturatzen ari dira, trostan edo. Hor datoz hiru umeak, lilipa hori-kolorekoek jositako belardian behera lasterka.

Klank! Klonk!

«*Petit déjeuner!*». Gosaria.

Kanpoan, txoriak txioka, *kui-krui-kui-kruk*.

Ez al dira aluzinagarriak ametsak? Albert Camusen *La Peste* irakurtzen ari nintzen, Lyongo hirian, ametsen garrantziaz jabetu nintzenean. Ametsik gabe ezingo genuke geure pentsamenduen haria inoiz eten. Erotu egingo nintzatekeen. Liburua erbesteaz ari zen, etxe hartan geunden guztiok gure azalean bizi genuenaz, eta guztiei alamena ematen ibili nintzen, derrigorrezko irakurketa zela, *errebelatzailea*, eta abar. Liburuek memorian txirikordatzeko abilezia handia daukate. Edo again neu naiz txirikordatzen dituena. Orainetik nire gaztaroraino liburuz-liburu joan nintekeen, niri bizitzako geltokiak balira bezala. Batzuetan zalantza egiten dut, gogoratzen dudana benetako gertakizuna edo liburua ote den.

Sagar-zuztarra murtxikatzen ari naiz, umetatik egin dudan bezala, mahai gaineko ogiari begi ertzetik begira. Luzaroan uste izan dut memoria gure historia dela, baina memoria hutsa bagina, gure subkontzientean ikusi ahal izango genuke, eta subkontzientea esploratzerik balego, ez legoke subkonzienterik. Subkontzienteak ezin du memoria izan, baina gu, izan, subkontzientea *ere* bagara.

Carabanchel, adibidez, ez dakit memoria soila edo subkonszientea edo biak ote den. Funtzionariek, lehen gauean, *Tensión* izeneko liburu bat eman zidaten. «*No hay libros*» zioten hasieran, edo «*ya veremos mañana*» (munduko kartzelari guztiek neoizko argiz ikusten duten esaldia), baina hantxe zegoen liburuen organtila, eta nire setakeriaren aurrean, etsitzea beste irtenbiderik ez zitzaien geratu. Ez guztiz, ordea, liburuaren erdia eman baitzidaten. Ospitale batean hasten zela uste dut, baina zer axola dio, liburu txarra zen. Unairi *Reader´s Deagest* aldizkariak argitaratutako nobela bilduma bat eman zioten. Hasieran marmarka ibili bazen ere, azkenerako pozik zegoen, «interesgarria» omen zen

eta. Goizero lixiba ematen ziguten ziega garbitzeko. Hemen, garbiketarako gaiak eskatzean, bekainak uzkurtuz begiratzen zaituzte, bitxikeriaren bat galdetzen ariko bazina bezala. Goizean, «*on verra ça après*» diote, eguerdian, «*oui, oui, après*», eta arratsaldez, «*ce sera pour demain*». Uzteko pakean, alegia. Carabanchelen goizero-goizero pasatzen ziren lixibarekin, eta goizero-goizero garbitzen nuen ziega, eta gosaria iritsi zain jartzen nintzen leihoko hegian, mahatsak jan eta Josuk utzitako *Muy interesante* aldizkaria irakurtzera. Patxadaz gosaltzen nuen, patio ordua iritsi bitartean ahalik eta entretenituen egotearren. Gehienetan Unai eta biok bereizturik ateratzen gintuzten patiora, eta anaiaren ibilerak zelatatzen geratzen nintzen leihoan.

Ez da samurra anaia kartzelan ikustea. Eta min horren oihartzuna ziegaren lau hormatan biderkatzen dela sentitzea.

Gaua iristean kantuan egiten genion elkarri leihotik leihora, eta ondoren, nor bere bere ziegara bilduta, urgentziazko hitzak idazten genizkion elkarri, biharamunean burdinsareen zirrikituetatik elkarri emateko.

*Kaixo Xabi:*

*Jadanik 15 egun zeramakiagu itzalpean, eta zein tinko ari garen eusten ikustea oso garrantzitsua da niretzat.*

*Hik ondo asmatu bezala, falta zaizkidanenganako amodioak barrenak kiskaltzen zizkidak.*

*Zera pentsatu diat, hemendik atera eta berehala neure logela konpontzeari ekingo diogula, ez ni logelatik aldatzeko*

*(ez zeukeat inongo intentziorik), baizik eta elkarrekin lan egiteko. Horretarako. Asko gogoratzen nauk hirekin.*

*Maite haut anaiatxo.*

*Unai*

*P.S. Astearteko Egin irratiko programazioak Bill Evansi elkarrizketa iragartzen dik, ikusi al duk?»*

Manta tolestua buruko gisa paratu eta, ohean etzanda, *Le Nouvel Observateur* aldizkaria irakurtzen dut, baina ez dakit ezer ulertzera ailegatzen naizen, burua beste nonbait daukat. Non dago nire bozkarioa?

Klank! Klonk!

*"Bonjour, Beitia!"*.

Saint-Aignant funtzionari lotinantak diziplina-komisiorako hitzordua eman dit hesiaren hagen artetik. Atzoko irudiak etorri zaizkit, Sabin zaharra. Atzean loturik daramate, besazpietatik helduz, oin barrurantz okertuak arrastaka, trapuzko panpina baten moduan.

Pasilloa kartzelariez beteta. «*Allez, on l'embarque!*», eraman ditzagun! Aginduak eztarria urratu arte oihukatzeko ohitura. Lasaitasuna eskatuko nieke, halako eskariak tokiz kanpo ez baleude. Ilea filmeetako marineen modura mozturiko funtzioari mozkortiak garaipen keinua egiten du. Zuzendariak, nigana makurtuta, esku batez gorbatari eusten dio eta esaten du: "Taktika okerra

aukeratu duzue, *monsieur* Beitia". Infenuan ere *monsieur* esango lidakete animali hauek.

Lagun berria ekarri eta galeriaren batean utzi dute bakarrik (harrerako galerian, seguruen). Bakartzea onartuko genuela uste zuten. Baina ez dugu onartu, eta hara non gauden, isolamendurako bidean harrastaka. "*Allez, on est parti!*", diote funtzionariek, ganadua eramaten ariko balira bezala. Pozik dirudite.

Pasilloko lauza hori-berdeak, bota beltzak, galeriako burdin-hesi horixka... hankaz gora naramate. Barregarria litzateke, egia ez balitz. Dozena bat ate igaro ditugu, zulorako bidean. Usainean nabari da zuloaren sakontasun erabatekoa. Ezin da mundutik urrutiago egon. Han, amaieran, inoiz ikusi dudan gizonik handienak biluzteko agindu dit. Ausardia eta indarra falta zaizkit, baina nire eztarritik "ez" atera da. Gero begiak itxi ditut, eta hainbaten artean biluztu naute.

Gorden Virginia bat erretzen ari naiz. Izen kaskarinegia, zulo honetan erretzeko, baina ongi sartzen da. Kaieraren gainean makurturik idazten dut, leotz erraldoiaren erdian, zoruari lotutako burdinezko aulkian eserita, ateari begira, leihoari bizkar emanda. Mahaia, konketa, komun zuloa, hormak... ziega beste ziega guztien gisakoa da, baina zikinagoa. Inork ez du mendeetan inguru hau garbitzeko lanik hartu. Itxura kaskarra ziegak, *Le nouvel observateur* aldizkarian ageri den François Hollande presindenteak ez bezala. Traje urdin ilun akasgabea darama, zetazko gorbata gorriak lepoko haragi maskalak estutzen dizkio, eta armazoirik gabeko betaurrekoek ñabardura sofistikatu bat erantsi nahi liokete bere onberatasunari. Aurrez-aurre jarriko nuke hemen, ziegaren arkitekturaz berbetan, eta sozialismoaren

ikuspegitik egingo lizkiokeen mejora guztietaz. Joandakoan bere lurrin garesti horietako baten arrastoa utziko luke behintzat. Gutxi ez, hemengo kiratsa ikusita.

Aulkian trabeska jarri eta hor atzean dakusat, ohe-buruaren eta leiho aldeko homaren artean, isolaldiaren prebisioan hartu ditudan irakurgaiak, nire liburu kuttunak, pilatxotan. Ondoan, idatziak eta gutunak gordetzen dituen karpeta; belusezko pijama, beste paper pila baten gainean; bi ogi zati, beste horrenbeste sagar eta jogurta bat plastikozko poltsa batean; kaiera txiki gorri bat; tabako eta iragazki gehiago.

Paretaren kontra eseri naiz, "Allah" irakurri dut. "Horregatik deitzen diote etengabe", esan dut nire artean, "hemen inon jainkorik ageri ez delako". Ziega neurtu dut: sei metro leihotik atera; altuera, berriz, hiru metro eta erdi ingurukoa, ez dago zuzen jakiterik. Metro koadrotan, hogeita lau. Ziega txikiegia, hemen ez da jainkorik kabitzen.

Zer ez nukeen emango sosegu pixka baten truke, nahiz, agian, kafe bero batekin ere konformatuko nintzatekeen. Hemen ordea ez sosegurik ez kaferik ez dago. Hemen baino ezin dut egon, hemen hasi eta bukatzen da nire bidea. Sedimentatuta nago.

Nor naiz?

Begiak itxi. Hondoratzen utzi, amets batean bezala, errekatxo batean bezala. Erortzen ari naiz, itotzen. Zeharo baldarturik nago, irreala izatearen sentimendu nahasgarria nabari dut. Barnean bizi naiz, nire barnean. Denbora gehiegi ematen dut nire buruarekin. Sei urte neure buruaren ertzak bilatu eta haztatzen, neure izatea zedarritu eta eusten saiatzen.

*Turlututu-kui-kui-esnap-krakle-pop!*

Zein txori klase dabil txioka?

Berogailuaren tutuetan igo naiz, oin puntetan, atzamarrak burdinsarearen zirrituan sartuta, leihoari atzaparkatuta.

"*Ouais, Doumbia!*".

Burdinsarea, barroteak, burdinsarea. Kirats sarkorra, zigarrokinak, paperak, plastikozko sardexka eta koilarak, sagar-zuztarrak. Eta harago?

Zementuzko bi hangar, fabrika zaharren itxurakoak, hemendik kanpoaldeko murruetaraino hedatuz. Tabakoa eskatzen ari zaizkio elkarri. Ez dakit nortzuk diren, ez dakit zergatik daude isolamendu modulu honetan.

«*J'ai pas du tabac. Même pas une roulée!.*

Ez daukate tabakorik.

Han, murruen gainetik nabarmentzen, zelatatze-dorre zuria, esmeralda-koloreko leihatilekin.

*"Putain, c'est la galère!"*. Galera dela dio erretzaile gosetiak, hitza zein ongi aukeratu duen jakin gabe agian. "Martin Larralde horrelako egun batez hil zen, galeratan".

Mahaian jarri naiz berriro. Pasillo aldetik oihu urrunak heltzen zaizkit, ulergaitz. Galeriaren bestaldean ari dira, Haritz eta Patxi

akaso, batek daki. Berdin egon zitezkeen munduaren bestaldean. Hortxe daude ordea, nigandik metro gutxira, hodietan zutik armiarmak bezala, burdinsarearen aurrean garrasika. Pixka bat gertuago behar nuke, soilik pixka bat, Haritzen ziegan durundi egiten duen ahotsa aditzeko, baina ez nago, eta ez egotera etsi behar. Presoak etsitzen jakin behar du, ezeren aurretik (preso etsitzen ez ikasi izanagatik dagoen arren).

Klank! Klonk!

"*Promenade!*". Patiorako ordua.

Korridore hutsak zeharkatu ditut. Nolakoa ote zen nire aurreko bizitza? Nekez senti dezaket bizirik nagoela. Hatz mamiekin hormak ukitzen ditut, zinez bizirik ote nagoen egiaztatzearren. Izan zitekeen okerragoa. Joan ginenean ez baikenekien sekula itzuliko ote ginen. Ohe hutsa betiko uztea aukera bat zen.

Andoitzen akordua datorkit burura, baten batek lepoan gezia sartu izan balit bezala. Beti dator modu horretan Andoitzen irudia, bortizki, eta azala zulatzen du.

Durangora goaz, dauzkagun sosak liburuetan xahutzera. Topoa hartu dugu, euria ari du. Burua berokiaren papar-hegaletan gordeta darama Andoitzek, leihotik begira doa. Argi ederra dagoela dio, eta ez dakit egia ote den. Margolari begiekin ikusten ditu hark paisaiak. Koloreek laino dagoenean erakusten omen dute euren doinurik ederrena.

Jose Mari Lorenzo Espinosak idatzitako Eli Gallastegiren biografia irakurtzen ari naiz, eta marmar txiki batekin erantzuten

diot. Amorratu egiten zait: "Entzuten didak, ala?", eta nik baietz. Aldiro pasarteren bat irakurtzen diot ozen, eta ez dakit hark ezer entzungo duen, hain doa isilpean paisaiari begira, baina gero esango dit: "Pasatuko didak liburua amaitzean". Geroago barre-oldar batek hartuko gaitu, txartel-zulatzaileak "*billetesssss-graciasssss*" esaten duelako.

Irudi higatuok nire baitan kukuturik daude, beste norbaitenak balira bezala. Non ikusi nuen Andoitz azkenekoz, noiz? Migel Zabaleta kaleko etxean? Gero gerrak atea jo zuen, alde egin genuen, eta hura ez zen sekula itzuli. Sua bihotz ondoan hil zen, Wafa bezala.

Aitaren erretratua gordetzen dut, semearen gorpu erraustua besoen artean. Baina ez dut sekula begiratzen.

Sabini lau bider deitu diot: "*Viejo!*". Erantzunik ez. Besteei galdetu diet seguru ote dauden nire ondoko patioan dagoen, eta baietz, Oierrek, atearen zirrikitutik sartzen ikusi duela. Bosgarrenez deitu diot, erantzunik ez. Besteak, txundituta, txantxak egin dituzte, eta haietako bakoitza irudikatzen saiatu naiz. Elkarren aldamenean gaude guztiok, baina nor bere patio txikian. Burdin-sareak dauzkagu buru gainean. Oilategia da.

Oihu egiten dugu, baina ez dugu zinez hitzik egiten. Laguna aldamenean dagoela egiaztatzea da kontua. Erantzun du azkenean Sabinek, eta denek zirikatu dute, gauez haren zurrungak entzuten direla eta ez direla. Ozpindu da Sabin, berak ez duela zurrungarik egiten, baina jai dauka, denak ditu kontra.

Kontu arinak utzi ditugu gero, eta datozen egunetarako planak egin dutugu. Laister argitu dugu ez dugula amorerik emango, ez dugula inor bakartuta utziko. Batzuk sutsu, besteak apal: denak ados.

– Zer esan zian zehatz zuzendariak? -galdetu dit Urtzik.

– Taktika okerra generabilela -esan dut.

Irainak, oihuak, madarikazioak.

Amona mantangorri bat besoan pausatu zait. Rosa Luxenburgok, Wronkeko kartzelan, marigorri bat zaintzen omen zuen, haizeaz eta hotzaz babesteko kotoi batean bilduta, eta txikitasun infinitu horren aurrean zoriontsu sentitzen omen zen. Kanpoan, Lehen Mundu Gerrak Europa deusezten zuen.

Hara eta hona jarraitzen dut, ziegan oraingoan, betoizko lur arre pitzatuari begira, lurrazpiko historia jalgitzen ikusi nahian. Ezagun dut, hemen hildakoak daude, alferrik galdutako bizitzak eta amodioak. Hemen ez dago mugimendurik. Toki hau hilda dago. Lurra, estrato guztiak, mamuz beterik baleude bezala.

Presoek hormak margotzen dituzte, baina ez dira elkarrekin hitz egiten ari. Askoren arteko bakarrizketak dira, tabernetako murmurioak bezala. "*Allah handia da*"; "*Hirugarren dibisioko 177 ziegako Karim, salatari zikina*"; "*Kartzelari zakil zupatzailea, marikoia, lepatu egingo haut*"; "*Flavien, Evrykoa, 18 eguneko mitarra, kartzelari bat jipoitzeagatik*".

Ero bat leihotik garrasika: *"Grrrrrrrrrrriiii-pu-pu-pu! Reste ton chien! Chhhhhhiiiiiiien-chhhhhhhhhhien! Bande d'enculés! Bande de Pédés!*

*Bâtards! Maaarseeeeeille! Ouaiiiis! Ici ce n'est pas Marseille, c'est Paris, la banlieu de Paris! Grrrrrrrrrrriiii-pu-pu-pu! Chhhhhhiiiiiiien-chhhhhhhhhhien! Miau-miau! Eeeeeeeeeeehhhh! Uuuuuuhhh! Chh-hhhhiiiiiiien-chhhhhhhhhhien!".*

Zenbat luzatuko ote da leizealdia?

Arroza hotz zegoen. Den-dena jan dut.

Silvio Rodriguezen abestiak kantatzen ditut ahopeka.

Zenbat luzatuko ote da leizealdia?

Mikel Laboaren kantak abesten ditut ahopeka.

Zenbat luzatuko ote da leizealdia?

Ez nioke galdera horri buruan jiraka luze utzi behar.

"Begiak zabalik etzanda, agian zerua itsaso zikin bat dela esanez".

Klank! Klonk!

Atea ireki eta medikua azaldu da, ilea mototx batean bilduta daraman emakume txiki eta beltzarana, 45 urte ingurukoa. Kaieratxoa eskuetan dauka, ikasle prestuen tankeran, eta zer moduz nagoen galdetu dit: «A*lors monsieur Beitia, ça va*?». Ziegaren kanpoaldeko armairuan konfiskaturik daukadan ur botila eskatu diot, apur bat deshidratatuta sentitzen naizela. Ez omen dago horretarako baimenik. Baimen ororen iturri misteriotsua. «*Mais*

*vous savez que ce n'est pas autorisé*». Ziega barrura begiratu du eta ea idazten ari naizen galdetu dit, irakasleek erabili ohi duten doinuarekin. «*C'est bien ça!*», egin dit txalo. Harrituta dago, tximuok idazten dugula ikusirik.

Klank! Klonk!

"*Prétoire!*". Isolamendua luzatzeko edo isolamendurik ateratzeko epaiketa txikia da *Prétoire*-a. Normalean uko egingo genioke antzerki horri, baina geure arrazoiak azaldu nahi ditugu, eta ni bidali naute besteek.

Korridorea hutsa zeharkatu eta azpiko solairura jaitsi gara. Han, komisioak izaten direneko mugimendua antzematen da. "*Le portique!*", agindu dit funtzionariak, metalak detektatzeko arkupetik pasa nadin, hain zuzen. Pastazko betaurrekoak ditu, burusoila da. Irribarre onbera batez agurtu nau, "B*onjour, Beitia*". Keinu txiki batez erantzun diot.

"Abokaturik ez duzu eskatu, ezta?", galdetu dit funtzionario gradudun batek. Ezetz. "Beno, zaude hor pixka batean, laister helduko da zuzendari jauna". Itxaron dezagun, beraz. Beste funtzionari bat gerturatu zait, hau ere graduduna. Ileak puntan ditu, atzamarretan zilarrezko eraztun modernoak. Ezagutzen dut, gizon zintzo samarra da. "Mundu guztiak daki euskaldunak beti elkarrekin zaudetela, aski zuten *berria* zuekin jartzea, beti egin izan da horrela", esan du, eta badirudi zinez sinesten duela.

Gela zuri karratu bat, txukun eta espartanoa, apur bat utzia, bi ziegaren neurrikoa. Hondoan oholtza txiki bat, eta haren gainean idazmahai handi bat, bina mahai txikiagoz inguratua. Mahaiaren

burutik Morhange zuzendariak aurrean daukan pulpitu txikia erakutsi dit keinu batekin. Gelaren erdiraino joan naiz, linoliozko lurretik. Zuzendariak nekatuta ote nagoen galdetu dit, «*Vous êtez fatigué, monsieur?*». Ez dakit zer esan: «*Un peu*», esan dut, zerbait esatearren. Esan niezaiekeen sedimentaturik nagoela, apenas gogoratzen dudala nire lehengo bizitza, baina luzeegi joko liguke eztabaidak. Aubry "detentzio-buruak", karraskari irribarrea egin du. Idazkari txinatarrak eskuak ordenagailuaren teklatuan jarrita dauzka, otzan dago zain. Mahaian eserita dagoen kalez jantzitako gizon betaurrekodunak txandaka begiratu gaitu, orain zuzendaria, orain ni.

– Beno, Beitia jauna -hasi da zuzendaria, eztarria garbitu du-, eskerrik asko etortzeagatik, estimatzen dut zure keinua.

– Ez dago zertan.

– Hemen irakurtzen dudanez -burua paper pilatxo batengana makurtu du-, atzo zure ziegan sartzeari uko egin zenion -begiratu egin dit-, zure hitzen arabera -kakotxak egin ditu airean- "euskaldun bakartuarekiko elkartasunez".

– Ia sei urte dira kartzela honetan nagoela, ez dugu inoiz onartu euskaldun bakarturik.

– Esan nizun zure jatorri bereko...

– Euskalduna -lagundu diot.

– Bueno, pertsona hori behin-behinean baino ez dagoela hemen, egun gutxi batzuen kontua izango dela.

– Egun gutxi badira, hainbat errazago zuentzat.

Ezetz esan du buruarekin.

– Zuen idealismoak pragmatismoa gutxiestera eramaten zaituzte, eta begira zein egoeratan zaudeten. Azkarragotzat zintudan.

– Ez dut ukatuko niretzat isolamendua gogorra denik. Gogorra da. Murruek jan egiten zaituzte. Baina duintasuna da hemen jokoan dagoena. Eta guretzat duintasuna, zuretzat zure seme-alaben ikasketa unibertsitarioak bezain garrantzitsua da. Edo zure karrera administrazio penitentziarioa bezain. Ez dugu besterik. Amore ematea, dena galtzea da.

– Batzuetan tematzea izan daiteke dena galtzeko modua. Errespetatzen ditut zure printzipioak, baina ez da printzipio kontua.

– Printzipio kontua da, hain zuzen.

Isilik geratu gara. Gizon betaurrekodunak hartu du hitza:

– Galdera bat egin nahi nizuke, inporta ez bazaizu.

– Ez, ez, aurrera.

– Onartuko duzu kartzela antolatzeko eskumena zuzendari jaunarena dela, ezta?

– Noski, onartzen dut. Baina kartzela bat gizarte txiki bat da, eta gizarteetan elkarbizitza konpromisoen bidez eratzen da. Duela justu hamar urte kartzela honetan liskarretan ibili ginen, kartze-

lak ez baitzituen gutxieneko baldintzak eskaintzen, eta hilabeteak pasa genituen isolamenduan. Garai hartan Saint-Jean jauna zen zuzendaria. Hark, kartzela "onar" -orain nik egin ditut kakotxak- genezan baldintzak negoziatu zituen zuzenean gurekin, telefonoaren bestaldean epailea zuela. Kontratu sozialaren terminoak alegia. Besteak beste, hona ekarri digun "euskaldun bakarturik ez" ospetsua zen onartutako puntuetako bat.

– Baina hau kartzela bat da, jauna -dio gizonak-, ez demokrazia bat.

– Jabetua nengoen kartzela eta demokrazia ez zirela ongi ezkontzen, baina harrigarria da hain modu argian formulatua aditzea.

– Demokraziaren arauak urratu dituztenak zuzentzea da kartzelaren helburua -ebatzi du zuzendariak- eta horretarako diziplinaren balioa nahitaezkoa da.

– Berrogei urteotan kartzelaren lehen helburua, legearen arabera, bergizarteratzearena izan da, ez zigortzearena, nahiz eta kartzelaren egitura duela ehun urtekoa izan, helburua zigortzea zuen kartzela harena, hain zuzen. Eta egitura aldatu ez denez, mentalitateak ere ez. Horixe da arazoa: egitura paranoikoa, susmoaren instituzionalizazioa. Fobiokrazia bat. Ezin da Erdi Aroko eraikin batean XXI. mendeko printzipiorik defendatu.

Aubry, begiak lurrean, eskuak besazpian, bera aulkian bihurrikatu da.

– Gauzak asko aldatu dira azken urteotan -dio zuzendariak-.

Egia da, asko geratzen da egiteko, baina aurrerapenak ere etengabeak dira. Era berean -isilunea egin du-, ez da ahaztu behar penitentziak baduela bergizarteratze dimentsio bat. Bata eta bestea elkarturik doaz, ez kontraesanean. Ulertzen duzu hori?

– Okerrena zera da -diot-, diskurtsoaren biguntzearekin, eta "hobekuntzekin" -kakotxak egin ditut-, kartzela zigorrak luzatzea besterik ez dela lortu. Ziegetan jarri dizkiguzuen telebistei, psikologoei, eta ikastaro txatxuei esker, kondenak bikoiztu egin dizkiguzue. Hori da aldatu dena. Gauzak zertan diren egiaztatzeko, isolamenduan egon naizen aldiei begiratzea daukazue. "Elkartasunagatik" izan da aldiro.

– Ez horregatik bakarrik, Betia... -esan du Aubryk.

– Hamairu bider, Aubry jauna. Normala iruditzen zaizue hori? Eboluzio esanguratsu baten froga? Nori egin diote mesede hemen pasatu ditudan egun guzti horiek? Niri? Gizarteari? Justiziari?

– Baina zuen kabuz etorri zarete, Beitia jauna -zuzendariak.

– Hain zuzen! Eta, zerbait aldatu balitz, zigor beherapen bat eman beharko zenigukete horregatik.

Irribarre behartua egin dute. Isilik geratu gara. Zuzendariak hatz mamiekin mahaia jo du.

– Beno, orain deliberatzeko tarte bat hartuko dugu.

– Azken gauza bat.

– Bai?

– Zugarramurdi jauna gurekin jartzea eta euskaldun guztiak askatzea eskatzen dizut.

–Tamalez, hori ez da posible izango.
– Zergatik ez?

– Bueno, iskanbila ederra muntatu diguzue... Ezin dut zigorrik gabe utzi.

– Hara, zein gutxi aldatu diren gauzak.

– Atera zaitez une batez, Beitia jauna, ez digu luze joko.

Klank! Klonk!

"*Voilà, votre kit de nettoyage!*".

Eureka! Irribarre harroa dauka funtzionariak, badaki zenbatetan saiatu naizen etxea garbitzeko puskak eskuratzen. Urez eta xaboiez beteriko plastikozko ontzia, trapua eta erratza eman dizkit. Fregona bat? Ez, Fresnesen ez dakite zer den hori. Atea itxi aurretik funtziorariak zenbat denbora beharko dudan geldetu dit: «Hamar-hamabost minutu?». Erotuta dago, ez daki zer den ziega hauetako bat goitik behera garbitzea. Ordu parea beharko dudala esan diot, eta keinu etsituz alde egin du.

Bitan pentsatu gabe, hozkirik handiena eragiten didan ziegako atalari eraso diot: komun-zuloa. Sentitu ezazu portzelana la-

kartzen duen geruza marroikara. Haztatu ezazu kaka hori. Gozatu ezazu trapuari darion zorrotada uherraren ikuskizuna. Oi, ur-jauzi liluragarriok! Oi, jainkoen bizitokiaren natura joria! Oi, Fresneseko isolamendua! Oi, giza-asmamenaren perla bitxia! Oi, tentazio guztien mosaikoa!

Paretak eta lurra garbitu dut behin eta berriz. Ur arrea irteten da oraindik. Koltxoia leiho azpian jarri dut, hormaren kontra, eta oheko burdinezko xaflaren gainean nire puskak apailatu ditut. Liburuak: Anne Doufourmantellen *Eloge du risque*, Nathalie Sarrauten *Enfance*, Mohamed Xukriren *Ogi hutsa*, Slavoj Zizeken *La subjectivité à venir*, William Faulkner-en *Tandis que j'agonise*... Argazkiak eta gutunak ere hor jarri ditut, ikusgarri, bai eta idaztekoak, tabakoa, fruta, gazta eta jogurtak. Gero galtzerdiak hartu ditut armairutik, eta han ezkutatutako kafe sobretxoak. Kafetxoa hartzeko tenorea da, orain, lixibak kakaren lurrina ordezkatu duen une mirarizko honetan.

Horra, instalatua nago.

Zazpi eguneko zigorra ezarri didate, "*dont trois avec sursis*". Besteei baino zigor egun bat gutxiago, komisioan aurkeztu izana "eskertzeko". "Espero dut hemendik aurrera hobeto elkar ulertuko dugula", esan dit zuzendari alu horrek. "Ziur nago halaxe izango dela", gaineratu du.

Ez dakit zer gertatuko den gero. Laguna ekarriko ote duten.

Zein egun da gaur? A bai, Asteartea.

Laranjatik urdinxkara egiten duen argia sartzen da leihotik.

Eguraldia aldatzen hasi du.

Klank! Klonk!

"*Repas!*". Afaria.
Faulkner-en liburua baztertu dut aurpegitik. Lo nengoen. Erdi zorabiatua hurbildu naiz atera.

*Taboulé*-a dugu afaltzeko, ederki!

– Prenez ce que vous voulez, c'est du rab -dio kartzelariak, keinu batez orga gaineko soberako jakiak seinalatuz. Nahi dudana hartzeko.

Duintasun Funtsezkoenaren izenean Xabi, ez ezak hartu!, pentsatu dut, nire eskuek gosetiek erretilu guztiak heltzen dituztela.

Klonk! Klank!

Afaria mahaian utzi eta begira geratu natzaio. Bina tomate, jogurt eta sagar. Tira, ez da harrapakin makala. Tomateak *pa amb tomaquet* egiteko, sagar bat gerorako, eta bestea gosaltzeko. Bat batean, nire ziegako argia faltan sentitu dut. Halakoak esatea astekeriatzat jo liteke, baina, azken batean, nire etxea da.

Egunak dauzkagu oraindik aurretik. Kideen ahotsak entzuten ditut korridorearen beste aldean. Isolamenduan isolatuta naukate, eta hain zuzen bilatzen duten horixe lortzen dute nigan: isolatuta senti nadin. Mingotsa da bakardardea, baina are mingotsagoa porrota.

T.S. Eliotek dioen bezala: «*Izaki hutsak gara*». Geu gara geure min guztien neurria. Ez dago beste misteriorik. Ideiak ez nau kontsolatzen, ordea. Kontsolatuta sentituko banintz, desasosegu honetaz ahaztuko nintzatekeen, sikiera bost minutuz. Nire buruarekin hitz egitera beharturik nago, baina hitzek ez didate balio.
Munduko tiporik tristeena naiz.

Eta tokirik ezaproposenean nago.

Tren guztiak pasatu dira, joan dira, ni itxaron gabe.

Non dira denak?

Zein erabatekoa, hustasun hau. Tokiak gure arteko loturez eginik daude, eta honek, toki madarikatu honek, gizon bakartuak baino ez ditu ezagutu. Ezagutu, gorde, giltzapetu. Are, giltzapetu dituen gizonen loturak hautsi ditu. Geldotasun erabateko honen atzean pizti bat ezkutatzen da, haren erraietan nago. Bere izena, ausentzia da.

Inork ez du nitaz ezer espero.

Memoria zementuzkoa bilakatu zait, ahitu egin da, itzali, etxeetan gaua aurreratu ahala itzaltzen diren leihoak bezala.



**Aitor Lorente Bilbao**

Atxilotxe data 2007.6.7.
Askatze data 2012.7.12.

*Egilearen oharra:*

Bai, testu honengatik Versaillesko Akademiak sari bat eman zidan. Egun, edozeini sari bat ematen diotenaren froga argia... Ez dezagun umore ona gal, sikiera.

Saria ematera etorri ziren garaian preso nintzen Fleuryn, eta bertara etorri zen epai-mahaiko ordezkaritza, eta beraiekin batera atso bat. Frantses-judutarra zen. Komunista, ideologiaz. Gerra hasieran, Vichyko agintariek bera eta bere familia osoa atxilotu zituzten. Numero luze bat, matrikula baten antzekoa, zeraman besoan tatuatua: Auschwitzen naziek deportatuei tatuatzen zioten identifikazioa. Mauka motzetan jantzia, ez zuen inolako ahaleginik egiten tatuaia hori gainontzekoen begi bistatik gordetzeko. Areago, harrotasun osoz erakusten zuen. Berak, 16 urte zituela, Auschwitzetik bizirik irtetea lortu zuen. Bere familia osoa, gurasoak, ahizpak eta neba, bertan geratu ziren, zerraldo, hilik. *"Mundu guztiak"* zioen *"hori inoiz ahantz ez dezan"*.

Saria jasotzean hitz batzuk esateko parada izan nuen. Esan nien ene lanak nazien eremuetan pairatutako triskantzak salatzeaz gain, egungo errealitateari ere erreparatzen ziola. Kartzeletan, nolabait ere, eremu haietako printzipioek, aginteari obedientzia itsua, presoen arteko hierarkia eta abar luzea, indarrean jarraitzen zutela. Eredu hori espetxetik kanpoko sistemak ere, oro har, erakusten duela. Gizarte hierarkizatuak, piramidalak, non dena goitik behera baitatorkigu emana, non sistemaren aurkako edozein kritika boltxebiketzat, anarkistatzat, baita terroristatzat ere hartua izaten baita. Egungo sistemari kasu eginez, ez ote da finean mundua kartzela erraldoi bihurtu? Ez ote gara denok preso bizi berton?.

Ildo beretik gaineratu nuen ez nuela ulertzen nola erabil zitezkeen Fresnes edo La Santé bezalako espetxeak, naziek bere garaian atxilotu politikoak giltzaperatzeko erabili zituztenak, gaur egun ere antzeko eginkizuna betetzen, memoriarako gune edo eraikin bat izan beharrean. Esan nien azkenik, deportazioaren aferan euskaldunok bagenuela eskarmentua, geure aitona-amona belaunalditik gentozela, Francoren matxinada borrokatu, Francoren internamendu-kanpoak ezagutu eta Francorengandik ihes egindako belaunaldi hartatik. Eta haietako zenbaitzuek, Martxelo Bilbaok kasu, Frantziara erbesteratu eta han nazien kontrako erresistentziarekin bat egin zutela. Behin aliatuek Paris liberatu zutenean (1944), De Gaullen laguntzaile batek nazionalitate desberdinetako delegazioei banan-banan zuzen-duta, honako hau esan ziela euskaldunei: *"Nous, les Français, nous n'oublirons jamais ce que les Basques ont fait pour libérer la France…"*[1]. Esan nien ibilbide motzekoa zirudiela frantsesen oroimenak, zeren Frantziak oraindik orain preso baitu Ipar Euskal Herria, zeren Francoren garaiko belaunaldi haren seme-alabek, bilobek eta birbilobek oraindik jarraitzen baitugu frantses espetxeak betetzen… eta bat baino gehiago zerraldo, hilik geratu dela bertan. Atsoak zioenez, mundu guztiak inoiz ez dezala ahantzi hori.

[1] "Guk frantsesok ez dugu inoiz ahantziko Frantzia askatzeko euskaldunok egindakoa...".

## Nazien heriotza zentroetako erresistentzia

Nazien internamentu-eremuetan izaniko erresistentzia epopeiatzat har liteke, lirismoz, une epikoz, tragediez eta, batez ere, itxaropenez betetako epopeiatzat; kantu heroiko bat, pertsona ezagunek nahiz isiltasunean hil zituzten pertsona ezezagunek osatzen dutena. Hori dela eta, nazien internamentu-kanpoetan egindako erresistentziak meritu propioz irabazi du poesiako zein Historiako orrietan sartzea. Historia Garaikidearen parte da, maisu handiek, hala nola Georges Lefebvrek, Marc Blochek edo Georges Dubyk, Historia irudikatu zuten eran; hau da, "metahistoria" antzeko bat, non menperatzaileen dinamika zanpatzaileaz zein desobedientziaren dialektikaz ohar baikaitezke: borroka desorekatua, gizartearen pisua batetik, eta pertsonen gogoak horren aurka antolaturiko erresistentzia bestetik.

Egia esan, arestian esan dugun bezala, nazien internamendu-kanpoen historia ez da soilik XX. mendeko historia hutsa; espazio edo denbora muga guztiez harago doa, eta Akiles, Ulises edo Ariadneren mailara igoarazten ditu arraiadun uniformetan jantzitako gizon-emakumeak, 40 kilo pisatzera kasik heltzen ez zirenak.

Lan honetan izua, zifren hoztasuna (6 milioi judutar akabaturik), estatistiken alde inpertsonala (% 60k lortu zuen kontzentrazio-eremuetan bizirik irautea, %3k baino ez heriotza-zentroetan) ezagutuko ditugu… baina, horretaz guztiaz harago, lekukoen hitzekin, Historiarantz abiatzen diren istorio ttipiak aurkituko ditugu. Izan ere, nazien eremuetan emandako erresistentzia, gauza ororen gainetik, giza ekintza sakona, bizitzaren aldeko jarrera baita, basakeriari, menderakuntzari, iraindua izateari aurre

egiten diena. Gizartea eta gogoa elkarren aurka, giza alderdia gizatasun-ezaren aurka.

Historia aberasgarri bezain orotarikoa eskainiko digu nazien eremuetan izandako erresistentziak, orotariko izaeren arteko elkartasunez -norbanakoarenak zein kolektiboak, bat-batekoak zein antolatuak- jositako sarea, jende andanak josia, euren izaera moralean, kulturalean eta ideologikoan, sarritan bata bestearengandik oso urrun egon arren, baldintza berberetan lotua.

Ezohiko kronika da, miresgarria, sinestezina; pairamenaren eta adorearen aldeko oihua, basapiztiaren hortzetan, espazio hertsian, Leviathanen letaginen artean haizeratutako oihua. Erresistentzia, sistemak inposatutakoaren kontrako indar gisa da adierazita, isiltasuna erditik zatitzen duen oihu urragarri bat gisa. Ravensbrück eremuan Germaine Tillionek esan zuen bezala: *"Bizirik irautea, gure azken sabotajea!!"*.

Bizirik irautea, bai, kontzeptu hauskor bezain preziatua bilakatu zen Adolf Hitlerrek, 1933an, agintea eskuratu zuenez geroztik. Printzipio faxistetan eta arrazistetan oinarritzen den nazismoaren garbitasun arioak anatematizatutako nortasun guztiak (judutarrak, ijitoak, homosexualak...), nazismoaren oposizioan zirenak (komunistak, sindikalistak), nahiz baztertu eta alienatuak ere, guztiak giltzapetuko zituen.

Lehen kontzentrazio-eremuak -berreziketa-eremu eufemismoaren pean izendatu zituztenak- Dachaun eta Orienenourgen eraiki ziren. Berreziketa hura, baina, kolpeetan, basakerietan, menderakuntzan oinarritzen zen, helburu bakar baten zerbitzuan: presoa nazismorako bidean jartzea.

1933ko martxoan, Goeringek, kontzentrazio plangintzaren buru zela, sistema gogortzeko erabakia hartu zuen: harrez geroztik *"Konzentration Lager"* bilakatu zituzten ordura arteko 'berreziketa-eremuak', eta SSko kideen esku utzi zituzten horiek guztiak gobernatzeko ardura. Presoek obedientzia itsua erakutsi behar zieten nagusi berriei: atxiloen gaineko zaintza etenik gabekoa zen, diziplina ezin zurrunagoa, eta zigorrak, heriotza-zigorra barne, ohiko bihurtu ziren.

Naziak, ordea, ez ziren presoen sufrimendu soilarekin ase geratu. Horrekin aski ez eta etekin ekonomikoak lortzeko ere erabili zituzten. Gauzak horrela, Theodor Eicke, Hitlerren hurbileko laguntzailetariko bat, aitzindari bihurtu zen presoak lan indar bezala erabiltzeko egitasmoan. Preso gehienak internamendu-kanpoen inguruan altxatutako lantegietara bidali zituzten. Gune isolatuak ziren, baina, beti ere, hiri handietatik gertu.

Eicke izan zen, era berean, erretokiak edo labe krematorioak eraikitzen lehena. Asmo zehatz baterako sortu zituzten: presoen hilotzak desagertu eta, bide batez, nazismoaren herio arrastoa ikusiezin bilakatzeko. Errautsen eta diru gosearen arteko loturak elikatu zuen Alemaniaren gerra-makina indartsua.

Gerra heldu zenean, Dachau, Buchenwald, Ravensbrück eta Mauthausengo (azken hau, okupaturiko Austrian) eremuei Reichetik kanpo zabalduko zirenak gehitu zitzaizkien: Natzweiller Struthof (Altsazia), edo Auschwitz, Treblinka eta Sobibor (Polonia), besteak beste. Beraiei erantsitako eremu bereziak -*"Kommando"* izenez ezagutuak- eta ekoizpen zehatzetan espezializatuak, nongura ugaldu ziren: Alemanian soilik, 5.000 baino gehiago zeuden.

Eremuen internalizazio horrek ondorio latzak ekarri zizkien presoei. Orduz geroztik deportatuak izateko arriskua izango zuten, 1941ko abenduan plazaratutako dekretu baten eskutik. *"Nacht und Nebel"* ('Gaua eta Lainoa') zuen izena, baina izana, ordea, guztiz bestelakoa zen: deportatuak, arrastorik utzi gabe, desagerraraztea.

Bi faktore horien (eremuen internalizazioa gehi *"Kommando"*en ugaritzea) bateragarritasunak laukoiztuko egin zuen preso kopurua, eta horren ondorioz, lekurik eza eta gosea etorri zen eremu horietara. Horrenbestez, presoen batez besteko bizi-iraupena nabari murriztu zen: 9 hilabetekoa zen gerra hasi zenean, eta 4 hilabetekoa besterik ez, gerra amaitzear zegoela. 1942an, gainera, heriotza-zentroen agerpena aipatu behar da: gas jalgitzearen bitartez, judutar populazioa akabatzeko sortu ziren.

Internamentu-eremua mundu hertsia zen, alanbre elektrifikatuz inguratua. Eskubiderik gabeko gunea, non, *"Lagerkommandant"*ak (gradudun komandanteak) zein *"Lagerführer"*ak (eremuko nagusiak), botere osoa zuten eskuartean.

*"Kommando"*etan, hango tailer eta harrobietan, bazen presoen zaintzaz arduratzen zen *"Kapo"* bat, sarritan SSkoek zuzenbide arrunteko presoen artean aukeratua. Presoen arteko hierarkizazio horrek beraien arteko bortxakeria indartzea zekarren: zuzenbide arruntekoen (triangelu berdedunak) eta preso politikoen (triangelu gorridunak) arteko aurkakotasunak, nazionalitate ezberdinen arteko mesprezu eta enfrentamenduek edozein koalizio osatu eta erresistentzia antolatzea oztopatzen zuten. Egoera horren ondorioz, erresistentzia bazterrekoa

zen internamendu-kanpoetan, eta ezinezkoa, ia, heriotza-zentroetan.

Dena den, horrek guztiak ezin izan zuen jarrera solidarioak agertzea eragotzi. Izan ere, giza izaerari atxikitako kalitate horiek beti azeleratzen dira, baldintza latzenetan izanik ere. Esan daiteke, hortaz, erresistentzia, elkartasun forman, eremuetarako bidaian hasten zela, deportatuak animaliak garraiatzeko erabiltzen ziren tren bagoietan pilatzen zituztenean: inoiz ez zen falta izan lagun ahulduenak adoretzeko hitzik. Eta erresistentziak, bizi iraupenari lotutako forman oraingoan, jarraipena izan zuen helmugara heldu ondoren ere, non -Geneviève de Gaulleren esanetan- *"ilara okerra*[2] *saihesteko, beharrezkoa zen ginena baino altuagoak eta handiagoak izatearen itxura ematea"*.

Behin eremuan sartuta, deportatu guztiei ilea moztu eta euren ondasun oro konfiskatzen zizkieten. Izena ere galtzen zuten eta, haren ordez, alkandoran, euren izaera eta nazionalitatea erakusten zuen triangeluaren pean, matrikula bat josi eta alemanez buruz ikasteko agintzen zieten. Gizatasun ezaren errepresentazio gordina dugu hori: deportatuak ez ziren pertsonak, *"stücke"*ak (okela puskak) baizik. Eta zein gutxi axola duen okela puska bat makilakadaz josteak, urkatzeak, edota gas gelara eramateak.

Beraz, bizirik irautea premia larria ez ezik, borreroek agindutako halabeharrari aurre egiteko lehen erresistentzia ekintza bilakatu zen. Eta, bizirik irautearren, beharrezkoa zen eremuko arauak ikastea, eremua ongi deskodifikatzea, Jorge Semprúnek

[2] Zuzenean krematoriora zeramatzan ilaraz mintzo da.

Buchenwalden egin zuen antzera: alemanen hizkuntza menperatzeak ahalbidetu zion lanpostu lasaia eskuratzea, eta letrinak (haize zabalean zeuden komunak) SSkoen zaintzatik kanpoko askatasun-espazio bihurtzea.

Bizirik irauteko, besteak beste, ahuldade fisiko adierazpen anitzen kontra borrokatu beharra zegoen. Gosea borrokatzea erresistentzia froga itzela da. Guztiek ere eginahalak egiten zituzten ogi puska bat eskuratzeagatik, lapurtzeagatik; goseak bultzatuta, belarrak eta landareak jaten zituzten, eta horren ondorioz are irudi desolatuagoa zuten kontzentrazio-eremuek. Beharrezkoa zen, gainera, hotzari, deskantsu-gabeziari eta garbitasunik ezari aurre egitea, gaixorik ez erortzeko, alde batetik, eta itxura gizatiarra gordetzeko, bestetik. Horren karira, Germain Tillion gauaz baliatzen zen, zaintzaileek ikusi ezin zutenean, Ravensbrückeko kanpoko konketetara hurbiltzeko.

Gaitz fisikoak borrokatzea zeharo garrantzizkoa izanda, gauza bera esan dezakegu ahuldade mentala borrokatzeaz. Jarduera mentalak gogoak indarberritu eta desesperoan erortzea saihesten du. Gogoak uko egiten dio suntsitzeari, eta *"stücke"* estatusaren aitzinean, gizatasunaren garaipena aldarrikatzen du. Horren harira, Arteak funtsezko garrantzia hartzen du, transzendentzia, sublimazio era bat, katarsiren antzekoa –Sigmund Freuden aburuz- delako.

Basakeriaren aurrean norberaren burua berresteko moduetako bat idaztea da. Areago ere, ausardiaz beteriko ekintza bat da, zaintzaileek lur azpiko gordelekuetan aurkituz gero, lapitza puntaren bat eta paper zatitxo bat edukitzea urkatua izateko arriskua zekarrelako. Horrek ez zuen, haatik, presoen

idazlanak geldiarazi; Boulogne poetarena, edo Verdetena -biak Buchenwalden- kasu, edota Robert Desnosena, zeinaren *"DernierPoème"*[3] idatzia gerorako geratu baitzen bere arropa zirtziletan gordeta.

Pintura, marrazketa, bestelako bitartekoak dira, norberaren burua eite humano sentikor eta sortzaile aurkezte aldera. Léon Delabre, Maria Korks (Buchenwald), France Audol (Ravensbrück), David Olère (Auschwitz) edo Henri Gayot-en (Struthof) obrek argi eta garbi erakusten digute eremu nazietan bizi izandako lazdura. Alabaina, margoetan agertzen diren deportatuek gizatasuna ere islatzen dute aldi berean. Bada obra bat, Leipzig-Hasagen frantses deportatuek egina eta *"Nouveau-né"*[4] izenekoa, aipamen berezia merezi duena. Paretetan zintzilikatzen zuten egunkari murala da, sormen kolektiboa, narrazioek eta ilustrazioek osatua, zaintzaileen kontrolpetik gordetzearren egunero lekuz aldatua behar izaten zutena.

Presoek musika ere erabiltzen zuten bere sentimenduak adierazteko, aleman atxiloek idatzitako Paduretako Kanta, kasu. Koru-saioak, folklore-dantzak, edo igandetan, ezkutuan, jotzen zuten orkestrak dira ere musika-jarduera horren lekuko.

---

[3] "Azken Poema":
"Horren biziki egin dinat hirekin amets,
Horrenbeste naun ibili, horrenbeste mintzo,
Horrenbeste maite izan dinat hire itzala,
Ezen dagoeneko ez zaidan hitaz ezer geratzen.
Geratzen zaidan bakarra itzalen artean itzala izatea dun,
Itzala baino ehun aldiz itzalagoa izatea,
Jin eta atzera berriro jinen zainan itzala izatea,
Hire bizitza eguzkitsuan barrena."
[4] "Jaioberria"

Hitz batean, sormenari esker, presoak aurretiko nortasuna berreskuratu eta zain dezake. Horretan laguntzen zuten eskulan xumeenek (erabilpen indibidualerako objektuak egiteak: koilarak, harizko apaindurak, esaterako) nahiz sorkuntza kolektiboek, hala nola Ravensbrückeko emakumeek beren izenekin bordatu zuten oihalak. Azken adibide hori eremuetako agintariek galarazten zituzten bi balioen adierazpen galanta da: kohesioa eta elkartasuna.

Elkartasunak egin zuen posible, beraz, deportatuek eutsi eta kemena gordetzea. Elkartasuna, erresistentzia-adierazpena den heinean, sistemaren aurkako indar bilakatu zen. Elkartasunaren bidez ahalegintzen zen subjektu kolektiboa subjektu indibidual *"musulman"* ez bilakatzea; hori baitzen, 'musulmana', mespretxuz esana, eremuetako agintariek herioaren zain zegoena izendatzeko modua.

Hori dela-eta, egon bazeuden deportatuen arteko nortasun-aldaketak, horietako batek lanpostu latz-latza edota exekuziorako bidaia saihestu ahal izan zezan. Buchenwalden eta Auschwitzen sendagile lanetan hurrenez hurren aritu ziren Balachowsky maisuak eta Waitz doktoreak deportatu nahikotxo salbatu zituzten, eremuko ospitalean legez kanpo mantenduz. Anise Postel-Vinayk kontatzen du nola, 1945an, Ravensbrückeko emakumeek mediku-esperimentutara destinaturiko beste emakume batzuen (*"les lapins"*[5]) biziak salbatu zituztela, blokeetako sabaietan eta zoru azpietan ezkutatuz.

[5] "Untxiak".

Albisteak zabaltzeak presoen arteko elkartasuna indartzen zuen eta, bide batez, isolamendu informatiboa apurtzen zuen. Hala, Marie-Jo Chombartek aliatuen aurreraldiak seinalatzen zituen mapa batean, bere bloke bereko deportatuek askapen-itxaropena biziagotu zezaten. Buchenwalden, eremua liberatu baino 3 egun lehenago, presoek eurek deitu zioten amerikar armadari, haiek berek fabrikatutako irrati emisore klandestinoen bidez. Eta, Dora eremuan, hildakoen gorpuetan ostendutako mezuez, A4 armak egiten ziren toki zehatzaren berri eman zuten.

Berriro ere elkartasuna dela medio, berdeen (zuzenbide arrunteko presoen) ardura postuak eskuratu zituzten gorriek (politikoek), bai Buchenwalden zein Auschwitzen eta, horri esker, eremu horietako administrazioa zertxobait malgutzea lortu zuten. 1943ko martxoan, frantses deportatuen artean ziren komunistek, sozialistek, eta gaullistek ere, CIF (*"Comité des Intérêts Français"*[6]) sortu zuten... CIFen lanari esker, Marcel Dassaut, Julien Cain (Frantziako Bibliotekako zuzendari ohia) eta ehunka judutar ume salbatu ziren Buchenwalden.

Elkartasuna, bere dimentsio konprometituenetariko batean, sabotajeetan ere gauzatu zen. Erresistentzia kolektibo eta politikoa, Alemania naziarentzat lanean aritzeari uko egiteko. Saboteatzea lan erritmoak moteltzea zen, edota fabrikatutako produktuak izorratzea. Horren harira, jantzi-tailerretan aleman soldaduentzako uniformeetan josturak urratzen zituzten (Paulette Lechevallier, Ravensbrücken), haientzako fusilak eta prismatikoak gaizki muntatzen zituzten (Richard Ledoux, Gustloff lantegian)...

---

[6] "Frantses Interesen aldeko Komitea".

Dezente argigarria da, atal horretan, Doran fabrikatutako 9.000 suzirien artean herena baino ez zela helmugara iritsi, gainerako guztiak saboteatu egin zituztelako.

Hori guztia -Marie-Claude Vaillant-Couturierren hitzetan- gizatasunak egina... *"Gainontzekoekiko elkartasunean aritzeko prest zegoen gizatasuna, bizia arriskuan jartzea bazekarren ere"*.

Duintasunaren, kohesioaren, eta giza izaeraren gaineko sinesmen sakon horrek borrokalariaren konpromiso kolektibo eta solidarioarekin bat egin eta matxinadak eragin zituen: manifestazio isilak Ravensbrücken, 1943-44 urteen artean, Germaine Tillion eta M.-C. Vaillant-Couturier beraren zuzendaritzaren pean. 1945ean, 400 preso sobietar baino gehiago armez matxinatu ziren Mauthausenen: 300 inguruk lortu zuten ihes egitea. Horietako heren bat baino gehiago berriz atxilotu eta exekutatu egin zituzten. Hala ere, ihesaldirik ikusgarrienetariko bat, Urba eta Welzer txekiarrena dugu: Auschwitzetik hanka egin eta gero, eremu horretan pairatutako basakerien berri ema zuten (1944). Eta ezin inolaz ahantzi Sobiborren izandako matxinada armatua (1943), non deportatu gehienek beren bizia galdu baitzuten, 50 lagunek ihes egin ahal zezaten.

Giza duintasunaren aldeko kanta da, azken batean, eremu nazietan izandako erresistentziaren historia, eta *"(…)gizateriarenganako baikortasun garaitu ezina (…)"*[7] gordetzen laguntzen digu. Are gehiago, historia horrek beti erne, beti adi egotea eskatzen digu, ezin baitugu ahantzi nazismoa boterera heldu zeneko garaia, eta beraz kontzentrazio-sistemaren bilakaerarena,

[7] M.-C. Vaillant-Couturierren hitzetan.

Weimar Errepublikaren testuinguruan gertatu zela; hots, izaera parlamentarioa duen demokrazia baten barnean. Frantziako III. Errepublikari atxikita zeuden pertsonalitate politikoek ere parte hartu zuten, gerora, naziek antolatutako Vichyko gobernu kolaboratzailean.

Hau da, deportatuen giza duintasunak nazien kontzentrazio-munduaren gizatasun-eza azpimarratu nahi du, baina aldi berean, fenomenoa berriz agertzeko arriskuaz ohartarazten gaitu, baldin eta egungo gizarte hierarkizatu eta piramidalari, non sistemari obeditzea arau kasik kuestiona ezin bihurtu den, erreparatzen badiogu, sikiera.

Aski ederki irudikatzen du hori guztia Martin Niëmoller apaiz protestanteak (Mauthausen) bere poema[8] solidario eta humanoan: *"Als die Nazis die Kommunisten holten, ich war ja kein Kommunist…"* (hau da: *naziak komunistak atxilotzera etorri zireneko eguna*…). Hartara, den-denek beti zapalduei elkartasuna adierazteko betebeharraz mintzo zaigu Niëmoller.

Testu hau idazten duena ez duzue frantsesa, baina bere herrikide batek pairatutakoaren berri du. Euskalduna zen herrikide hori, Martxelo Bilbao zeukan izena, eta Mauthausenen makilakadaz josi zuten, duintasunari eusteagatik, espainol bezala klasifikatua izateari uko egin eta bere euskal nortasuna gordetzeagatik. Apatridei zegokien triangelu urdina josi zioten azkenik.

---

[8] Gerora Bertolt Bretchek berrartuko zuen poema hau bera.

*"Je me souviens"*[9] idatzi zuen Georges Perecek… oroitzen naiz memoria garela… memoria ala ia ezer ez. Eta gu guztiok Vaillant-Couturier edo Martxelo Bilbao sentitu beharko ginateke, gu guztiok Sobiborreko edo Treblinkako tximinietatik hodeietarantz gora zihoan kea sentitu beharko ginateke.

Eurek guztiek, gizon eta emakume horiek, beren lerrodun uniformeak urratu ondoren, Ariadneren haria, duina eta solidarioa, eskaini digute, Gizateria labirintotik atera ahal izan dadin.

[9] "Oroitzen naiz".



**Xabier Aranburu Muguruza**
1962
Usurbil

1991etik daukate preso.



C.P. Herrera de la Mancha
Apdo. 77
13200 Manzanares
Ciudad Real

## Heriotzaren korridorean

**Josu Uribetxeberria eta gainontzeko gaixo larriei, maitasunez**

1
Heriotzaren korridorean
haukate dagoeneko
pake-pakean uzten ez hauten
txakur zitalen zainpeko
"Garrantzizkoak liratekeen"
froga batzuk egiteko
baina zebiltzak luzamendutan
bihozgabeen pareko
kartzeletako politikaren
gorrotoaren menpeko.

2
Urteak dituk jaso huela
minbiziaren hozkada
eta osorik kendu ziaten
giltzurruna badaezpada
orduan Euskal Herriko espetxe
batean hinduten laga
tratamendua behar bezala
egin izateko hartara
gero atzera bidali hinduten
otserriko kartzelara.

3
"Pazientea minbiziaren
azken fasera heldu da"
dioen txosten mardul-mardula
hortxe zeukatek eskura
arduradunek halare ez ditek
eskurik bota burura
aske uztea zor ditek baina
eskeintzen ditek hildura
barrote artean bizi dezaan
heriotzaren tortura.

4
Astebete bat habil jasaten
muturreko egoera
hire bizitzaz nola jolasten
diren ikusiz sobera
pazientzia bukatu egin zaik
eta atera arte kalera
zintzotasunez erabaki duk
egitea gose greba
"duintasunez hiltzea" baituk
hautatu duan aukera.

5
Hi gose greban sartu izanak
badizkik hamaika ezten:
hor hasi baitu abertzaleen
kontzientzia inarrosten
espetxeetan borrokaldiak
onddoak bezala hazten
instituzio ta udaletatik
manifa ugari babesten
gaixo zaudeten euskal presoak
azkar kalera zaitezten.

6
Nahiz ta txakurrez josita egon
ospitaleko hire gela
nahiz ta bisitek egun hauetan
jaso murrizpen itzela
familiarrak eta lagunak
orain artean bezela
bisitatzera etortzen zaizkik
nahitasuna dariela
elkarri eman ahal izateko
maitasunaren epela.

7
Hasi hintzenetik hamalau egun
daramatzak gose greban
pentsamenduak argilunetan
egiten dikela hegan
zutik jartzeko komeriekin
larri egiteko berban
ahuldadearen zama bikoitza
gogor sentituz hiregan
abertzaleoi duintasunaren
lezioa diguk eman.

8
Orain arteko eginahalak
etziguk eman fruiturik
baina borroka aurrera ziek
duintasunak lagundurik
gizatasunak eskatzen duen
deia ahotan harturik
mendekuaren okerbidea
desegiteko presturik
espetxeetan ez geratzeko
gaixo larri den presorik.

## Hotzaren atzaparretan

**XXXVI. Santixabel bertsopaper lehiaketako 2. saria**

1
Txilen rugbiko partida
bat jokatzeko asmotan
Montevideon dugu hartu
hegazkina egun hontan
Andeetatik barrena
bapo goaz erdi lotan
barne ideiak aletzen
gogoetaren errotan
nahigabe topatu gera
ekaitzarekin borrokan
zabuka ta ziraldoka
tximisten ehunka besotan
sua sorrarazteraino
eskuin motorreko txopan
hari batetik zintzilik
gaude bizitzaren sokan.

2
Hegazkina dijoanez
beherantz erdi zabuka
gerrikoa jarri dugu
azafatek aginduta
egoeraren larriaz
ondo aski jabetuta
gehienon bihotz-taupadak
dabiltza txit uzkurtuta
beldurra eta izuaren
sentimenduek hartuta
begiak irten beharrez
garraisietan galduta...
etsi-etsian nolabait
esperantzari erreguka
mendikateak aguro
irentsi egingo gaitu-ta.

3
Pilotuak maniobra
eginik kategorian
inpaktua goxatu du
elur geruza lodian
hegazkina arrastaka
aurrera doa goldian
mendikateen arteko
goi-ordoki dotorian
astindu zitalen menpe
gabiltza dar-dar jorian
burrundak gainezka eginik
erdibitzeko zorian
bi hegalak ditugula
suaren labe gorian
leherketak sartu gaitu
isiltasunezko hobian.

4
Doi-doi egin dugunontzat
heriotzatik eskapa
bihotzaren giharretan
tristura dabil taupaka
iduri du pasa dela
suz beteriko enbata
begiek dakusatena
ikaragarria da-ta
elur-pista inguruan
hildakoak hirunaka
batzuk karbonizaturik
oraindik kea botaka
zaurituak edonondik
antsika laguntza eskaka
jakitun hilko direla
pixkanaka-pixkanaka.

5

Zaurituak artatuta
kaosaren uneetan
lanik latzena etorri da
ondorengo egunetan
berrogei hildako ilaran
hobiratuz elurretan
saminduraren eztena
sartu zaigu bihotzetan
fusilaje zatituan
babesten gera gauetan
hogei gradu zero azpiko
hotzaren atzaparretan
soilik kuluxkak eginez
albokoen magaletan
goizeko argi-printzekin
jarraitzeko ametsetan.

6

"Bilaketaren amaia"
hogeita bost egunera
irratiz ailegatu da
gure ametsak hondatzera.
Hotz latzak, infekzioek
eta goseak gainera
kideren bat hiltzen dute
egunsentitik gauera.
Orain bakarra dugunez
ihes egiteko aukera
biziraupenari buruz
aldatu dugu jarrera
sen onak duen logika
utzita alde batera
giza-haragia janez
elikatzen hasi gera.

7
Andeak zeharkatzea
bilakaturik helburu
hiruko espedizioa
kostata presturik dugu.
Jada hasteko zorian
hil ala biziko gudu
agur motz hunkigarriak
bihotz bakoitza blaitu du.
Amets bat buruan eta
eguzkia buruz-buru
bizkor abiatu dira
urratsa ekinez seguru
trinkotutako elurrak
ozen eginez zizpuru
mendikate zurietan
galtzen ikusi ditugu.

8
Hamabi egun pasa dira
abiatu zirenetik
ta etsipenak gure baitan
kabia egin du geroztik
heriotzaren mamuak
jazartzen gaitu gertutik
hotzak pasata hezurretan
gaude ezin egon zutik
irrati dontsuari esker
aditu dugu kolpetik
bi desagertu azaldu
direla Txile aldetik
hamalauok hasi gera
pozez zoratzen barrutik
zilipurdika elurretan
ia eginik burutik.



**Joxe Karlos Apeztegia Jaka**
1964
Iruñea

1992. urtetik daukate espetxean.



C.P. Puerto II
Ctra. Jerez-Rota, km. 5,4
11500 Puerto de Santa Maria
Cadiz

## Iraganaren itzulera

Hau Aljeriako istorioa da, herrialde arabiar horretan gertatu baitzen, baina hau ez da Mila Gauetako ipuin zoragarri horietakoa, oso bestelakoa baizik.

Hau Aljerren gertatu zen, 1957ko martxoaren 3an. Gau horretan Frantziako Armadako hogei paraxutista cashbako jauregi txiki batean sartu ziren, Moulay sendiaren etxean hain zuzen ere. Soldadu frantziarren burua egiten zuena gizon handia, indartsua eta ilehoria zen. Jean-Marie Le Pen zuen izena eta soldaduek "*Mon Lieutenant*" esaten zioten.

Etxe horretako nagusiak Ahmed Moulay zuen izena eta berrogeita bi urte zituen. Paraxutista frantziarrek etxeko nagusia hartu eta torturapean jarri zuten, gau osoan, bere sei semealaben eta emazte gaztearen aurrean. Garai hartan tortura saioak atxilotuen etxeetan burutzea ("l*a torture à domicile*") ohiko kontua zen Aljerren. Hortaz, Ahmed Moulayri ura lehertu arte edanarazi zioten, gorputzaren atal guztiak argindarraz zigortu zizkioten, eta abar. Gau osoan zehar. FLNko egitura zehatz bat osatzen zutenen izenak atera nahi zizkioten, baina ez zuen ezer esan. Eta torturapean hil zen.

Egunsentian Le Penek etxea utzi zuen, bertan hilotza utzirik, baina sastakai bat ahaztu zitzaion. Ahmed Moulayren seme gazteenetako batek Le Penen sastakaia hartu eta gorde egin zuen. Hamabi urteko mutiko bat zen eta Mohamed zuen izena. Zergatik egin zuen hori berak ere ez zekien ongi, baina egin zuen.

Hurrengo egunean Jean-Marie Le Pen eta bere soldaduak Moulay sendiaren etxera itzuli ziren, sastakaiaren bila. Etxea nahaspilatu zuten guztiz, baina ez zuten deus ere aurkitu. Ez omen zitzaien aski iruditu eta hurrengo egunean sastakaiaren bila itzuli ziren berriz ere, baina etxea nahaspilatu ondoren ere ezertxo ere aurkitu gabe alde egin behar izan zuten.

Mohamed Moulay mutiko gaztea zen eta, bere etxean bertan, bere aita paraxutista frantziarrek torturapean nola erail zuten ikustea izugarri gogorra izan zen hamabi urteko mutikoarentzat. Beraz, etxetik alde egin eta mendira jo zuen FLNko borrokalarien bila, zapaltzaile atzerritarren aurka borrokatzeko. Mohamed Moulay FLNko borrokalaririk gazteena bilakatu zen, eta 1962an Aljeriak independentzia erdietsi arte borrokan aritu zen.

Mohamedek, Le Peni etxean ahaztu zitzaion sastakaia ia berrogeita bost urtez gorde egin zuen, bere aitaren hiltzailearen sastakaia izan zena. Hala ere, gerla bukatu eta gero, Mohamedek ez zuen inoiz ere gorrotorik izan Frantziarekiko.

Le Pen ere Frantziara itzuli zen, bere sastakaia Aljerian betiko galdurik, baina Frantzian ez zuten inoiz auzipetu, ez zuten inoiz epaitu eta ez zuten inoiz espetxeratu. Aitzitik, urteek aurrera egin ahala, Front National eskuin muturreko alderdia sortu zuen Frantzian, eta alderdi horretako arduradun nagusia bihurtu zen.

Eta 2002. urtean Frantziako Lehendakaritzarako hauteskundeak burutu ziren, eta Jean-Marie Le Pen Front Nationaleko hautagaia izan zen. Lehenbiziko itzulia burutu eta gero, soilik bi hautagaik lortu zuten aitzina egitea, Jaques Chirac-ek, alde batetik, eta

Jean-Marie Le Penek, bestetik. Beraz, bigarren itzulian lehendakaritza aukeratzeko frantziarrek bi hautagai hauen artean bozkatu behar zuten, Chirac eta Le Pen.

Aljerian Mohamed Moulayk bere aitaren hiltzaileak Frantziako Lehendakaritza eskuratu nahi zuela jakin zuen, eta egoera guztiz larria zela iruditu zitzaion. "Eskuak odolez zikindu dituen gizon bat ezin da L'Elysée jauregian sartu", hauxe izan zen bere pentsamoldea. Eta 1957ko martxoaren 3an bere gurasoen etxean gertatu zena "*Le Monde*" egunkariari jakinarazi behar ziola erabaki zuen. Beraz, lehendakaritza aukeratzeko bigarren itzuliaren bezperan, "*Le Monde*" egunkariak Mohamed Moulayren istorioa argitaratu zuen, 2002ko maiatzaren 4an hain zuzen ere.

Izan ere, albiste larri honen berri izan zuenean Le Pen asaldatu egin zen guztiz, eta dena gezurra zela adierazi zuen, bere izena zikintzeko azpikeria hutsa besterik ez baitzen. Eta "*Le Monde*" egunkariaren aurka auzitegian salaketa egin zuen, bere izena lohitzeagatik. Salaketaren ondorioz prozesua burutu zen, eta Le Penek erraz asko irabaziko zuela uste zuen, baina epaiketan hara non agertzen den berari berrogeita bost urte lehenago Moulay sendiaren etxean ahaztu zitzaion sastakaia, kazetariek froga moduan erakutsi baitzuten.

Sastakaia Alemanian egina zen, Ruhr aldean, 1930eko hamarkadan, eta Hitlerren gazteria osatzen zuten nazi gazteek erabiltzen zuten. Eta sastakaia gordetzeko zorroan hauxe irakurtzen zen, "JMLePen 1er Rep".

Jean-Marie Le Penek hain gogoko zuen sastakaia urte asko igaro eta gero berriz ere agertu zen, 1957ko martxoaren 3an galdu

zuena. Ez zuen uste sastakaia berriz ere ikusiko zuenik, baina iragana ustekabean itzuli zitzaion, Aljerian zertan aritu zen argi eta garbi adierazteko. Eta, jakina, Le Penek epaiketa galdu zuen.

Aljeriako "gertakariak" zirela eta, Frantziako agintariek Aljerian "baketzea" ("*pacification*" hitza aipatzen zuten) lortu beharreko helburua zela erabaki zuten, eta horretarako Le Penen moduko "jendea" beharrezkoa zen. Aljeriako borrokalariak torturapean erailtzea, atxilotuak desagerraraztea, emakumeak bortxatzea, herriak suntsitzea... horixe zen baketze horren funtsa, eta Le Pen "zeregin garrantzitsu" horretan bereziki nabarmendu zen, Frantziaren ohorea eta handitasuna arriskuan omen zeudelako.

Mohamed Moulay 2012 apirilaren 28an Aljerren hil zen, hirurogeita zazpi urte zituela. Bakean beude bera eta bere aita, eta hiltzailea lehenago edo beranduago infernuan ustel dadila.

*Puerton, 2012ko maiatzean idatzia*

## Dialektoa

Euskara ez omen da hizkuntza, dialektoa baizik, eta inortxo ere ez omen da horretaz jabetu. Hizkuntzalaririk jantzienek euskararen inguruko guztiak zehatz-mehatz aztertu dituzte aspaldidanik, baina ez dira inoiz ere egia horretaz ohartu. Hala eta guztiz ere, kartzelari espainiarrak ez zeuden lotan eta euskaldunon hizkuntza dialektoa dela ondorioztatu dute. Eta hauek baino jende jantziagoa aurkitzea biziki zaila da, jakina.

Behin, Andaluzian, irratian kartzelarien sindikatu bateko ordezkaria elkarrizketatu zuten, euskal herriko egoera politiko berria zela eta, euskal presoek espetxean hori nola bizi zuten jakin nahi zutelako. Eta horretarako kartzelari bat elkarrizketatzea modurik egokiena zela bururatu zitzaien irratiko arduradunei. Eta kartzelariak hauxe esan zuen, "bai, gu zelatan aritzen gara, nola jokatzen duten edo zer egiten duten aztertzeko, ea pozik edo triste ote dauden, baina beraien dialektoan mintzatzen dira eta guk ez dugu ulertzen".

Hortaz, berriz ere, euskara eremu debekatua da kartzelarientzat, baina behitzat euskara ez dela hizkuntza badakite, dialektoa baizik. Eta kitto. Kartzelari espainiarrak kultur arloan guztiz jantzirik daude, hori ezin baita inolaz ere ukatu, eta euskal herriko jatorrizko hizkuntza dialektoa dela esan badute, hau denok onartu beharreko egia hutsa besterik ez da. Hizkuntza bakarra gaztelera da eta gainerako guztiak dialektoak edo basa hizkerak dira.

Eta hizkuntzalariak zergatik ez dira lehenago ohartu? Zertan aritu dira orain arte? Alferkerian edo, ziurrenik. Batek daki.

*Puerton, 2012ko uztailean idatzia*

## Herriko gazteari gutuna

Aupa lagun! Herrian berririk ba al dago?

Hik niri idatzitako gutuna orain dela oso gutxi jaso diat eta, elkar ezagutzen ez badugu ere, batez ere ni atxilotu nindutenean hi gaztetxoa hintzelako, hire gutuna jasotzea guztiz pozgarria suertatu zaidak, jakina.

Hik gutunean galdera batzuk egiten dizkidak, baita zalantza batzuk agertu ere, ezta? Nitaz herrian zerbait entzun duk, baina entzundako guztia egiazkoa ote den ez dakik, eta hire gutunean agertzen diren galderak eta zalantzak hortik omen zatozek, ezta? Eta horixe duk hire gutunaren helburua, galderak eta zalantzak argitzea, ezta? Horretan saiatuko nauk, behintzat.

Bai, hik entzun duan bezalaxe, zipaioek 1992ko urtarrilaren 30ean Iruñean atxilotu ninditean, Donibane auzoko Irrintzi dorretik ateratzen nintzelarik, garai hartan Euskaldunon Egunkarian kazetari gisa aritzen bainintzen. Egunkari hori 2003ko otsailaren 2an desagertu zuan, Espainiako poliziak indarrez itxi baitzuen, euskara eta euskal kultura indartzeko modu egokia zela uste zutelako. Epaiketa 2010eko apirilean burutu zuan, zazpi urte geroago, eta egunkari horretako arduradunei egunkaria Euskadi Ta Askatasuna erakundearen aldeko tresna gisa erabiltzea leporatu bazitzaien ere, azkenik denak errugabeturik suertatu zituan, baina ordurako kalte latza egina zegoan.

Egia esan, egunkari horretan lanean denbora gutxi eman banuen ere, garai hartaz oso oroitzapen onak gelditu zaizkidak.

Beno, eta esan bezala, zipaioek Iruñean atxilotu nindutean, Nafarroan aritzeko baimen berezia zutelako, Auzitegi Nazionaleko epaile batek emanik. Nik, zenbait unetan, txantxetan hauxe esaten diat, zipaioek benetan Hego Euskal Herriaren lurralde batasuna aldarrikatu nahi zutela, eta helburu hori lortzeko egokiena Nafarroan abertzaleak atxilotzea iruditu zitzaiela, Espainiako epaileen eskuetan uzteko gero.

Izan ere, Atutxaren garaia zuan eta Arratiko gizonaren "abertzaletasuna" ez zegok inolaz ere auzitan jartzerik, Espainiaren alde edozer egiteko prest baitzegoen (eta ziurrenik, gaur egun ere bai).

Oker oroitzen ez banaiz, garai hartan zipaioek zerabilten leloa hauxe zuan, "zu laguntzeko gaude", baina nire kasuan lelo hori bestelakoa bihurtu zuan, "zu atxilotzeko eta Espainia aldean espetxeratzeko gaude", edo antzeko zerbait.

Hortaz, giltzapean hogei urte luze egin ditiak, eta bereziki hauxe gogoratzen diat, espetxean egindako lehenengo astean hogeita zortzi urte bete nituela, baina hori aspaldian izan zuan, 1992ko otsailean hain zuzen ere. Geroztik hogei urte joan dituk eta tarte luze honetan denetariko uneak bizi izan ditudala esan beharra diat, batzuk gogorrak eta mikatzak, eta beste batzuk, aldiz, goxoak eta gogoangarriak. Baina hala eta guztiz ere arazo eta oztopo ororen gainetik urte luze hauetan aurrera egiteko gauza izan nauk, eta horixe garrantzitsuena iruditzen zaidak. Ez duk askotan erraza izan, baina nafarrok burugogorrak garela esaten ditek, eta agian egia izango duk, nik ez baitakit.

Espetxean askatasunik eta eskubiderik gabe hogei urte egitea ez duk kontu xamurra. Adibidez, hogei urte hauetan ez nauk behin ere Madriletik gora egon, eta gaur egun ere, Afrikatik hurbilago

nagok Euskal Herritik baino. Baina bizimodu honetara egina nagoela uste diat. Beharko, ezta?

Eta, azkenik, gaur egun nire oroitzapen gehienak espetxeari nolabait loturik daudela aipatuko diat, aspaldidanik hauxe baita nire bizilekua. Beraz, hamabost edo hamazazpi urte atzera egiten dudanean, gertaera zehatzen bat edo gogora ekartzeko, hori egitean une hartan ere ni espetxean nengoela ohartzen nauk, esan bezala, hauxe baita nire bizilekua aspaldidanik, eta kalean aske bizi nintzeneko garaia zinez urruti ikusten diat. Ziurrenik gaur egun kalean banengo ogia erostera joateko ere GPS delakoa beharko nikek, ez baitakit. Hau gehiegikeria duk. Ez kasurik egin.

Dena den, ibilbide luze hau egin eta gero, nire buruaz nolabait harro nagoela esan zezakeat, harrokeriarik gabe harro. Bide hau egiteko gauza izan bainaiz, eta aurrerantzean ere berdin jarraitu nahiko nikek. Indartsu sentitzen nauk, behintzat.

Beno, besterik ez, mutiko. Ez zekiat nirekiko hire zalantzak argitu diren edo hire galderek erantzun egokia lortu duten, baina honela ez izatekotan, berriz idatz iezadak eta berriz ahaleginduko nauk. Zaindu hadi. Herriko gazte baten gutuna jasotzea izugarri atsegin izan zaidak.

Gaur eta bihar, atzo eta herenegun bezalaxe, borrokan aurrera egin beharra zegok.

Besarkada goxoa jaso ezak.

*Puerton, 2012ko uztailean idatzia*

## Les Misérables

Espetxea literaturarekiko zaletasuna garatzeko toki egokia ez dela uste izaten da, eta hau ez da guztiz gezurra, giroak ez baitu asko laguntzen, ez horixe. Adibidez, presoen zaintzaren ardura dutenek lanean gehien bat egunkariak irakurtzen dituzte, batez ere kirol egunkariak ("*Marca*" -ala Madrid-) eta eskuin muturreko egunkariak ("*Abc*", "*La Razón*", "*El Mundo*"...), Espainian zer gertatzen den ongi jakin beharra baitago. Eta helburu hori lortzeko ez omen dago egunkari horiek baino baliabide egokiagorik, jakina.

Bai, kartzelariek egunkariak irakurtzea gogoko dute, zeregin honek beraien lan denboraren tarte zabala betetzen baitu, baina hala eta guztiz ere literatura jasoa maite dutenak ez dira gutxi. Eta Frantzian sortutako literaturak arrakasta itzela lortzen du zenbait kartzelariren artean. Idazleren bat nabarmentzekotan, bereziki Victor Hugo idazlea gogokoen dutela esan liteke, berak idatzitako zenbait liburutan kartzelarien izaera modu egokian islaturik agertzen baita. Eta euskal presoek hau ederki dakite. Euskal preso bati gertatu zitzaiona esandakoaren adibide garbia izan daiteke.

Euskal preso hark eskutitza idatzi zion beste espetxe batean zegoen beste euskal preso bati. Bere bizimoduaren berri eman nahi zion, eta eskutitz horretan tartetxo bat utzi zuen, berarekin batera zeuden beste euskal presoek (guztira hiru ziren) agur ohartxo bana idatz zezaten, lerro gutxi batzuk besterik ez. Eta horrela egin zuten.

Izan ere, eskutitza bukatu ondoren beste espetxe batean zegoen beste kideari bidali zion euskal presoak. Eskutitza zabalik bidali zuen, kartzelariek euskal presoek idatzitako eskutitz guztiguztiak irakurtzen dituztelako. Hala ere, hurrengo egunean kartzelariek eskutitza atzera bidali zioten euskal presoari, eta eskutitz hori ezin zela bideratu jakinarazi zioten. Eskutitza idatzi eta bidali zuen euskal presoaren beste bi kideek lerro motz batzuk idatziak zituzten. Kartzelarien arabera, eskutitz horretan preso bakar batek baino ezin zuen idatzi. Eta eskutitz horri bidea moztu zioten.

Hortaz, hori erabaki zutenek Frantziako literatura izugarri maite zuten, Victor Hugok idatzitako eleberriak bereziki, eta gogokoen "*Les Misérables*", liburu horrek kartzelari horien izaera ezin hobeki islatzen baitu. Begikotasun berezia zioten eleberri horri, eta ziurrenik Espainiako espetxe gehienetan kartzelariek gehien irakurtzen duten liburua dela esatea ez litzateke inolaz ere gehiegikeria izanen, ez horixe.

*Puerton, 2012ko maiatzean idatzia*

## Our revenge

Euskal preso politikook Euskal Herria zapaltzen dutenen mendekua egunero pairatzen dugu, hauxe baita gurekin jokatzeko Espainiak erakusten duen jokabide bakarra. Euskal Herriaren eskubideen aldeko borrokari lotu gintzaizkion eta borroka horren ondorioz espetxean gaude, gutariko askok askatasunik eta eskubiderik gabe urte luzeak eman ditugula. Gure borrokaren arrazoiak guztiz politikoak dira, baina Espainia aldean ez dute hau inolaz ere onartu nahi, beraien ustez euskal herrian ez baitago gatazka politikorik. Euskal Herria suntsitu nahi dute eta helburu hori lortzeko euskal presoak suntsitu behar dituzte lehenik.

Beraz, Euskal Herriko espetxeetan egoteko damutu eta barkamena eskatu beharra dago, legean esaten dena betetzeko ezinbesteko baldintza baita.

Eta zigorra betea duten presoek espetxetik ateratzeko damutu eta barkamena eskatu beharra dute, hori ez egitekotan ez baitira espetxetik aterako. Bestalde, gaixotasun larri eta sendaezina pairatzen duten presoek ere espetxetik ateratzeko damutu eta barkamena eskatu beharra dute.

Euskal presoek Euskal Herriari dagozkion eskubideen aldeko borroka erabat eta betiko baztertu beharra dute, eta hori ez egitekotan ez dira espetxetik aterako. Eta borroka hori kaltegarria eta alferrikakoa izan dela aitortu beharko dute. Espetxetik ateratzeko Euskal Herria Espainia dela aldarrikatu behar dute, eta Euskal Herriari bere geroaren jabe izatea dagokiola adieraztea guztiz baztertu beharko dute, hori Espainiaren aurka egitea omen baita.

Eta espetxeetan bizi-baldintzak gero eta gogorragoak izango dira, damutuak lortzeko euskal presoak gogor estutu beharra baitago.

Hauexek dira etsaiak euskal presoen aurka burutzen duen mendekuaren ardatz nagusiak. Giltzapean dauden euskal borrokalari abertzaleak suntsitzea, ezinbesteko helburua baita Euskal Herriari inolako eskubiderik onartzen ez dioten zapaltzaileentzat.

Eta, horretxegatik, legez dagozkigun eskubideak eskuratzeko aldez aurretik damutu eta barkamena eskatu beharra dugula behin eta berriz esaten zaigu.

Baina euskal presoen aurka gorrotorik biziena erakusten duten horiek, ez dakite euskal preso politikoen mendekua beraiena baino askoz hobea izango dela; mingarriagoa, gogorragoa, eraginkorragoa. Etsaiak ez du deus ere susmatzen mendeku horretaz, eta lasai dabil, baina euskal presoak aspaldian mendeku hori burutzeko lanean hasiak dira.

Bobby Sandsek aspaldian esandako hitzak, Sinn Fein alderdiak Falls Road etorbidean (West Belfast) duen egoitza nagusiaren horman egindako horma-irudian irakur daitezke: "*Our revenge will be the laugh of our children*" (Gure mendekua gure haurren irria izango da). Horixe bera izango da Espainiako bazterretan giltzaperaturiko euskal borrokalari abertzaleen mendekua. Gure mendekua jasangaitza suertatuko zaio etsaiari.

Gure haurren irria gure mendekurik eraginkorrena izango da, eta mendeku horrek euskal Herriaren etsaiak euskal presoen aurka buruturiko mendeku zital eta gaiztoa alferrikakoa izan dela egiaztatuko du.

Bobby Sandsen hitzek ez dute indarrik galdu.

*Puerton, 202ko ekainean idatzia*



**Jokin Urain Larrinaga**
1959
Mendaro

1986an atxilotu zuten.
Urte hauetan hainbat liburu argitaratu ditu: *Izaina* (AAB, 1990), *Adlotse* (Txalaparta, 1992), *Gatibu sortu nintzen* (Susa, 2000), *Errotarria* (Susa, 2006), *Ez dago etxean* (Susa, 2010).



C.P. La Moraleja
34210 Dueñas
Palencia

## Zain gaudenon denbora

### Muskerra horman

Ilunabarrak lekarkeen freskuraren egarri irten naiz leihora, gortinei albora eraginda; uztail honek itoko gaitu neurriz gainera luzatzen bada. Txolarreak, araba-zozoak, enarak dabiltza kantu eta txilio… Hala ere oraintxe itzartu direla esango nukeen, hegalari jendearen erretira ordua ez balitz.

Musker bat azaldu da aurreko horman; teilatuaren hegalpean aurrera dator, bizkor etorri ere, segika duen txolarrearengandik ihesi.

– Pakito, Pakito! Egin diot deiadar alboko txabolora-. Ikusten al duk aurrean muskertxo hori?

Gure leihoetan zalaparta sumatzean ospa egin du txolarreak, eta hortxe geratu da muskerra, gure aurrean bosten bat metrora dagoen eraikuntzaren horman, teilatuaren hegalpean. Horizta da; ez gure sugandila eta muskerren ohiko kolorekoa.

– Gekoa duk hori; salamankesa. Sasoi honetan, ilunabarrean eta gauean, ateratzen dituk teilape eta gordelekuetatik. Mordoa zagok - diost Pakitok.

Ez dira, noski, berriak patariok leku hauetan; hemen ibiliko ziren geko hauek edo euren aurrekoak lehen ere, duela hogei-hogeita bost urte alegia, eta agian ikusi nituen noizbait, baina nire oroimenak ez du gorde hauen akordurik. Gogoratzen eta ahazteko adina kiribil badu beti zain gaudenon denborak.

Egunen joanean neurez ikasi dut egia dela Pakitok dioena. Ilun-abarrean hasten dira salamankesok teilape eta beste ezkutalekuetatik irtenda horman zehar agertzen. Ilundu ahala ugaldu egiten dira; txiki samarrak batzuk, handixeagoak besteak. Gaueko jendea agi denez.

Gure galeriako ziega hauen leihoen aurrean lau-bost metrora paraleloan daukagu okindegia edo ez dakit zer lantegitzat darabilten erakina. Ezker-eskuin beste bi eraikuntza daudenez, etxe-bitarte itxia da gure moduluaren eta aurreko eraikin horren artean dagoena. Etxe-bitarte itxia bai, baina ez erabat iluna; Pakitoren leihoaren aurrean ezkerretara, etxe-bitartea ixten duen horman dago farola, isiotuta egoten dena ilunabarretik goizera. Gauez argi horretara inguratzen direnez eltxo, gau tximeleta, kakalardo eta genero guztietako  inkontzienteak, pagotxaren jakitun dira gekoak eta ez dute hutsik egiten. Baina farolaren ingurura ez ezik, horman alde batera eta bestera ibiltzen dira, gora eta behera, eta lurrera jaitsita ere bai harantz eta honantz.

Horman gora edo joatean, edo harantz eta honantz dabiltzanean, ez dute bide-sail luzerik egiten abialdi batean. Joanaldi labur bat abiada bizian egin, eta geratu egiten dira, berriro beste joanaldi bizkor bat, eta geratu. Denbora luzean geldi egoten dira askotan, zirkinik txikiena ere egin gabe, ehizakiren baten zain, eta, eltxo, kakalardo edo antzekoren bat ikusten dutenean, mugimendu elektrikoan harrapatzen dute.

**Euli-urte**

Ilunabarretan ohiko entretenimendu bilakatu zait aurreko horman edo ezker aldera dagoen farolaren ingurura begira jarri eta patari hauei erreparatzea.

Egun asko igaro baino lehen ohartu naiz beti ezkutaleku bertsuetatik irteten direla gekoak. Eguna beti txoko berean, bakoitzak aukeratuta daukan zuloan alegia, igarotzen dute dirudienez. Lurraldekoiak dira nonbait. Baina lurraldekoiak izateaz gain, ematen du euren ibili eta ehizaldietarako ere ohiko bideak eta inguruak dituztela.

Teilape eta hormetako txoko batzuk zaintzen ditut ilunabarrero; gordeleku horietatik irteten dira begiz jota dauzkadan lau-bost salamankesa, eta horman behera jaisten dira ia elkarri segika, gure aurreko eta ezkerreko eraikinen hormek lurrean hiruangelua egiten duten bazterrerera. Hain zuzen hortxe jariatzen ditu ur tanta batzuk aurreko eraikin horretatik datorren hodi batek, eta esango nuke mamorro bazka oparoa aurkitzen dutela bertan. Litekeena da ehizara ordez hezetasun edo ur bila jaistea ere txoko horretara, asko edo gutxi edan beharko baitute dinosauro ttattarrok.

Gaueko hamarrak, hamaikak, hamabiak… Bost, sei, zazpi geko konta ditzaket horman, batzuk harantzago, besteak honantzago, teilapetik hurbilago edo urrutiago. Oraintxe batek egiten du eltxo edo mamarroa atzemateko tximista mugimendua; oraintxe egiten du beste batek metro eta erdi inguruko joanaldi bizkorra. Harrigarria iruditzen zait zein eroso dabiltzan koskarik gabeko horma leun horretan, edo zenbat denbora egoten diren geldi, laprast eginda erortzeko arriskurik eta beldurrik gabe, itxura

batera. Badira horman gora teilatura igarotzen direnak ere; teila-lerrotik teila-lerrora jauzitxoak eginez joaten dira alde batetik bestera.

Zain egoten ohitutako harrapariak dirudite, eta pazientzia agortezina dutenak. Hamaiketan neure leihoaren parean aurreko horman ikusi dudan gekoa, leku eta postura berean egon liteke ordu erdi geroago; eta,  mugitzen hasita, bi abialdi bizkorretan, egin ditzake horman hamar metro, eta leiho batetik desagertu eraikin barrura.

2010eko urte hau, nik besterik ezagutu ez dudan modukoa da, euli-urtea. Patio-orduetan egoteko daukagun lekuan, zinez amorragarria eta ia erabat ezinezkoa izaten da apur batean irakurtzen edo idazten aritzea. Zer esanik ez soseguz gosaltzea; lanak izaten ditugu baso eta katilukada zaindu eta koilara edo zurrupada eulirik gabe ahoratzen… Telefonoz deitzera joaten garenetan, jasan ezina izaten da eulitea, zinez ernegarria, eta ez nintzateke harrituko haserre gaudela pentsatuko balute telefonoaren bestaldetik gurekin dihardutenek.

Bisita kabinetan bero sapa gehitzen zaio eulien izurriteari, bai bisitariak eta bai geu ez elkarrekin baina egoerarekin amorrarazteraino.

Ez da, nonbait, hemengoa bakarrik aurtengo euli izurrite hau. Telebistak esan du Euskal Herriko herriren batean ere antzera dabiltzala, eta sukaldeko mahai gaineko platerak euliz beteta erakutsi ditu pantailak.

Berez amorragarri eta nazkagarria den eulia, are jasangaitzago bihurtzen da mahaian, janari artean. Eta, hain ugaria eta ugalkorra ematen duenez, ez dakit nola uxa daitezkeen, edo nola ezabatu edo bakandu, negua bitartean zeharo petraldu eta zoratuko ez bagara.

– Geko horietako batzuk harrapatu eta lotu behar genizkikek, geuk egon behar dugun lekuetan euli amorragarriok ehizatu ditzaten - esan diot Pakitori.

– Baina, traila ipinita, egingo ote lukete eulitan?

## Gekoa lanbrotan

Gaztelako uda bero eta eulitsua, amorragarria zinez, ustekabean joan da, urtaroek ohi dutenez. Ez digu astirik eman gekoak eulitan ipintzeko, trailan lotuta. Udazkeneko hego-haizeekin bakandu egin dira salamankesak, eta negua baino lehen guztiz desagertu. Eulirik ere ez da ageri eta gaitzerdi.

Alde bakoitzean hamar-hamaika metro dituen karratua da gure patioa. Hortxe ibiltzen gara pasioan, hortxe egiten dugu kirola, pilotan aritzen gara eskuz edo palaz… Eta horrelaxe ari ginen negu honetako arratsalde hotz lanbrotsuan Pakito eta biok, palekin pilotari eman eta eman, hezurrak mugitu eta soina berotu nahian, pilotakadaren batek mugiarazi eta bere zulotik irtenda horman gora doala ikusi dugunean gekoa, eskuz harrapatzeko baino goraxeago.

Negu hotzak gogortuta dago bera ere, eta hibernaziotik esnatu ezinean; udan ikusten ziren haien bizkortasunik eta mugimendu elektrikorik gabe, mantso doa horman gora, baina geratzeko asmorik gabe. Pakito erratzen baten bila doan bitartean, buruan daramadan txanoa jaurti diot. Huts egin du ordea, eta gekoak aurrera darrai, gorago ikusi duen zuloan ostendu nahian seguru asko,eta Pakitok ezin du atzeman erratzarekin.

Hartu lurretik eta berriro jaurti diot txanoa, eta berriz eta berriz, ez dakit zenbat aldiz. Batzuetan huts egin dut, beste batzuetan bete-betean jo, baina lapak haitzari bezala eusten dio hormari itsatsita… Halako batean, baina, txanoarekin batera jaitsi da geko horizta, eta atzaparkada bizkorrean atzitu du Pakitok.

Ur botilekin-eta prestatu diogu gekoari ahalik eta lekurik txukunena, eta planak egin ditugu: datorren udan, euliak hasten direnean, geu egoten garen mahai honen inguruan lotu behar

dugu pataria. Janaririk ez zaio faltako euliak harrapatuz… Baina, geko bakarrarekin egingo ote dugu euliak bakan samar mantentzeko modurik?

Kanpoko eguraldi hotz eta bustitik barruko apur bat epelago honetara aldatuta, laster berpiztu da gure etxe-abere berria, baina ez du ematen asko mugituzale; kaiolaren txoko batean geldi egoten da denbora gehienean. Uda-udazkenean amaraun sareetan geratu ziren euliren batzuk, patioan aurkitu dugun mamorroren bat edo beste… eman dizkiogu, baina ez du bat bera ere jan.

Alabaina, udaberriaren lehen zantzuak  hasteaz batera sumatu diogu beste bizitasun bat, beste mugimendu batzuk. Urteko lehen euli bakanak azaldu dira goizerdi eguzkitsuan, eta horietako bat edo beste ematen dizkiogu patio orduan.

Aztarrenik utzi gabe jan ditu euliak biharamun goizerako. Neguko lozorro, hibernazio edo dena delakotik guztiz esnatuta eta bizitua dirudi gure gekoak. Ematen dizkiogun eltxo eta mamorroetatik batzuk jaten ditu… Euliak bakan batzuk baizik ez dabiltza oraindik, eta ez daude harrapatzen errazak. Mamorroak, berriz, urri samar egotez gain, ez dakigu  zeintzuk izan daitezkeen egokiak, jangarriak. Bai baitirudi mizkin antxa dugula dinosauroa, ez duela jan nahi edozein mamorro mota. Kakalardoak, mota ezberdinetako koleopteroak, errefusatzen ditu batez ere, handiak nahiz txikiak, eta ez da izango oskol gogortxoa dutelako soilik. Mamorro txikienetako asko pozoitsuak direla ematen du, eta horregatik muzin egiten diela esango nuke. Uste genuena baino zailagoa gertatzen ari da gure salamankesa  gobernatzea.

## Gekoa lanbrotan

Pentsatu dugu badela garaia gure pataria hezten hasteko. Izatez gure asmoa ez da gekoa heztea, geu egoten garen lekuko euliak janaraztea baizik, eta horretarako lotuta eduki behar, bere ehiza-barrutia sail horretara mugatuko bada alegia. Nola edo hala eutsi ezean laster joango litzateke beste nonbaitera, euliak gure ernegurako lagata. Baina gekoa, berez, bezatu gabea, ahalik eta basatiena eta barrabastuena izatea ez genuke txartzat joko inola ere. Aitzitik, komenigarria dateke, seguruenera, bere sena primarioena ez galtzea, mamarroak eta batez ere euliak elikagaitzat ez ezik ehizatu eta jan edo birrindu beharreko etsaitzat har ditzan. Suhartasun ahalik eta goriena izan dezala, alegia, eulitan, eta goseak ez ezik euliekiko etsaigo apalezinak eraman dezala hegalari amorragarri horiek harrapatzera. Lau hilabete inguruko eulitea daukagu aurrean, eta, iazko euli jasa ernegarria gogoratuta, beroa baino erruz jasangaitzagoa iruditzen zait hegalarien izurritea.

Darabiltzagun asmoak zuzen ateraz gero, geu egoten garen leku honetan lau-bost geko ipintzea izan daiteke konponbidea. Bada, gainera, gure artean, burubide hori aurkikuntza mirarizkotzat duenik.

– Dozena erdi bat harrapatu eta hemen, mahai inguruan, lotzen baditiagu, ederki egingo ditiate eulien kontuak -bota du Xamarrok.

– Dozena erdi? Bakarra harrapatzeak ez ziguan lan makala eman negu gorrian. Orain, eguraldia epeltzen hasita, aise bizkorragoak zaudek, eta atzematen zailagoak…

Dena dela, listari luzexka batekin lotu gerritik, eta patioko leihoan utzi dugu salamankesa afalorduan txabolora joan garenean.

Biharamun goizean patiora jaistean, leihoaren ezpiko malba, perrexil eta lore artera jaitsi eta ezkutatuta dago, gerritik lotzen duen listariak ematen dioneraino joanda, eta hortik argitara irteteko asmorik gabe itxura denez. Listaritik tira egin arren, tematì eusten dio bere babesguneari, "agerira gabe eusten badiot, salbu naiz" esanez bezala.

Gekoek ez dute beste muskerrek edo sugandilek bezalako erperik; edozein horma edo lekutan itsasten diren ile fin nimiñoak dituzte hanka bakoitzeko bosna atzamarretan. Horma leunean bezala ibil daitezke lurrean edo teilatuaren hegalpean, edo inolako koskarik edo heldulekurik ez duen botilan buruz behera. Gekoen hankapeok ukimen latz antxa dutela nabaritzen da atzamarra pasatzen badiezu.

Helduen tamaina bataz beste hamar-hamabi zentimetrokoa bazik ez bada ere, euren txikian abere gogorrak direla argi dago. Gure honek tinko eusten dio malba eta lore artean. Listariari egiten dizkiogun tiraldiak gorabehera, esan liteke nahiago duela bere setan lehertu eta gure artera gehiago ez agertu.

## Ostera kaiolara

Lotuta eduki dugun bi-hiru egunetan ez diogu aurrerapenik sumatu guk nahi genukeen zentzuan; ez da, nonbait, trailan erabiltzeko aberea. Botilarekin-eta eginda daukagun kaiolan sartu dugu atzera, lokarria kenduta, eta mamorro, eltxo, euli eta gisako ibiltari arinen bila ekin diogu jakin emateko.

Batzuetan ez da gauza handirik behar izaten patio-denboran aski entretenimendu eta zeregin edukitzeko. Kirola, eskulanak, irakurketa edo ikasketak, paseatzea… eguneroko jardunak dira gehienontzat. Mundua konpontzeak ere denbora kentzen digu, eta hala ere goizero atzera dena deseginda eta nahastuta aurkitzen dugu. Bere jaidura izaki, gure mundu petral honek, gaur konpondu ustean lagatakoa biharko anabasa bilakatzea, birrintzea, hondarrezko gaztelua legez.

Eta orain, ohiko lan horiek guztiak ez ezik, huts egin ezineko beharra daukagu salamankesarentzat euli eta mamorro batzuk harrapatzea. Baina ez nolanahi harrapatzea laster ohartu baikara bizirik ematen dizkigunak jaten dituela bakarrik, hilda daudenak bertan utziz.

Kakalardo mota zehatz bat da, lepagain gorrizta duen beltx txikia, udaberria lehenengo azaldu den mamorro ugaria. Egunetan ez da ia beste mamorro motarik azaldu patiora eta, gure gekoak batzuk jaten dituen arren, nabarmena da horiek ez direla gustukoen dituen modukoak.

Udaberriak aurrera egin ahala bakandu eta desagertu dira lepagain gorridun mamorro batzuk, eta beste batzuk hasi dira azaltzen.

Egunez egun patioan azaltzen diren mamorroei erreparatuta, mota bakoizak bere denboraldia duela esan liteke. Batzuek desagertzera egin ahala agertzen dira beste batzuk, eta gero eta ugariagoak dira, eguraldia berotzen doan heinean, mamorroak eta mamorro motak. Goizeko lehen ordu fresko antxean batere mamorrorik gabe egon daiteke patioa, baina eguzkia kartzelaren hormen gainetik azaltzen denean, haize firrindaren baten edo ez dakit zeren eraginez, hainbat koleoptero txiki eta handixeago jausten dira. Hegalariak dira, noski, gehienak edo guztiak, non lurreratu aukeratzerakoan erakusten duten gaitasunak ez du miresgarria ematen baina.

Patiora erortzen edo jaisten diren mamorro horietatik -tarteka matxinsaltoren bat ere bai- ematen dizkiogu gekoari, oraindik bakan samar dabiltzan euliak baino harrapatzen errazagoak direlako besteak beste.

## Gekoen akelarrea

Eguraldiak epeletik berora egin duenean, nabarmen ugaldu dira euliak ez ezik gekoak ere. Ilunabarretan, egun batzuetan goizago, besteetan beranduago, teilatupetik, argi-farolaren ostetik, aurreko eraikineko leihoetatik agertu dira, txiki-txikiak batzuk, handiak beste batzuk. Farolaren argitara inguratzen dira handik eta hemendik, edo lurreraino jaisten, eltxo eta mamorren ehizan bakoitzak bere gunea, bere lurraldea ikuskatuz. Beti teilape edo zulo beretik irten eta, batzuetan presaka bezala ziztu bizian, bestetan egonaldi luzeak eginez, egunero  oso antzeko ibilbidea egiten dute, baina ohikoaz gain bide berrietara ere saiatzen dira dirudienez.

Inoiz geko handiren batek bere bidean txikiren bat ikusiz gero, eraso egingo dio, eta halakoetan ikusten dut txikia izan arren zein bizkor joan daitekeen horman zehar ihesean. Baina ez da beti handiena izaten besteari ihes eginarazten diona.

Beste batzuetan, bi gekok bidean topo egiten dutenean, bata bestearen zelatan bezala geratzen dira, harik eta bietako bat, nire ustez arra dena, mugimendu bitxiak egiten hasten den arte. Emea geldi dagoen bitartean, arra, alboka jarri eta gorputza okertuz, bere isats mehe eta emearen baino luzeagoa mugituz eta zigorra bailuen astinduz, poliki-poliki hurbildu zaio. Emearengana iristean, usainka ari zaiola ematen du arrak; zirkinik egin gabe jarraitzen duen emeari gainera igotzen zaio albo batetik, mantso-mantso jaisten da bestetik, eta bere bidean aurrera jarraitzen du bakoitzak.

Behin eta bitan baino gehiagotan ikusi ditut ar eta emeen arteko hurbilketa moduak, eta esango nuke bero handia den gauetan egiten dituztela batik bat.

Gaua ehizan eta gainerako zereginetan eman ondoren, egunsentia baino lehen ezkutatzen dira euren txokoetara. Baina hauen artean ere badira nonbait beti argi ibiltzen ez direnak, eta goiztiriak ustekabean harrapatzen ditu edonon. Nabari da ahal duten tokian, gertuen daukaten zuloan ezkutatzen direla halakoetan. Goizetan behera jaisten garenean, patioko leihoan dauzkagun kaxa eta trasteen artean aurkitu dezakegu bakarren bat; patioko zoruaren eta hormaren arteko pitzaduretatik hazten diren perrexil eta malben artean egongo da beste egunen batean besteren bat; patio ertzeko zokogunean atzemango dugu besteren bat hurrengoan… Eta baita barruan ere, gure mahaipeetan kaxen artean ezkutatuta, gauean euliak harrapatzen ibili ondoren agian. Txiki-txikiak, ertainak, handiak… horizta gardenak dirudite batzuek, ilunagoak dira besteak. Zalaparta bizkorrean abiatzen dira horman gora ihesi, baldekada urarekin landaredia bustitzen hasten denean Pablo.

Xamorrok, eskuetan duen liburutik burua jasota, euliekin zapuztuta eta ernegu airearekin bota du ea al ginen geratu gekoak eulitan ipintzekotan; patio bazterretik edo leihotik uxatzea ez dela hori lortzeko modurik egokiena…

– Uztaila diagu laster eta gero eta euli gehiago zagok hemen; eulien inbasioa baino nahiago nikek salamankesena.

– Txaboloan ipiniko nikek neuk ere bat -dio Josebak-, baina jatuna izan dadila; leihoa zabaldu orduko betetzen duk…

## Eulitan

– Aurretik errazago harrapatzen dira euliak -dio Tinok-; atzetik saiatzen bazara, sarriago egingo duzu huts.

Ur botila darabil galtzarbean, eta hamarren bat euli bertan. Tximista bezain bizkor jaurtitzen dio eskua euliari, eta bat gehiago botilaratzen du…

– Kolpea botatzean esku-ahur zabalak sortzen duen haize zurrunbiloan zagok misterio guzia -hasi du azalpena Josebak-. Atzetik tiratzen badiok kolpea, esku zabalak sortzen duen aire zurrunbilo horrek berorrek haizatzen zizkiok hegoak, ihes egiteko abantaila handia eskainiz. Horretaz ohartu nauk hamaika saioren ondoren; zigarroaren keari eskua zabalik kolpe bat emanez ikusten duk ederki zelako zurrunbiloak sortzen diren eta aireak zer mugimendu egiten dituen. Hori guztia kontuan izan beharra zagok euliak harrapatzerakoan.

Goizeko kirola egin ohi du Josebak ere; soinketa bihurri batzuk aurrena eta korrika saioa ondoren. Azken bolada honetan presaka ibiltzen da hala ere, eta, lehen hiru ordu laurdenetan egiten zuen korrikaldia, ordu erdian burutzen du orain, Tinori jarraika beti ere. Lehen kirolean luzatzen zuten denbora eulitan ematen dute orain hauek biek eta Artzaik, eta ikusgarria da zelako trebezia lortu duten, hirurek hiruretara, egun batetik bestera erruz ugaldu diren euliak harrapatzen.

Baina kontua ez da euliak edozein moduz harrapatzea, bizirik atzematea baizik.

– Akatuta daudenak ere jaten dituzte -dio Artzaik, iruñear gazteak.

– Horixe! Beharko jan, besterik ematen ez badiek -erantzun dio zorrotz Josebak-. Edukitzekotan, ahal den ondoen zaindu eta gobernatuta eduki behar duk pataria. Euli hilak jangarri direnik iruditu ere ez zaiok egingo, nahiz eta goseak estututakoan denak jan. Geuk ere zernahi txerrikeria jango genikek gose greban gaudenean esate baterako -amaitu du errieta, mahai ertzean zegoen eulia esku kolpe elektrikoan  atzematearekin batera.

Egonlekuaren beste bazterrean ikusten dut Tino, euliak harrapatzen bera ere. Eguraldia berotzen hastean erruz ugaldu ziren arren, Artzaik, Tinok eta Josebak egiten duten ehizarekin ederki bakandu dira dagoeneko. Esango nuke lehian dabiltzala hirurok, azaltzen diren euliak zeinek lehenago harrapatu, beharra ere izango dute eta. Izan ere Tinok badauzka bi geko, Josebak beste bi, Artzaik bat, eta neuk beste bat. Sei geko, beraz, eta eman ahala jaten dutenak guztiak ere, ondoezik ez daukatenean behintzat. Egun batzuk ia batere jan gabe egin baititu nireak,harik eta azal zaharra bota duen arte. Orain berpiztu egin dela ematen du, eta gosea ere berpiztu egin zaio; zalaparta bortitzean atzeman eta irensten ditu ematen dizkiodan euliak eta, zenbait egunetan, haize eta euri egun ohi baino freskoagoren bat gertatzen denean, ondo kostata harrapatu ondoren eman dizkiodan hiru-lau euliek gosea baretu baino areagotu egin diotela dirudi.

Hau idazten ari naizen bitartean, ur botila galtzarbean hartuta eulitan dabiltza Tino eta Joseba. Esku ezberdinarekin ireki edo ixten dute botilaren tapoia; eskuinekoarekin eulia atzeman eta botila barrura bidali. Hori da prozesua. Baina bere zailtasunak ditu. Lehenik, bizirik harrapatu behar dute eulia; gero, tapoia kendu botilari, eskuan daukaten eulia barrura sartu, eta tapa itxi azkenik. Baina botilan dauzkaten euliek  ihes egin gabe

sartu behar dute atzeman berria. Eta egin kontu bost, hamar, hamabost euli egon daitezkeela botila horretan. Esan daiteke, beraz, teknikoki lan konplikatua dela, lan delikatua, euli kontuan izan arren…

Eulia hegalari iheskorra ea atzeman zaila da berez, eulitan aritu ez denak pentsa lezakeena baino areago. Zeldara bat sartzen zaizunean hasten bazara harrapatzen eta hiru-lau kolpe jaurtikita ihes egiten badizu, gero ea zailagoa izango zaizu non geratu den ikustea. Ezkutatzen eta inguruarekin mimetizatzen ikasten du berehala, ondoan pasa eta ez da mugituko, kamuflatuta geratuko da ohepean, edo zapatilan, edo telebistan, edo… eta etsi egingo duzu eta hor konpon esanda utzi dezakezu gauean oheratzean. Goizeko lehen argiarekin aurpegian jarriko zaizu ordea; eskutada batekin uxatu eta lotan jarraitu nahiko duzu, baina eulia berriro etorriko zaizu aurpegira, eta berriro eta berriro, guztiz ernegatuta jaikiarazten zaituen arte.

## Arrautza txiki zuria

– Ez zekiat  zer gertatzen den hemen; botilak ez zaukak zulorik, baina euliek ihes egiten zidatek nonbaitetik -dio Josebak marmarra dariola, eta Tino ere arrazoi berdinagatik zapuztuta dabilela dirudi-. Hik zer ematen diok patariari? Ez haut eulitan ikusten -bota dit, susmoren bat egosten ari denaren doinuan.

Berez euli gutxi dabil hemen, etortzen diren guztiak edo gehienak bi  hauek harrapatzen dituztelako. Artzai ere aritzen da eulitan, baina azken aldian bi hauek botiletatik batik bat, patiora paseatzera ateratzen diren abaguneetan, bere begi handiekin hara eta hona begiratu eta barre txikia eginez.

Hauekin lehian galtzaile aterako naizela etsita, moduluko preso arrunt batekin egin behar izan dut tratua: zigarroa dozena euliren truke. Pakete erdia lortzeko adina harrapatuko luke mugatuko ez banio.

Zabor organikoarekin konposta egiteari ekin dio, azkenik, Josebak, patio bazterrean kaxa ipinita. Horra bota ditu azken bi asteotan patioko landareen hosto zimel eta ihartuak, lore eroriak, afaritako hanburgesak, Argentinatik ekarria bide den ardikiaren zati janezinak eta bildu ahal izan duen guztia. Badira egun batzuk kaxa horretan sortzen diren harrak biltzen hasia dela, eulien urrialdian gekoak bazkatzeko.

Miresgarria egiten zait antzuolarraren irudia, ehun kiloko gizonarena, botila galtzarbean, euliak harrapatzen ari denean, edo konpost kaxatik harrak batzen.

Ez dakit zenbateko hutsegite maila daukaten eulitan, ehuneko zenbat keinaldi huts egiten dituzten eta ehuneko zenbaten atzematen. Esango nuke eguraldiaren arabera makalago edo bizkorrago dabiltzala euliak eta, beraz, errazago edo nekezago harrapatzen dituztela egun batzuetan edo besteetan. Bestalde, euliak harrapatzeko ez ezik erreflexuak zorrozteko ere ariketa bikaina da seguru asko egiten dutena.

Uda badoa, eta udarekin batera joan da Artzai askatasunean, bere hutsunea gure artean lagata. Agurrak, besarkadak… Ea laster ikusten dugun elkar Iruñean edo Txindokin.

Udazkeneko hego-haizeak etorri dira beste behin, beste behin etxe-minez enpo, eta goizalde freskoak… Amaitu da aurtengo euliaroa. Gekoak askatu egin behar dituztela esaten ari dira Joseba eta Tino.

Gaur, zigarro batentzat adina euli ez dit batu hornitzaileak, baina salamankesak berak eman dit ustekabea, txepetxarena baino zerbait txikiagoa datekeen arrautza errunez. Arrautza txiki zuria.

Ez dakit zehatz zenbat, baina hilabeteetako inkubazioaldia omen dute gekoen arrautzek. Oraingoz presarik ez daukagunez, gekoa leihoan askatu eta arrautzari begira geratu natzaio, zain.

*Herrera de la Manchan, 2011ko udazkenean*



**Aitzol Iriondo Yarza**
1977
Donostia

2008.urtean atxilotuta.



Bois D´Arcy - Maison d´arrêt des Yvelines
5 bis, Rue Alexandre Turpault
78395 Bois d´Arcy
Frantzia

## Artherria

### Sarrera

Bai. Itsasorik gabe arraina zer da? Ezer ez. Eta itsasoa arrainik gabe? Tristea. Arraina behar du itsasoak itsaso izango bada. Ez bat, ez bi, ez denak berdinak. Infinituki ezberdin badira hainbat hobe. Baina itsasorik ez bada… Itsasoa zaindu, mimatu, goxatu, alaitu, biziberritu, arnasberritu…maitatu behar da. Horixe da gure Amerria. Amerriarenak gara, naiz. Konfidantza egiten digu, eta munduan barna libre ibiltzeko aukera eman. *Nekez uzten baitu sorterria, sustraiak hain dituenak.*

Zer dira identitateak? Nortasunak? Begiratzen al dugu gure barruetara? Gure barrurako lehio ertzean pausatu eta… Bada zerbait aldakorra. Bada zerbait moldakorra. Bada zerbait aldagaitza. Baina zer zehazki? Zenbat katez lotu ote ditugu, haur ginela bururatzen zitzaizkigun zera horiek? Eta zein zaila egiten zaidan, zehazki zer dagoen ikustea. Arakatuta ere beldurrak, izuak, ziurtasun ezak…

Iraultza gure baitatik hasten ote da? Norbere baitatik, ala… GEURE baitatik? Ba al da inor mundo honetan inguratzen duen horretatik isolatuta bizi denik, ba? (ezpada isolamenduan duten presoa) Ekosistema baten parte gara, naiz, eta elkarrekintza batean bizi gara, naiz. Klimak, jendarteak, sistema politiko ekonomikoak, paisaiak, eta abarrek baldintzatuta. Bai, nire baitatik ere hasten da iraultza. Baina… Hondakinen sistema aldatu ezean baliorik ba al du nik hondakin guztiak behar bezala bereizteak? Ezpada, nire kontzientzia lasaitzeko. Bai, nire baitatik ere hasten da iraultza, baina arrainak itsasoa behar du. Itsasoak… hamaika korronte koloretsu eta bizi. Eta nik Gu behar dut, askea, libre izango banaiz. Bietan jarrai.

## 1go agerraldia

Eguna abailtzen ari da. Basora jada ez da inor sartzen. Hiria ahaztu da mendiaz eta izaki bitxien ordu libreak pixkanaka esnatzen hasi dira. Anek, zuhurtzia nagusi, gehiago itxaron nahi du zuhaixkarte itxian babes hartuta. Euria tanta lodiz hasi badu ere. Beldur da bizilagun kontakatiluak ikusiko duen eta ez du arriskatu eta gaua zalantza amorragarrian pasatu nahi. Plastiko iluna atera du bizkarzakutik eta burutik behera dena estaltzen duela jarri. Bertan da, uda amaierako ilunabarra.

Afaria mahairatzen ari dira Bittor eta Ezki. Enarak eta bere ahizpa txiki Gixunek egongela okupatua dute, trenak, panpinak, tamaina orotako kuboak, zalditxoak, denak benganean zabalduta. Gelako argiak itzalita daude, etxe guziko pertsianak jaitsita eta sarrerako atea giltzaz itxi gabe. Afari mahaian bostentzako platerak paratuak.

Enara: Ama, gaur etorriko da Ane?

Ezki: Bai.

Egongelako atea ireki da orduan eta zapata takoidunak eskutan aurretik dituela

Ane: Kaixo kaixo!!!

Gixune: Ane!!! Zure zai gaude, beira, ikustezu ze trenbide haundia egin degun ta zaldiak, beira, honek Mixki du izena eta horrek Kaxkamelon, ta panpina hau amak zeukan gordeta aspalditik eta Enarak aurkitu zun ta hona ekarri zun ta Kamiltxo izena du ta Ane… zergatik zaude bustita?

Besotan hartu du, muxu eman dio masailean.

Ane: Kaixo Enara, egia da amari lapurtu diozula Kamiltxo?

Enara: Eeeeez. Aurkitu nun, armayuan gordeta zakan ta esan nion "ama, hartu ahal det?" ta "bai, Enara" esan zian. Ez nun lapurtu e.

Bittor sartu da egongelan.

Bittor: Kaixo Ane, dena ondo?

Ane: Bai, egon. Banoia zuekin.

Sukaldera sartu dira biak.

Ezki: Kaixo Ane, ene, blai eginda zatoz eta! Segi dutxara segituan ta laster etorri, hamar minutu barru hasiko gera afaltzen. Dutxa laburra hartu beharko dezu, gaur Gixune arratsaldean dutxatu da ta.

Ane: Ondo, bale, banoia ta seiduan nator.

Sukaldeko atea ireki eta logeletara atera da.

## 2. Agerraldia

Oilarra esnatu orduko atera dira Itsaso eta Harri zazpigarren portaletik, bosgarren pisutik eskilarak banan bana eta mamuen pare jaitsi ondoan. Marinel irlandesen jaka beltza okotza estaltzeraino igoa darama mutilak, eta eskuzaku lodia dilindan belauneraino jakaz ongi babesturik doa neska beltzarana ere. Biak pausu bizkorrez galdu dira kalearen buruan ezkerrera eginda. Ez aurre ezkerreko begi ertzarekin atzea begiztatu gabe. Auto grisa dute zain hiriko garaje batean. Bost minuturen buruan auto gris zilarkarak hiri ixila zeharkatu du errepide arauak tentuz errespetatuz.

Harri: Itsaso, zisternetara?

Itsaso: Bai, onena.

Baserritarrek erabili ohi duten ur zisterna gris bat ageri den pista batean ixildu dute motorra. Bi itzal jaitsi dira auto gris batetik eta kofrea irekita matrikula plaka joku parea atera dute mugimendu mekanikoz. Taladro zarata entzuten da eta atzeko plaka jausi da lurrera. Harrik hartu du hau eta eskuan duen bestea ongi kokatuta errematxeekin josi du autora. Itsasok aurrekoarekin operazioa errepikatzen duen bitartean. Behin amaituta, autoari itxura pittin bat aldatu eta atzera berriz ere errepide mortuan dira. Itsasok gidatzen du orain eta playri eman dio, hatz ikutu singleaz. Napoka Hiriaren kantu leuna sortu du CD irakurleak.

Itsaso: Hi, Harri, zenbat kalkulatzen duk?

Harri: Sei bat ordu. (*altzoan daraman Michelin mapari begi kolpea botata).* Ezagutzen dun bidea eztun?

Itsaso: Soraluzera arte bai, gero hortik aurrera esango didak.

Harri: Ondo. Beraz, lo kuluxka egiten utziko didan (nagiak atereaz modu exageratuan).

Itsaso: Bai, hori. Hi, aizak, atzoko albistegia entzun al huan?

Harri: Erdizka. Loak hartu nindun ohartzerako. Berririk bai?

Itsaso: Politikeroen pitokeriak. Gero, ordea, entzun nian zera hori, hik maite duan ahots eztiko esatariaren Saioa (irrifar maltzurrez) orgasmoari buruz aritu zituan, Agurtzane Hormatza delako mintzalagunarekin.

Harri: A bai? Eta? *(ipurdia atzera ekarrita, interes berpiztuarekin).*

Itsaso: Eta? Hik badakizkian kontuak baino ez zizkian aipatu. Badakik, emakumeon puntu erogenoak, laztanak… ezer berririk ez berorrentzat.

Harri: Ja-ja. Entzun ninan bai, gauean intziriren bat. Eta ni, ametsetan hintzelakoan.

Itsaso: Bakarra?! Uf!, jakingo bahu… hhhmmmmmm (ahots sentsuala jarriz) una trepa la desnudez de otro cuerpo/ una encuentra la rama dorada y la codicia/ abre las puertas de otro reino inaugura otra carencia/ una se deja llevar por sacudimientos extremos

Harri: Itsaso, goizeko zazpiak ere ez ditun ta uztan ortxe lasai e.
Itsaso: Jaaaajaja. Etzak esan! Anai txikia esnatu al zaik? Aber aber… jaaaajaja!!!!

Harri: Bueno eta, zer zionan Agurtzanek?

Itsaso: Joño!, ezagun duk bai, entzule fina haizela: Agur- tza-ne. Etxekoa bailitzan.

Harri: …

Itsaso: Laztanen eta hizketa erotiko goxoaren garrantzia aipatu zian. Bidea, Anttonio, bidea duk garrantzitsua, aproximazioa, bide ertzeko lore eta ezpainak, okerdura eta tolesdurak, kanpaitxo eta belarri ixkinako hizketa hauspo beroak. Mihi bustiaren zurrupadatxoak nahinon, han eta hemen (Harriri begiratu dio, honek mapa eta errepidea baino beste zerbait du erretinan irudi). Harri!

Harri: Bai, ze!!! *(asaldatuta bezala).* Ze, ze, Itsaso, zer ikusi dun?

Itsaso: Jaaajaja!!! Harri, la ostia, nora joan haiz? Hi!, erne behar haut gero e!

Harri: Bai, bai, hik segizan hola eta esango didan nola zelata behar ditudan bidegurutze malapartatuak. Begira, *(burua eskuinera biratu gabe, diximuloz)* horko C4 granatea *(Arkatza paperean iltzatuz apuntatu du zerbait).*

Itsaso: Hartu duk?

Harri: Bai. Eta barrukoak?

Itsaso: Bakarra zuan, portablea belarrian, berrogeiren bat, erabat soildua.

Harri: Beraz, bart ongi pasatu dun Agurtzaneren kontura.

Itsaso: Ez ba, zirtoan ari ninduan, motel. Ze uste duk, ba, bestela ukondokoa joko nian, hik zer edo zertan laguntzeko, motel.

*(Zehar begirada bota dio mutilak, eta Itsasok orduan, barreari ezin eutsita, eskua luzatu dio lepaldera)* Toz hona, pilott hori.

Harri: Ño, Itsa, gaur gogoz habil e.

Itsaso: Gogoz!, oraintxe esan duk. Toz, Harri, toz jajaja!!!

Harri: Ale ale, Itsa, utzidan maparekin eta segizan Aurrera.
*(Harrik irratira pasatu du autoko soinu banda, autorik gabeko errepidetan barna doazelarik begiak adi dituztela biak).*

"Tu-tu-tu-tuuuu Goizeko zazpiak dira….. Albiste faktoria Euskadi Irratian… Joxe Juan Ugalde. Txun-txun txun! Kaixo egunon guztioi, azken orduko albiste batekin zabaldu behar dugu albistegia. Oraintxe Europa Press agentziak jakitera eman duenez Frantziar eta Espainiar polizien, Ertzantzaren eta Foruzaingoaren iturriak aipatuz, goizaldera Nafarroa Beherako Donapaleun, Gipuzkoako Lasarte Orian, Bizkaiko Otxandion, Arabako Bastidan eta Iruñean, dispertsioa salatuz auto itzuliak eta odoleztatu bana agertu da errepidea mozten. Antza denez… eta itxaron … bai, oraintxe Frantziako poliziak berri eman duenez Strasbourgeko Giza Eskubideen Egoitza Nagusiaren aurrean ere beste auto itzulikatu eta odoleztatu bat jarri dute eta gurutze moredun ikurrina bat zuen antza aurrean. Eta… bai… bai… beste auto itzulikatu bat odolez beterik hau ere, agertu omen da Puerto de Santa Mariako kartzela atarian. Berri gehiago izan orduko…

Itsaso: Harri!!!! ( autoa bazterrean geratu eta elkarri besarkatu dira biak emozio betean) Laugarren ekintza saioa! Aupa zuek!!!! Ona ona!!!!!

Harri: Itsaso, kasu orain e, oroitu lehenago ikusi degun autoaz. Ados?

(Autoa berriz ere bidean jarri eta Aurrera egin dute).

### 3. Agerraldia

*Gau ilunean bi kopetargi ikusten dira ibilian bizkarzaku handi bana dutela, kilker kantu eta hontz uluak tartekatzen dira solas baxuekin.*

Saseta: Hilekoarekin?

Txilar: Odoletan nago zikindu dut atzamarrekin ispiluan. Odoletan nago baina ez naiz emeago sentitzen. Zergatik diozu ba, Saseta?

Saseta: Ahotsa okertua nabari zaizu ta.

Txilar: Atzo jaitsi zitzaidan ta uf… Kalez beterik daude usainak, kea ari du harripetik. Sutu egin dira teilatuak, masail gorritu bat da zerua albotik pasatzean, orratzetatik tantaka ari dira segundo odolkarek, lotsaturik erori dira hostoak ukitu orduko, Odoletan dago oinez naraman lurra ere, sortu zuen sabeletik isuriz doa barrunbeek onartu nahi ez didaten jarioa.

Saseta: Eta ez dakit zergatik ukatu behar dudan naizena: emakume bat odoletan.

Txilar: Ezagutzen duzu, e? Ba bai, uste nuen larri behar nuela gaur, baina tira, zuek besarkatzeko gogoa izango da ze, orain askozaz hobe bainaiz.

Txilar: Aizu Saseta, jun zinan Lamartera ala?

Saseta: Bai. Iragan ortziralean hain xuxen. Eta zer plazerra! (eta keinu zehatzekin lagunduz emango ditu azalpen guziak) Herria kultur komunitate bilakatua dute. Begizu, hemen nekazal eta kontsumo kooperatibak du xoko ederra. Parean, bada arteleku-faktoria-sormen ororako lantegi zahar-berritu handia. Berrehun metrora, esker paretaren kontran gazte biblioteka…

Txilar: Interesgarria, interesgarria benetan.

Saseta: Baa, eskualde mailan antolatuak dira orobat. Buruntzen ekimena. Nolabait beharrak plangintzatzen dituzte, herrietan adostu, epe luzerako proiektuak akordatu. Esparru guztiak aintzat hartuz. Hezkuntza adibidez, herriaren bizitzaren parte da. Atez atekoarekin hasi ziren eta begira…

Txilar: Garapen zirkularra osatu. Bidea egin. Bidean segi… Aizu, Saseta, eta? Manifestuaren inguruan?

Saseta: Ari dira, Txilar. Beharba urte erdi edo beharko dute. Sendo dabiltza baina.

Txilar: hmmmm urte erdi? … hortxe larri behar dute.

*(Hirugarren kopetargia sartu da. Auritz da).*

Biek: Ongi, Auritz?

Auritz: Bikain. Sei oren izan naiz ezpel artean gorderik. Ez da nehor pasatu. Iluntzean egin dut gibelerat amiñi bat eta dena zen beltz. Bidaia ere lasaia izan dugu. Ontsa beraz. Zuek?

Biek: Ederto.

*(Oinez eta solasean jarraitu dute hirurek ilunpean, hontzen ulu artean).*

Auritz: To, Hor duzue Aneren etxea. Txilar, ekarri dituzu gauerako lunetak?

(Bizkarzakutik atera ditu Txilarrek eta Auritzi pasa dizkio).

Auritz: Dena ongi. Goazen.

## 4. Agerraldia

*(Euskadi Irratiko albistegia berriz. Jada hasita dago… neska baten ahotsean orain…).*

… azken asteetan gertatzen ari diren ekintza arraroen haritik doaz antza denez hauek ere eta polizia iturriek ez dute baztertzen ondorengo minutuetan halako gehiagoren berri izatea.

Gogoan izango duzuenez, uztailaren 14ean, Ipar Euskal Herriko hiru hiriburuetan udaletxe inguruetako kaleetako zuhaitzak odoleztaturiko bandera frantsesez beteta esnatu ziren eta lau egun beranduago Hego Euskal Herriko lau hiriburuetakoen txanda izan zen.

Kasu honetan bandera espainiar garbiak zintzilikatzeaz gain, odolez eginiko pintaketa bana margotu zuten udaletxe atari bakoitzean: "Arriba España" lemarekin. Eta ez dira azkenak izan. Orain hiru aste Zuberoako Larraine herrian udatiarren etxe oso bat goitik behera zerri odolez pintaturik esnatu zen. Poliziak ez daki nor dagoen ekintza guzti hauen atzean, baina ez du baztertzen guztiek elkarrekin lotura izatea"

*Anek gelako argia itzaltzen du. Eta beste argi bat pizten da, argi lausoa, oheburukoa. Ane ohera sartzen da eta bertan dauden Enara eta Gixuneri ipuin bat kontatzen hasten da (liburu bat eskuan duela izan liteke). Bera kontatzen hasi ahala, eskenan sartuko dira ipuineko pertsonaiak (Inaxi, Gaxuxa eta Tasio) eta ipuina antzeztuko dute. Narratzaile papera Anek berak egingo du ohetik.*

"Zazpi buruko herensugea agertu omen zen behinola Buruntzapeko Antxineako bordan. Sekula ikusi gabekoa! Horregatik, lasterka zihoan mutil bat, lerdea ahotik zintzilik arnas estuka. Inaxi zaharrak Gaxuxari esnontzia pasa zionenan izan zen. Elkarri begiratu ziotenean entzun zuten hotsa. Tok-tok. Aterantza begiratu eta Taxio zen, arnas estuka eta lerdea zeriola.

– Zazpi burukua Antxinen!

– Hara!, orainguan errekorra, Gaxuxa. Zeinek esan zinan seikotik etzala pasako?

– Nik ez, amona. Hoi, zea, Aladapeneko Koxmek ez al zinan esan?

– Taxio, sartu txokoa! Hartzak potoka bete esne ta kontaiguk ze berri dan zirkuan.

– Zirkua?! Ze zirko, amona! Taxio, ze zirkotaz ai dek Inaxi zaharra?

– Zirkua???!!! Inaxi, ze zirkotaz ari haiz ba?

Aulki gorritik artilezko jertsea baztertuta Taxio mahai zabalera inguratu zen. Inaxi, azeri zaharra zen bai. Beti bazuen trikimailuren bat mihi puntan, jendea erakartzeko. Eta beti lortu. Han zen Taxio esne katilukada beroa esku artean. Urrupa eta urrupa.

– Zirkua. Ez altzan atzo zirkua herrin edo?

– Ez amona, zirkua ez, Eliza zaharreko festa hunan atzo.

– Eliza, eliza. Hoixe ba, zirkua galanta! Erroi zahar ta guzti, hoi baino zirku haundigoik!

– Ze erroi zahar, Inaxi?

Gazteek ez zuten pitorik ulertzen. Erroi zaharrak, zirkua… Inaxi zaharrak burua makalduta ote zuen? Elkarri begira eta keinu arraroak eginez zeuden Taxio eta Gaxuxa. "***Erroi zahar***" deitura zaharra zan, Inaxi ama zeneko garaikoa edo zaharragoa akaso. Aaaaaskoz zaharragoa ere ziurrenik. Haren gurasoei ikasia izango zen noski edo aiton amonei beharbada, auskalo. Kontua zen, *erroi zaharra* Elizako apaizei jarritako goitizen herrikoia zela.

Herriko apaiz gezurtiei batez ere. Baina haiek ere zaharregi egin ziren halako batean eta Eliza hutsik geratu zen. Hala, Lasarteko umeak egun batean bertara sartu eta bandera pirata jarri zuten gurutze handienaren puntan. Orduz geroztik ***Piratenia*** deitu zitzaion Eliza zaharrari.

– Sotanadunak, zein bestela!

– Inaxi, baina Eliza zaharrean ya etzagon apaizik. Aldegin zitenan.

Orain haurrena den eta atzo festa egin zitenan.

Amona harritu antzean begira geratu zitzaien bi gazteei, zeharka, amets bat jaio zenik sinestu ezinda. Erotu ote ziren ba? Eliza umeek okupatu? Txoratu ziren gero gazte hauek! Harraskara hurbildu zen gosariko katilu parea garbitzera. Garbitzeko asmoz baino gehiago, irribarrea leiho zabalari eskaintzera. Mundua aldatzen ari ote zen benetan? Ume mukitzu hauek…

(*Umeak lo dira. Ane, ixil ixilik gelatik atera da, itzalita*).

## 5. Agerraldia.

*(Aneren etxean sartu dira Saseta, Txilar eta Auritz. Eskenan ageri dira, laurak, oinetakoak eskutan, oinutsik beraz, eta ixil ixilik agurtzen dute elkar. Besarkada estu, goxo eta indartsuak emanaz elkarri. Gero mahai baten bueltan jartzen dira hirurak, motxilak-eta baztertuta. Kafe edo te kikarak banatu eta plangintza bati buruz hasten dira hitz egiten. Ez da ezer entzuten, soilik tarteka hitzen bat edo beste, ahopeka. ArtHerRiaren bilera bat da*).

AHTa.

Nola? (*zurrumurruak* nola nola nola…).

Errepidean (*zurrumurruak* zein zein zein…) N1a (non non non…).

Erdigunean, Ezkio Itsason (zerekin zerekin zerekin…).

Xiringa bat, erraldoia! Eta lurra, eta odola…

(*Beltzez jantzi dira. Badoaz*).

## 6. Agerraldia.

*(Ane eta Saseta ageri dira taulan. Bakoitza alde batean. Ez dakigu kartzelan dauden, sasian edo kalean. Publikoari mintzo zaie, bakoitza bere txandan. Bata altxa eta hitz egiten hasten delarik, bestea makurtu eta ilunpean geratzen da.*)

***Sasetak:***

Zer egiten du hiru egunez enboskaturik, jan gabe, egon den gerrilariak, arrastaka, bere lau kideekin batera milimetroz milimetro, zazpi orduren ostean ihes egitea lortzen duenean? E, Zer? Zer egiten du? Kideei begiratu eta irribarre.

Bankuak etxetik bidali dituen mainguak, sei gormutuek eta lau itsuek… Zer? *Hogeita seigarren karrikaren kantoian* etxe hutsa okupatu dutenean? E? Zer? Zer egiten dute? Elkar begiratu, elkar ukitu eta irribarre.

Eta *mitard*era, zigor zeldara makildua eraman duten presoak? Zer egin du bere lau burkideen oihuak entzun dituenean berarekin elkartasunez *mitard*eko ziega zikinetara bidean? E? Zer? Zer egiten du? Irrintzia bota eta irribarre.

(*Ixilunea eta ondoren Ane hasten da, goxo hasieran*…).

Ane: Atea irekiko balidate gaur ez nindukete geldirik harrapatuko… (*ixilunea*).

Dena dago gure baitan.

Ilusio zehatzak besterik ez zarete zuok, objektu mugiezinok. Argitsuak. Liluragarriak. Baina ilusioak baino ez. Ukitu eta zaus! Des-

agertu zarete zaborretan.Zonbiek baino ez dute inkapazidade hori.

Bizitza (eskerrak!) ezin da hor kabitu
Ezin dute geldirik harrapatu.
Eta han doa harresiak sortu ahala borrokari dei eginaz
Inork ezin dezakeelako hesitu emakume makurrezinaren borondatea
Ez da inor birrindu dezakeenik
Eta hor dabil
Zonbiek ez beste guziok bere egiteko zain, BIZITZA!
Prostitutarik eskuzabalena!
Gure eztarrien irrintzi bakoitzean dantzan.

(*Segidan Sasetaren txanda*).

Ez dakit
ez dut gogoratzen
zein horma artean
aurkituko ginen aurreneko aldiz
zure bihotza
edo nire gogoa
kaiolatzen zutenetan.
Denbora gehiegi egin genuenetan
gero gure atzean
itzala falta zitzaigula
irten ginenean.
Barruan zerbait utzi genuen
eta ez ginen ohartu
sentimendu gehiegi agian
gero berreskuratu ezinik genbiltzalako.
Beranduegi zen
itzalpeko denbora murrizteko.

**7. Agerraldia.**

*Ezkio itsasoko ekintza. Labur, hitzik gabe. Gaua da, beltzez jantzita lau pertsona. Aitzur pala eta pikatxoiekin. Xiringa erraldoi bat ere badaramate. Eta gorri koloreko poto bat (Zerri odola jartzen du). Auto baten zarata entzuten da ziztuan pasatzen. N1 errepide bazterrean daude ezkutatuta. Bat-batean eta bizkor bizkor, lurra botatzen hasten dira bide erdira, Xiringa erraldoi bat ziztatu dute errepidearen erdian eta odola jariatzen dute bertan. Kartelak ere jarri dituzte: AHT! KASU! TAV! STOP! eta badoaz.???*

**8. Agerraldia.**

*Dena ilun da. Foko bat pizten da. Bi lo zakutan izarrei begira Itsaso eta Harri. Hontza uluka.*

Itsaso: Harri, ikusi dek?

Harri: Zer?

Itsaso: Izar bizia.

Harri: Ez.

Itsaso: Jode, halako gaua ta hi begiak itxita. Hau marka.

Harri: Pentsatzen ari nindunan.

Itsaso: Orain ere. Ya.

Harri: Itsa… izar handiak eta txikiak bakarrik ote dira unibertsoan? Begira, izar denek diten tamaina desberdina. Bizitzak mila kolore. Eta gu, handi ta txiki, zuri ta beltz, zero ta bat, eme ta ar… Eta horren kulpaz zenbat kartzela! Zenbat murru! Zenbat hesi!

Itsaso: *sssxxx*… Harri, *sssxxx*… entzun zazu… nor ote da?

(*Itsasok paper bat destolesten du lozakutik aterata eta irakurtzen hasten da*).

Gorputzak askatu nahirik
borrokatzen gara kontzientzia batekin
isilarekin, nahasturarekin, giltzapetuarekin
ikusten ez dugu heriotza hasiz goizero
zer garen erabat jakin gabe oheratuz gauero
izan bagarela pentsatuz
ez garela jakin gabe.
Izan gintezkeena ahaztuta.

Itsaso: Zapaltzailearen arima zapaldua, Harri. Zer sentitzen diagu Amerika esplotatu eta ustiatzera, jatorrizko Amerikarrak suntsitzera, joandakoen abizen euskaldunak aditzean? Zer sentitzen ote dik madrildar iraultzailearen bihotzak, euskaldunon Independentzia eta Askatasuna oihua Guardia Zibilek suz apaltzen dutenean?

Harri: Eta gizonok, Itsaso? (*eserita jartzen da, publikoari begira*). Eta nik, zuok, arrok, ze zizare klase sortzen zaigu hemen barruan emakumeek bandera morea haizatzen dutenean?

Itsaso: Eta marisorgin emeek…

Harri (moztuz): Marisorginak?!

Itsaso: Bai, Marisorginak, *Mantis religiosa* hoiek. (*eta Harrirenga-na itzultzen da bihurri*). Marisorgin emeek arraren hazia xurgatu etaaaaa kraxka kraxka (*Harriri eskuekin gorputzan kraxka kraxka eginez*) kraxka kraxka arraren buru ireeensten dutenean? Glug.

…

(*Berriz ere gora begira biak*).

Itsaso (*galdera bakoitzaren ondoren pausa txikiak eginez*): Harri, ez ote gaituk denok emakume nolabait? Eme kume… edo Emarkume? Hiretzat zer duk ar ala eme izatea? Ene ene, gaur ipar izarra ere nahastuko diagu

Harri: Baaaa, Itsa, nik galdetu izan zionat hori nire buruari. Umetatik.

Itsaso: Zientzialarien arabera…

Harri (*mostuz*): Gizonetatik nork ez ote zion inoiz galdetu bere buruari, "ez ote nauk eme, ar baten gorputzean?" Edo… "zergatik izan diat inor ohartu ez den eme joera hori? Zergatik kilikatu naik Unaik…"

Itsaso (*xuxpiro bat eginez*): Behin norbaitek esan omen zian, milioi bat gaixotasun diferente direla maitasuna. Finean hormona isurketa ezberdin batek bereizten omen gaitik.

Harri: Fisikoki. Ados. Eta bestela?... Fisikoaz aparte… Burua bihotza… Jarrerak, jokabideak, pentsatzeko modua, mundumira… Zerk bereizten gaitin? Non zagon marra? Ba al den marrarik? Ba al den etenik?

(*Ixilune bat eta Itsaso kantatzen hasten da, Berri Txarraken "Non Bestela?" Kantua da*).

Gauez beharko du
esan bestela
nola ihes egin zaintzarik eta estuena
duen ziegatik
gure begi itsuen begiradapetik
giltzape propiotik
norbere izenaren zama astunetik

Itsaso: Bizkaiera eta gipuzkera. Ba al dek etenik?... Hartu Donostiar bat eta Bermiotar bat eta entzun. Bai, noski, dudik gabe esango dek: Pello bizkaitarra, Axun gipuzkoarra. Ya. Baina hartu orain Mutrikuar bat eta Ondarrutar bat, edo… Mendaroarra eta Elgoibartarra? Edo Oiartzuarra eta Lesakarra. Zein da gipuzkera, zein bizkaiera, zein goi nafarrera?

Harri: Itsa, begira ipar izarra! Mozkortuta dabilela zirudin, ñir-ñir ñir-ñir!... Itsa, baina… zer ari den, gipuzkeraz ala bizkaieraz? Arra den ala emea?

Itsaso: Harri, zirika edo?

Harri: Hmmm… Yaaaaa… Trantsizioak badaudela esan nahi den, berez ez dagoela etenik… Mendaroar eta Elgoibartarrak ere badaudela…

Itsaso: Horixe ba. Horixe ba. Harri. Eta gu, hala jaio direlako… Amets gipuzkoarra eta Araitz bizkaitarra. Amets arra eta Araitz emea. Hain arin! Pentsamendu Etenaren Tirania, Harri. Richard Dawkins.

Harri: Nik bizitzaren obserbazioa deitzea nahiago.

(*Ixilunea, eta Itsasok berriz kantu berdinari ekiten dio*).

Hegan egingo dut
kanta honetan bezela
mugaren batetik itxoingo dizut
non bestela?

(*Ixilunea, eta berriz Itsaso hasten da*).

Itsaso: Harri. Zer litzateke gure bizitza Vatikanorik existitu izan ez balitz?

Harri: Edo De Lancrerik jaio ez balitz, hara bestea! Edo Torquemadarik!

Itsaso (*kolpez eseri eta Harriren aldera okertuta*): Eta egingo bagenikek? Eh, Harri? Egingo bagenikek?

Harri: Zer? Orain? Hemen?!

Itsaso: Ze hemen, ze orain?! Ez, ez laztana, ez. Ekintza, potto, ekintza! Begira, hauxe dek buruan dedana. Loiolako santutegia. Leku aproposena dek. Opuseko unibertsitatea ere bai. Tira, jar dezagun lehen aukera. Loiola.

*(eta kontakizuna hasten du, bitartean beste aktoreak agertzen dira, eta egiten duten hori da Itsasoren kontakizuna, beraz, hasiera hasten da bere ahotsez, baina gero ahotsa ixiltzen da eta biak desagertzen dira. Itsasori entzuten zaio bakarrik, 13 apostoluen aipamena da. Beraz, aktoreak geratzen dira taulan, eta hauxe da egiten dutena*:)

Goizeko laurak. Urrats odoleztatu batzuk Santutegitik hasi eta kalerantz… 13 mosaiko…

*(Loiolako santutegia ageri da pantailan. Urrats odoleztatuak santutegitik ateratzen dira eta jada oholtzan egiten dituzte urratsak, pantailatik hasi eta publikoruntz. Gero, 13 mosaiko aipatzen ditu Itsasok (13 apostoluak), hauetako bat agertzen da taulan, urratsen amaieran. Mosaiko sexuanitzak dira, biluziak, bularrak eta zakila, edo alua eta ileak bularrean etab. Kate apurtuak dituzte oinetatik zintzilik. Eta margoketa bat egiten dute:)*

***Emar kume?***
*(Eta badoaz).*

**9. Agerraldia.**

*Itsaso eta Harrirekin elkartzen dira Ane, Txilar, Saseta eta Auritz. Etxe batera sartzen dira seiak. Azken bilera da: Mahai baten inguruan biltzen dira. Bruselako ekintza prestatzen ari dira. Izara luze bat josten bezala ari dira, eta margotzen. Pantailan Bruselako parlamentua ageri da. Eta hitzak...*

*(Nahaste borrastean, ez du inporta nork zer esaten duen, hori bai, bakoitzak lerro bat)*
Helioz
Bai, Heliozkoak.
Zenbat?
Hamasei. Erraldoiak.
Haria?
Hiru. Luzeak.
Kurduak zenbat?
Lau. Haien barne mugak bezala.
Parisko Komunakoak animatu dira. Eta Castillako komuneroak!
*(Guztiek)* Aupa zuek!
Zenbat izara zati beraz?
Gureaz gain?
Bai!
*(Guztiek)* Hamaika!
*(Eta ahots batek,galdera bat)* Eta Manifestua?

*(Denak bat batean paralizatuta geratzen dira, denbora gelditu balitz bezala. Orduan irratiko albistegia entzuten da).*

… Berriemaile Bruselatik Iratxe Etxebarria… Egunon Iratxe.

Egunon bai. Zuk esan bezala Bruselako Europarlamentua izara erraldoi batek estalirik esnatu da. Goitik behera estalita. Orain-

txe bertan hamarka polizia eta dozenaka kazetari eta kamera daude hemen inguruan. Hesiturik daukate inguru osoa, baina argi ikus dezakegu, oso argi, izaran idatzia dagoena. Hizkuntza askotan idatzia dagoela ikus dezakegu. Goiburu bat du ingelesez "*New States?*" eta azpian kolore ezberdinetako izara banatan esaldi bat, dirudienez munduko hizkuntza ezberdinetan. Guk euskaraz idatzia dagoena irakurtzen ahal dugu. Eta bertan dio: "*Zergatik ez? Herriek Askatasuna*" Eta izararen azpian berriz ere ingelesez: "*Of Course. Yes We Can*". Hor ari dira suhiltzaile eta poliziak lanean, baina oraingoz behintzat ez dute izara erretiratzerik lortu. Berri gehiago jakin ahala…

## 10. Agerraldia. Azkena.

*Argi denak itzaltzen dira. Irudi bat pantailan: Anboto, eta erreka baten soinua. Zuberoako xirula. Itzaltzen da dena. Berriz piztu eta mahai bat: aurrean ikur bat duen izara koloretsu bat eta ondoan ikurrina, gurutzea zuri beharrean more kolorekoa, atzean pertsona bat kareta batekin. Eskuan galtzerdi batekin egindako panpin modukoa, baina mahaiazpian du, ez da ikusten. Horrek hitzegingo du gero. Bi minutu dena ixilik. Badirudi zerbait ez dabilela. Publikoa ezeroso. Argiak itzaltzen dira. Beste minutu bat. Hitzegiten hasten da ahots bat:*

***Ikasle, langile, Andere Gizon GizAndere. Hartu artea eskuan ametsa buruan maitasuna bihotzean. Nik*** *(eta foko batek eskenatokiko pertsona argitzen du, kareta kendu eta kaputxa bat jantzita ageri da, galtzerdi panpina mahai azpitik mikrora gerturatuta eta hizketan. Ez da beste ezer ikusten).*

***Zuk** (eta publikoko pertsona bat altxata argitzen du, hau ere kaputxarekin eta kareta bat buru gainera igota).* ***Guk** (eta eskenatokian dagoen multzoa argitzen du beste fokoak, multzo koloretsua da, denek dute kareta kolore ezberdinekoa, jantziak, denetarikoak).*

***Emakumeok, akabatu zonbia, egin irrifar. ARTEA ari dugu. Ni ArtHerRia gara. Geurea da Ekintza. Neurea Erabakia. Ametsa Iraultzaren Ipar. Iparra Iraultzaren Amets.***

*(Argiak itzaltzen dira bat-batean. Hiru segundura ahots batek orduan…).*

***Sasi arteko MANIFESTUA:*** *(dio).*
*(Foko bat pizten da. Papera eskutan norbait dabil, alderik alde, kareta morea jantzirik. Manifestua irakurtzen du).*

***Sortzez bizi gara***
***harriak zirkuluan jarriz sortzen gara.***

***Edonon bizi gintezke, baina hemen bizi gara.***
***Gure baitan daramagun herrialdea inguruan adierazten zaigun probintzia baino egokiago,***
***ederragoa eta duinagoa da.***
***Ez gaude hobeki begiak itxita.***

***Markatuko ditut pauso berriak***
***larre bera ez dezadan bi aldiz azpiratu.***
***Minik arraroena ematen dit***
***galderak askatzeko dituen horren begiradak***
***Minik arraroena ematen dit***
***bere hesiak askatzen ari den alabari***
***hesi pisutsu eta artifizialenak***

*ezarri dizkioten horien faltseriak.*
*Aurkituko dut naizen honetaz libre gozatzeko*
*manera*
*zapaltzen dudana sortzen ari garen bihozkada*
*itzaletan daudenak askatu*
*eta gu geu askatzeko planifikazioa.*
*Deiadarra.*

*Desmaskaratu eta malko pintatuak ezabatu.*

*(Azken esaldia esatearekin bat, Kareta kentzera doalarik argiak itzaltzen dira. Beste hiru segundura Anbotoren irudia pantailan. Eta irrintzi bat).*

*2012ko Lasarteko ekitaldirako egindako lana*

Bibliografia:

Leire Bilbao. *Ezkatak.*
Richard Dawkins. *El Cuento del Antepasado.*
Berri Txarrak. *Non Bestela?. Harian* diskotik.
Lydda Franco. *Bolero a media luz.*
Omar Cabezas. *Cancion de amor para los hombres.*
Jurgi Garitagoitia kide presoaren poemak (6,8 eta 10. agerraldiko manifestua).

## Bazatoz, umore?

Batzuetan armairuan gordetzen zait. Ez du irten nahi izaten. Egoskorra ote den nago. Ala ez dagoen. Existitzeari utzi ote dion. Mututu ala muturtu egin ote zaidan. Ebaporatu airean. Urrundu ala betirako ihesari ekin. Zergatik ezkutatu zara? Tutik ez. Badakit batzutan… Egun denak ez direla… hanka eskumaz jaiki… Zergatik ez didazu azaltzen? Kobardea ez zarena dakit… Ez duzula zarata maite… Hitz zehatzen zale… hutsalkeriak ez zaituela… Ahalegin handiegia al naiz zuretzat? Oinak arrastan daramatzadala… Okotza bularrera atxikia… begi niniak ez duela diztirarik… Denbora nahikorik ez al dizut eskaini? Ala gehiegi? Sobera akitua zenbiltzala abisatu zidaten… kexaka zenbiltzala ohartarazi zidaten… Ba ote armairuan ezkutatzeko nahikoa arrazoi? Barrutik giltzaz ixteko… kris eta kras! Giltzarrapo astunagorik! Bai, ezpainak ikusi ditut ispiluan gaur ere, elkarri itsatsiak, horizontal. Herenegundik zaude *missing*… Bi eguneko erresakarako ere ez zen izan bota zenuena! Ez dut uste atzoko giltzariak petraldu zintuenik… Bai, ez nintzen bizkor ibili… zuk ere ez zenidan lagundu… orain ikusita… hain zaila ere ez zenuen… "amaren aurrean ere egin ez dudana zuri eskaini?" esaldi horrekin egin zeniezaiokeen itzuri… Ezezkoan tema nintekeen, bai… Barrabilak altxatzeko agindu zidanean ixilarazi zintudan… bazentozen eta! Zezena bezela mmmmmm!!!... lehenago behar zenuen atera, ordurako lokatzetan baikinen… Hortik aurrerakoa erreza zen. Mingaina ere atera niezaiokeen, bi hatz lodiak belarri punta banatara eraman… Zuk ere ez zenidan lagundu ordea… Ipurdia erakutsi nion… eta besazpiak eta orpoak… barrabil atzerik ez, ordurako desagertua zinen, badakit, baina jakintzazu ez nituela altxa. Ez nituen barrabilak altxa! Zure ordez etorri zitzaidan ixila. Hark erantzun zion. Beraz,

ez da giltzariak petraldu zintuela. Ez duzu behintzat motiborik. Baina zu, armarioan kris eta kras! Egoskorra zer den ezereza!

Atzo, bertan izan bazina… Lehertuko ginateke biok. *Soirée*-ko lehen erronda zen. *Pingui* agertu zen aspaldiko partez. Bai, ibilkera pinguinistikodun presozaina. Nola dakidan? *Tin-tan-tin-tan-tin-tan* egiten zuelako oihartzunak korridorean. Eta gatibu batek "*Pingui, vas à l'Artique!*" egin ziolako oihu. Eta guztiek barre. Nik ez. Banan bana ireki zituen begitxuloak. Miuun igotzean, klank jaistean. Miuun klank, miuun klank, miuun klank. Hurbildu ahala ozenago MIUUN KLANK, MIUUN KLANK. Eta ni… paperaz estalia nuelakoan… flamenkoari jarrita besoak gora, eskuak ehun ta laurogei gradutako jiratan, oin hutsak lurrari orpoka eta gerria ezker eskuin… benetako sevillanetan! *Olé, jéze, yevo ya pa quinze días*… orpoak kanka! *Y van pasando los días*… altxa eskuak… *no hay quien se aleje de ti*… beste orp… miuun "*oh!, Mais Iriondo… habille-toi síl te plaît!!*" ETA KLANK! Ez nuen barrerik egin…

Halako aukera eta agertu ez. Zurea larria da gero. Pinguik etorritako bidetik aldegin zuen. Badakizu, presozain kakatiek egin ohi duten gisan, behin fitxatu eta atzera buelta kooorrika korridorean, umeek logela ilunetik salako argira nola. "*Allez Pingui, vas vite, droit à l'Arctique!!!*". Eta barreak. Nik ez. Izerdia xukatu eta musika itzali. Horixe egin nuen. Eta leihora. Hil argi potoloa mila zatitan sarturik, aurreko murru grisetik gora beha jarri nintzen. Zergatik ixiltasun hau?

Iluna konplize, izarez egindako soka luze batean zintzilik merkantziaren bat hara hona zerabilten bi presok. Leihotik leihora. Batimenduaren ertz batetik bertzera, hogei metro luzeko

garraioa. Metro aunitz. Eta zer? Trabatuta geratu ez zitzaien ba tarteko metal sareren batean! Batek handik eta besteak hemendik, tira sendo!, baina txina ez zela destinura iristen.

"*Conard?! Pour la tête de ma mère!,* nik *dilaspa* (hemen atzekoz aurrera mintzatzeko ohitura dago, beraz, *aspaldi*) atera det *shit*a!"

"Korana testigu, *ulà* ez detela *soja* (jaso)!"

"Nik dilaspa bota det, guruse (seguru) soja dezula, *pour la tête de ma mère! Fils de pute!*"

"*Fils de pute, ni?! Hi, kitotxi* (Txikito) *junai tzarranak (antzarrak)* perratzera!!!"

"Earki zeok, earki zeok, *arbi* (bihar) ikusiko dittuk *tzarranak*!!!"

Ba ez ba, aizu, zu hor ere missing. Aidanez, gaur nire azpiko etxartean suertatu dira biak promenadean. Zalapartak entzun orduko inguratu naiz leihora *ostia, atzoko antzarrak!*. Ba elkar jotzera zihoazen momentuan, batek burua altxa du *regard!*, eta hantxe ez dute ba ikusi bezperako soka sarean trabatuta! Eta hamabigarren zelda parean behar lukeen *shit*-aren arrastorik ez. Pentsatuko duzunez, hamabigarren zeldako tipoa begiradaz zulatu dute aurrena, eta gero… tzarranak perratu!

Honek ekarri dit gogora iazko kuadro hura. Eguzki galdatan urtu gineneko hura. Oroi, otoi. Bat-batean sortu zinen gazi zaporez, barre mingotsaz, baina barrez, finean. ONUko laguntzaile humanitarioek txakurrei lez bazka herritarrei botatzean sortzen den irudi HUNKIGARRIKI salgarri hori, berta bertan ikusi

genuenean. Ez ziren umeak etxartekideak. Batak, Kontraxek, ile urdindua; Hassanek, boxeolari sudurra; hirugarrenak Hardy lodiaren itxura –Flakoaren txuribeltzeko kolegarena-. Gazteenak hogeita hemezortzi. Gogoan dut, paketea lehen pisuko *grilla*tik (sare metalikotik alegia) etxartera bota zutelarik, nola boxeolariak sartu zuen hanka instantean Kontraxen esku artean zen zorro nabarra eskuratzeko. Nola bultza zion azkenak Hassani eta nola Harryk (tontoa zirudien ba!) jaso zuen trofeoa. Nola ile urdinak tente, zuzendu zitzaion gizenari mmmmmm!, nola askatu zuen honek altxorra eta nola Hassanek atzetik berriz ere hanka zuztarra luzatu, Kontraxi erregatea egin eta poltsatxoa bereganatu zuen. Nola hiruak errugby mele batean kateatu ziren eta nola azkenean etxarte osoan parreak lehertu ziren pakete humanitarioarekin bat. Dena hauts.

Ricore kafea zen. 100 bat gramo. Lurrean part zabaldu ziren txustar, karkax, plastiko eta paper pusken artean. Orduan desagertu zinen zu, oroitzen?, lurrera makurtu eta bakoitzak bere herena snifatu zuenean –esateko modua da-. Ondoren Hassanek, promenadaroko bere helburuari ekin zion, 33 gramo ricoré poltsikoan, harro demonio, "*Eh, mon pote, t'as du tabac?*". Berriz agertu zinen, gorriz beztiturik, eguneroko noriara itzulita. "*Zimer*" (merci).

Gogoan duzu Parixen bizi den Hazpandar zahar hura? Negu gorriaren atarian agertu zen bizarzuri garraztaffari hura? Beste SDF (*Sans Domicile Fixe*, etxegabeei deitzen zaie hala, hitz denak siglaratzeko ohiturari men) batzuren antzera aurkeztu zitzaigun etxartearen hotzean, kartzelaren "ogia eta ohea ziurtatua!" eskaintzari muzin ezin egin eta polizia komisaldegian, Casio erloju ostua eskuan, bere gorputza entregatu ostean. Bertsolaria bera. Bertsolari antzinakoa euskara aski garbian kantatzen zuena. Boza sakona. Pare bat bertso oroitzen ditut –segituan apuntatu

bainituen nire kaiera gorri ikustezinean. Bata, bi egun lehenago sortu zuen, bigarrena berriz tatuai baten modura mihian zeraman zaku zarpail itsaskor baten antzera, bere izanaren testigu. Hara bi bertsoak, hitsak, grixak, zatarrak, zarpailak, garrtzak Brassens anarkistaren "*La chanson de l'Auvergnat*" kantuaren doinuan abestu zizkigunak:

Izara zuri ixila
orbel lotien estalki
nora doaz bi zozo beltz
barraskilo bi ehizaki?
Atera ditut leihotik
hiru edo lau argazki
Argi ta itzala bereiziz
hormigoi murru bat aski
Erlojuko orratzen kontra
lurrunka hamaika narrasti
Hamaika zaintza postuak!
Txakurrak ehun ta zazpi!
Zoologiko eder hau
begipe hontan izaki
Goxo bilduko nauela
manta berdeak badaki

Usoak hankaz gora zut
Txarrantxa desagertu da
Trikolorra petrifika
harresian pitzadura
inularrak ezin ditu
etxegabeak ardura
zeropeko filma whiskey'z
sartu dute teilatura

Non dira chauffage zentralak!
Non, edredoi goxo hura!
Kale kantoi ilunean
katu baten hezurdura
Ondoan eltze keztu bat
eskuz egindako sura
Amona zahar batek, *aupetz*!
untxia jan du gustura.

Hodeiertza zuri da. Hortik gora urdinduz doa amiñika, arinetik sendora. Eta begira!, han urrunera begiratuko bazenu –baina ez zaudenez ezin ikusiko duzu-edifizio luze bat ehizatuko zenuke begiaz. Eraikuntza hark –largabistarik ezean ezin antzeman zer demontre ote den (Ikerrek dio *silo bat!*, Jurgik *ur depositoa!*, beste Ikerrek *auskalo!*, eta nik berdin)-, adierazten du guretzat iparra. Ez da iparra ordea! Hegoa da, hego mendebala, guretzat ipar dena. Eta orain, hemen bazina ostikoz bidaliko zintuzket zeruan gora, urdin ilunduaren parera arte gutxienez, handik teleskopio sobietarren prezisioz ikusitakoa konta diezadazun. Handik, teleskopio sobietarren prezisioz, zortziehun eta laurogeita hamar kilometrora beste eraikuntza atzemango zenuke. Haren azpialdean eskailera batzuk eta sator zulo bat. Eta txakur espien tramankulu orojakileak erabiliz ilunpe beltzean oraintxe gure aurrean diren berrehun eta zortzi begi dizdirak kausituko zenituzke. Bazatoz?

*2011ko Lasarteko ekitaldirako idatzitako testua*



**Joseba Sarrionandia Uribelarrea**
1958
Iurreta

1980an kartzelaratu egin zuten eta 1985eko San Fermin egunean Martuteneko espetxetik ihes egin zuen. Ordudanik erbestean bizi da.

## Bergara 1838

Gerlaren ondoren ezin da, jakina, justizia
egokirik banatu.
Ehun milek mereziko luke, legeen arabera,
zigor gogorra,
eta ez litzateke egokia gehiengoa
kondenatzea.

Egin daitekeena da, hartu edozein eta horri
bi aste kartzela ezarri,
eta beste hura libre utzi, eta honi,
gizajoari, hogei urte,
eta gero hartu beste bat eta horri, errudun
handi horri, ostera,
zigorra beharrean, urrezko medaila bat
publikoki ezarri
edo pribatuan eta hurrengoari hiru urte, eta
horko beste kriminal zital horri,
indemnizazio aberatsa, biktima lez, azken batean
denak izan garelako,
aldizka, borrero eta biktima. Hala egin daiteke
justizia,
justizia egiteko era bat da behintzat, eta baliteke
hala komeni izatea,
gauzak errazteko eta, batez ere, beste ehun
milaren inozentzia azpimarratzeko.

Ondo begiratuez gero, tontoen gauza litzateke
ez ohartzea justizia delako hori
gauzak egiteko modu bat baizik ez dela,
beste modu batzuen artekoa,
komenigarriagoa behar bada, baina ez berez
justuagoa edo duinagoa,
gerran antzeko ekintzak egin dituelako mundu guziak,
pertsonalki
edo ordezkarien bidez, eta horixe delako, gainera,
gerraren tragedia
eta erru orokorra: krimenaren eskema onartzea
edo, hain luzaroan,
krimenaren eskema emendatzeko imajinaziorik
ez izatea.

## Gorozika 1937

Ez zara zu, zorionez, 1937ko maiatzean Gorozikako
baserri hartara sartu zena
eta sortetxea, egunsentiko behelainoak desegin orduko,
hondaturik topatu zuena.
Hark ez zekien etxekorik aurkituko zuen, etxean.
Ez zegoela inor ematen zuen,
etxeko txakurra ere ez zitzaion irten bidera
aspaldiko kontentuekin.
Milizianoek utzitako zaborra bakarrik atartean,
atea parez pare zabalik,
ezkaratzean aulkia hautsirik, errautsa barreiaturik.
Kortara sartu zen,
abererik ez kortan, eta han ilunetan zegoela zarata bat
entzun eta tiro egin zuen
goruntz. Hiru zulo egin ziren zurezko sabaian eta
hiru zuloetako batetik hasi zen
odola jausten, irobala gorriaren moduko zorrotada
mehea, bere besagainera,
epela, isilik, eta ez zekien odol hura zerena zen
edo norena.

## Problemak

«Ez dago problemarik…» erantzun nion, polizia atzetik zuela
eta ea lagunduko nion esan zidanean,
Eta autoz eraman nuen leku seguruago baterantz,
seguruagoa zela uste nuen behintzat,
gauez eta euripean, edozein momentutan kontrol batek
ebaki zezakeen bide ikaragarri hartatik.

Fabrikaren alboko tabernara sartu ginen, egunkari bat zegoen
mahai gainean tolestuta,
eta neure lagunaren aurpegi laurden bat ikusten zen portadan
lehen planoan,
eta diru-ordain handi bat eskaintzen zen bera harrapatzeko
edozein informazioren truke.

«Igual, badago problemaren bat…» esan zidan lagunak
ispilua ematen zuen erretratu hura alboratuz.
Zineko gertaeren modukoa da, pentsatu nuen, baina
zinekoak baino arraroagoak ziren gauzak,
zinezko euria, gurpil zipriztinak, bide alboko amildegiak,
eta polizia guzia imajinatzen nuen atzetik…

Problema ezaren esaldi harekin, hara, zeharo ekibokatu nintzen.
Bazeuden problema batzuk, laster agertu ziren.
Nire izena egunkarian azaldu zenean, neuk ere polizia atzetik nuela,
beste lagun bati eskatu behar izan nion laguntza.
«Ez dago problemarik…» esan zidan lagunak, thriller hasiera bat
asmatzeko intentzio nabarmenik gabe.

## Bederatzi te kikara Saharako basamortuan

1
Lehenengo te kikara bizitza bezain
garratza izanen da,
bigarren te kikara amodioa bezain
samurra,
hirugarren te kikara heriotza bezain
goxoa.

2
Lehenengo te kikara amodioa bezain
garratza izanen da,
bigarren te kikara heriotza bezain
samurra,
hirugarren te kikara bizitza bezain
goxoa.

3
Lehenengo te kikara heriotza bezain
garratza izanen da,
bigarren te kikara bizitza bezain
samurra
eta hirugarren te kikara amodioa bezain
goxoa.



**Mikel Zarrabe Elkoroibide**

Eibar

1989. urtean atxilotu zuten Frantzian.
Orain Espainiako kartzeletan daukate.



C.P. Teruel
44001 Teruel



**Itziar Plaza Fernandez**
1982
Bilbo

2009tik hona daukate preso.



Fleury Merogis
Maison d'arrêt des femmes
9, avenue des peupliers
91 705 Saint-Geneviève-des-bois Cedex
Frantzia



**Joseba Galarraga Arrona**
1959
Deba

1999tik hona daukate preso.



C.P. Valladolid
47011 Villanubla
Valladolid



**Julen Atxurra Egurrola, *Pototo***
1959
Lekeitio

Atxilotze data: 1996ko uztailak 23.



M.C. Saint Maur
Bel- Air
36.255 Saint Maur Cedex
Frantzia



**Mikel Orbegozo Etxarri**
1979
Intxaurrondo

Atxilotze data: 2005eko otsailak 17.



Badajoz-Prisión Provincial.
Carretera de Olivenza, km. 7,3.
06071 Badajoz.

# IRUDIMENA


UMEA NINTZELA EZ NITUEN ERREALITATEA ETA IPUINAK ONGIEGI BEREIZTEN, ETA INGURUAN NUEN JENDEAK ERE EZ ZIDAN HORRETAN GEHIEGI LAGUNTZEN, NERE IRUDIMEN NEURRIGABEA ELIKATZEN BAIT ZUTEN


MENDI TXANGOETAN AITAK IPUIN TXUNDIGARRIAK KONTATZEN ZIZKIDAN
LAMIAK EDER EDERRAK DIRA, ERREKA BAZTERRETAN DABILTZA, AHATE OINAK DITUZTE ETA BEREN ILE HORI LUZEA URREZKO ORRAZI BATEZ ORRAZTEN DUTE
OOOH!


EGUNON!
EGUNON, BAI!
!


BEHIN BAT HARRAPATU NUEN IA
AITA AITA! LAMIA DA!!! LAGUNDU BOTAK KENTZEN! AHATE OINAK BAIETZ IZAN! LAMIA DA SEGURU!!!
BARKAIOZU MUTIKOARI IRUDIMEN GALANTA DAUKA ETA...

**Mikel Orbegozo**
Marrazkiak










HIRURAK HASERRETU ZIREN NEREKIN ATE SEKRETUAREN BILA HASI NINTZEN BATEAN
TOPATUKO ZAITUT GANBARA MAGIKOA!
RAS RAS
RAS RAS
¡AAA!


BEHIN, "ENEKO" NERE HARTZA ALDE ZAHARREAN GALDU NUENEAN, AMONAK ERE ISTORIO MIRAGARRI BAT KONTATU ZIDAN BERE ETXEAN BERRIRO NOLA AGERTU ZEN AZALTZEKO
ETA ORDUAN ATEKO TXIRRINA ENTZUN NUEN ETA BERTAN ZEGOEN "ENEKO". ZURE FALTA ASKO SOMATZEN ZUENEZ HONAINO OINEZ ETORRI ZELA KONTATU ZIDAN...
BERRIAGOA DAGOELA DIRUDI!
ZUREKIN BERRIRO TOPATZEAK EGITEN ZION ILUSIOAGATIK BERE BURUA TXUKUNDU BAIT DU!
OOOH!


SSSS! "ENEKO" NOLA MUGITZEN DEN IKUSI NAHI DUT!
JODEEE... ORDUAK DARAMATZI HORRELA! EZ AL GARA ISTORIOTXOEKIN PASATZEN ARIKO? DENA SINESTEN DU!
ENEKO EZ NUEN INOIZ MUGITZEN IKUSI, BAINA GARBI ZEGOEN DEXENTE EGIN ZUELA ALDE ZAHARRETIK AMONAREN ETXERAINO NERE BILA JOANAZ


HAZIZ JOAN AHALA HELDUEN MUNDUAN MURGILDUZ JOAN NINTZEN, KONTURATU GABE AHAZTURAK ESTALI ZITUEN
LAMIAK, SORGINAK, GANBARA MAGIKOA ETA "ENEKO"... IRUDIMENAK TXOKO TXIKIAGOA IZAN DU NIGAN...
GAUR ARTE...


GAUR NERE ALABATXOAK GALDERA BAT EGIN DIT...
AITA, NORK EKARRI DITU OPARIAK?


OLENTZERoREN ISTORIOA KONTATUKO DIZUT?
BALE!
...ETA POSIBLE ZITEKEEN OPARIRIK POLITENA EGIN DIT...


...IRUDIMENA ITZULTZEA.
OLENTZERO HORRELAKO TRIPA ERRALDOIA DUEN IKAZKINA DA, ETA MENDIAN BIZI DA LAMIEKIN, BASAJAUNEKIN...
OOOH!
ETA ZAKU MAGIKO BAT DAUKA ZEINETAN EUSKAL HERRI OSORAKO OPARIAK KABITZEN DIREN!






MARTXA
TTAN TTAKUN TTAN TTAKUN
TTAKUN TTAN TTAKUN TTAN


POSIBLE AL DA? NONDIK ATERA DUTE TXALAPARTA BAT?
TTAN TTAKUN TTAN TTAKUN
TTAKUN TTAN
TTAN TTAKUN


EMAN GOGOR!
NIK USTE ENTZUTEN DUTELA!
TTAN TTAKUN TTAN TTAKUN TTAN TTAKUN

# URTARRILEKO DEIA










BARRUAN
ESPETXEA
MODULOA
ZELDA
PRESOA


ZER MODUZ?
BIXITAN EGON ZARA? ETA ZER MODUZ DAGO?
BA MEDIKAZIO BERRIA JASOTZEN HASI DENETIK ASKO HOBETU OMEN ZAIO ANIMOA!
ELKAR TASUNA


SENDATZEKO
CÁRCEL
HEMOS DADO CON UN TRATAMIENTO QUE HARÁ QUE MEJORE UN MONTÓN: COMIENCE A CAMINAR Y YA VERÁ CÓMO CUANTO MÁS ATRÁS DEJE LA CÁRCEL MEJOR SE SIENTE!
EUSKAL HERRIA

**Mikel Orbegozo**
Marrazkiak














**Itziar Moreno Martinez**
Bilbo
1982

Atxilotze data: 2011.4.10.



Maison d' arrêt des Femmes de Seysses
Rue Danièle Casanova
B.P 85 Seysses
31603 Muret Cédex
Frantzia



TXOKORIK ILUNENA ARGITZEN DUZUELAKO,
ESKERRIK ASKO ESPERO EZ DUZUENEI, MILESKER''.



**Jon Aingeru Otxoantezana Badiola, *Kirru***
1954
Ondarroa

Atxilotze data: 2002.



Poissy - Maison Centrale
17, Rue de l´Abbaye
78303 Poissy Cédex
Frantzia



**Gorka Lupiañez Mintegi**
1980
Durango

Atxilotze data: 2007ko abenduak 6.



C.P. Curtis-Teixeiro
Carretera de Paradela s/n
15310 Curtis
A Coruña



**MIKEL IBAÑEZ**
Elgoibar 1954.11.11
Eibar 2011.4.7

"Suzkoak zirela bagenekien arren
izarrak maite genituen,
gure ametsak gorpuzten bait zituzten"

Joseba Sarrionandia

